y.

E. S. Dodgson
25 Nov: 1891.

omitted in the
Bibliographie Basque
de Mr. J. Vinson 1891. page 156
unless it is 46.gg. in which
case it is imperfectly described.

# PERMISIONEA.

**F**RANÇOIS LACROIX, misericordia dibinoaz eta Alkhi Saindu Apostolicoaren autoritatez Bayonaco Aphezpicu;

Iracurri ondoan P.-A. CLUZEAU, eguiu darocuten galdea, berritan imprimatu nahiz *Exercicio Izpirituala, bere salbamendua eguiteco desira duten Guiristinoentçat, laguntça handitacoa*, Bayonaco diocesaco usaiacotçat.

Permetitu eta permetitcen dugu galdeguileri, berritan obra hunen imprimatcea, beguiztatu dugun exemplera beçala içatecotan, eta biga lehenic eçartcecotan Aphezpicuteguico Liburuteguian.

Bayonan emana gure sinadurareu, gure armen cigiloaren eta gure secretarioaren sinaduraren azpian.

Ereaoraren hogoi eta seian 1854.



✝ FRANÇOIS LACROIX,
*Bayonaco Aphezpicua.*

Yaun Aphezpicuaren manus:

FRANCHISTÉGUY, secr.[a]

# EXERCICIO
# IZPIRITUALA,

## BERE SALBAMENDUA EGUITECO DESIRA DUTEN GUIRISTINOENTÇAT LAGUNTÇA HANDITACOA;

## EDICIONE BERRIA,

**Emendatua ordenarioco Meça latinaz, Phazco Himnoaz, Lethaniez, Contricionera preparatceco bertce moldea, etc.**



SALTCEN DA BAYONAN,

CLUZEAU, liburu eta paper martchantarçn baithan, Cilharguin carrican, 12 numeroan.

---

1855.

# TABLA.

| UR-THEA. | IGAN-DEA. | EPAC-TA. | HAUSTE. | BAZCO. |
|---|---|---|---|---|
| 1850 | f | xvij | 13 Oxailla. | 31 March. |
| 1851 | e | xxviij | 5 March. | 20 Apiril. |
| 1852 | d c | ix | 25 Oxailla. | 11 Apiril. |
| 1853 | b | xx | 9 Oxailla. | 27 March. |
| 1854 | A | j | 1 March. | 16 Apiril. |
| 1855 | g | xij | 21 Oxailla. | 8 Apiril. |
| 1856 | f e | xxiij | 6 Oxailla. | 23 March. |
| 1857 | d | iv | 25 Oxailla. | 12 Apiril. |
| 1858 | c | xv | 17 Oxailla. | 4 Apiril. |
| 1859 | b | xxvi | 9 March. | 24 Apiril. |
| 1860 | A g | vij | 22 Oxailla. | 8 Apiril. |
| 1861 | f | xviij | 13 Oxailla. | 31 March. |
| 1862 | e | * | 5 March. | 20 Apiril. |
| 1863 | d | xj | 8 Oxailla. | 5 Apiril. |
| 1864 | c b | xxii | 10 Oxailla. | 27 March. |
| 1865 | A | iii | 1 March. | 16 Apiril. |
| 1866 | g | xiv | 14 Oxailla. | 1 Apiril. |
| 1867 | f | xxv | 6 March. | 21 Apiril. |
| 1868 | e d | vi | 26 Oxailla. | 12 Apiril. |
| 1869 | c | xvij | 10 Oxailla. | 28 March. |
| 1870 | b | xxviij | 2 March. | 17 Apiril. |
| 1871 | A | ix | 22 Oxailla. | 9 Apiril. |
| 1872 | g f | xx | 14 Oxailla. | 31 March. |
| 1873 | c | j | 26 Oxailla. | 13 Apiril. |

| URTHARILLA. | OXAILLA. |
|---|---|
| 31 *egun. Ilharg.* 30. | 28 *egun. Ilharg.* 28, *eta bisixto urthea, bada emozu 29 egun orduan, eta Ilharg.* 30. |
| 1 CIRCONCISIONEA. | 1 s. Ignazio. |
| 2 s. Clair, apheça. | 2 *Purificac onea.* |
| 3 sta. Guenebieba. | 3 s. Blas. |
| 4 sta. Tita. | 4 s. Aventin. |
| 5 s. Simon stil. | 5 sta. Agatha. |
| 6 *Erregueac* | 6 sta. Dorotha. |
| 7 s. Erremun. | 7 sta. Beronica. |
| 8 s. Julien. | 8 s. Esteben. |
| 9 s. Josse. | 9 s. Amand. |
| 10 s. Guillamu. | 10 sta Scolastica. |
| 11 s. Salma. | 11 s. Seberin. |
| 12 s. Satira. | 12 sta. Eulalia. |
| 13 s. Hilario. | 13 s. Martinien. |
| 14 s. C. Bathejoa. | 14 s. Didier. |
| 15 s. Maur, apheça. | 15 s. Faustin. |
| 16 s. Marzel. | 16 sta. Julianto. |
| 17 . Antonio. | 17 s. Valentin. |
| 18 s. Petriren alkhia. | 18 s. Simeon. |
| 19 s. Omer. | 19 s. Sabin. |
| 20 s. Sebastien. | 20 s. Constantin. |
| 21 sta. Agnes. | 21 s. Pepin, duc. |
| 22 s. Bichintcho. | 22 s. Antiochia. |
| 23 sta. Emeren. | 23 s. Lazaro, *Big.* |
| 24 s. Timothee. | 24 s. Matthias. |
| 25 J. Pauloren conb. | 25 sta. Teresa. |
| 26 s. Policarpe. | 26 s. Nestor. |
| 27 s. J. Cris. | 27 sta. Honorina. |
| 28 Charlem. | 28 s. Romain. |
| 29 s. Petri Nolas. | |
| 30 sta. Bathilda. | |
| 31 sta. Marcella. | |

| MARCHOA. | APIRILLA. |
| --- | --- |
| 31 *egun. Ilharg.* 30. | 30 *egun. Ilharg.* 29. |
| 1 s. Leon. | 1 s. Theodore. |
| 2 s. Basilia. | 2 s. Frantz. P. |
| 3 s. Luze, aiat. | 3 s. Pancraze. |
| 4 s. Adrian. | 4 s. Ambrosio. |
| 5 s. Eusebe. | 5 s. Vincent. F. |
| 6 s. Victor. | 6 s. Celestin. |
| 7 s. J.-de-Dieu. | 7 s. Alexandrin. |
| 8 s. Thomas, acq. | 8 s. Denis. |
| 9 40 Martyr. | 9 s. Procope. |
| 0 s. Hugues. | 10 sta. Appollonia. |
| 11 s. Soter. | 11 s. Leon, aitas. |
| 12 s. Gregorio. | 12 s. Zenon. |
| 13 s. Donat. | 13 sta. Eufemia. |
| 14 s. Silbain. | 14 s. Tiburze. |
| 15 s. Longin. | 15 sta. Helena. |
| 16 s. Patrize. | 16 s. Calista. |
| 17 sta. Gertrude. | 17 s. Anicet. |
| 18 s. Alexandre. | 18 s. Apollinario. |
| 19 s. Josef. | 19 s. Crescent. |
| 10 s. Joachim. | 20 s. Sulpize. |
| 21 s. Benoit. | 21 s. Anselme. |
| 22 s. Cyprien. | 22 sta. Opportuna. |
| 23 s. Paul, aphezp. | 23 s. Jorje. |
| 24 s. Agapit. | 24 s. Marcelin. |
| 25 And. Mariar. An. | 25 s. Marc., aphezp. |
| 26 s. Isidore. | 26 s. Clair. |
| 27 s. Juan Egypt. | 27 s. Anastase. |
| 28 s. Gordian. | 28 s. Vital. |
| 29 s. Priske. | 29 J. Petri, martyr. |
| 30 s. Quentin. | 30 s. Eutropa |
| 31 sta. Balbina. | |

| MAYATÇA. | ERREAROA. |
|---|---|
| 31 *egun. Ilharg.* 30. | 30 *egun. Ilharg.* 29. |
| 1 s. Jacq. s. Philip. | 1 s. Justin. |
| 2 s. Athanasio. | 2 s. Marzelin. |
| 3 Gurutze S. aurkh. | 3 sta. Clotilde. |
| 4 sta. Monica. | 4 s. Kintin. |
| 5 s. Godard. | 5 s. Erasme. |
| 6 s. Juan L. P. | 6 s. Claude. |
| 7 s. Cler. | 7 s. Paulin. |
| 8 s. Michel. | 8 s. Medard. |
| 9 s. Nicolas. | 9 s. Felician. |
| 10 s. Ciriaque. | 10 s. Ciriake. |
| 11 s. Mammert. | 11 s. Barnaba. |
| 12 s. Pancraze. | 12 s. Basilide. |
| 13 s. Servais. | 13 s. Antonio Pad. |
| 14 s. Bonifaze. | 14 s. Basil. |
| 15 s. Isidore. | 15 s. Modeste. |
| 16 s. Honoré. | 16 s. Ferreol. |
| 17 s. Sever. | 17 sta. Aura. |
| 18 s. Felix, aph. | 18 s. Marzel. |
| 19 s. Ibes. | 19 s. Gerbais. |
| 20 s. Bernardin. | 20 s. Silbere. |
| 21 sta. Helene. | 21 s. Lenfroy. |
| 22 s. Didier. | 22 s. Paulin. |
| 23 sta. Julianna. | 23 *Bich. eta Barura.* |
| 24 s. Dom eta s. Rog. | 24 Jaun doni Batista. |
| 25 s. Urbin, aitas. | 25 s. Eloi. |
| 26 sta. Eleuthere. | 26 s. Anselmo. |
| 27 s. Jean. | 27 s. Sixta. |
| 28 s. Germain. | 28 *Bichilia.* |
| 29 s. Maximien. | 29 *J. Petri eta J. P.* |
| 30 s. Felix. | 30 J. Petriren, cob. |
| 31 sta. Petronila. | |

| UZTAILLA. | ABOSTUA. |
|---|---|
| 31 *egun. Ilharg.* 30. | 31 *egun. Ilharg.* 30. |
| 1 s. Thierri. | 1 J. Petri gathetan. |
| 2 And. Mar. Bisitac. | 2 s. Esteben. |
| 3 s. Gregorio. | 3 J. s. Esteben. |
| 4 s. Martin Tr. | 4 s. Dominica. |
| 5 s. Marzial. | 5 Elh. And. Maria. |
| 6 s. Trankilin. | 6 J. Crist. G. J. Tr. |
| 7 Transl. s. Thom. | 7 s. Donat. |
| 8 s. Procope. | 8 s. Ciriac. |
| 9 s. Felizian. | 9 s. Romain. |
| 10 7 Anaja, martir. | 10 J. Laurendi. |
| 11 Tr. s. Benoat. | 11 s. Tiburce. |
| 12 s. Nabot. | 12 sta. Clara. |
| 13 s. Anaclet. | 13 s. Hipolita. |
| 14 s. Bonabentura. | 14 s. Eusebe, *Big.* |
| 15 sta. Julia. | 15 *Ama B. Assomp.* |
| 16 s. Eutacha. | 16 s. Rok. |
| 17 s. Alexis. | 17 s. Mammert. |
| 18 s. Simphorien. | 18 s. Agapit. |
| 19 sta. Radegonde. | 19 s. Brice. |
| 20 sta. Margarita. | 20 s. Bernat. |
| 21 s. Bictor. | 21 s. Anastasie. |
| 22 sta. Maria Madal. | 22 s. Thim. |
| 23 s. Apolonario. | 23 s. Simph. |
| 24 sta. Chris. *Bich.* | 24 s. Barthelem. aph. |
| 25 s. Jak. s. Chr. | 25 s. Louis, erregea. |
| 26 Tr. s. Marzel. | 26 s. Zephirin. |
| 27 s. Pantaleon. | 27 s. Rufin. |
| 28 sta. Anna. | 28 s. Augustin. |
| 29 sta. Martha. | 29 J. Juanir. Burueb. |
| 30 s. Abdon. | 30 s. Fiacre. |
| 31 s. Chermain. | 31 s. Paulin. |

| BURRULA. | URRIA. |
|---|---|
| 30 *egun. Ilharg.* 29. | 31 *egun. Ilharg.* 30. |
| 1 s. Leu, s. Giles. | 1 s. Remi. |
| 2 s. Lazaro. | 2 Aingeru Guard. |
| 3 s. Mansuet. | 3 s. Candida. |
| 4 sta. Rosalie. | 4 s. Frantses. |
| 5 s. Bictorin. | 5 s. Plazide. |
| 6 s. Zakharia. | 6 s. Bruno. |
| 7 s. Cloud. | 7 sta. Justina. |
| 8 And. Mar. *Sortzea*. | 8 sta. Brichita. |
| 9 sta. Beronica. | 9 s. Denis. |
| 10 s. Nicolas. | 10 s. Chereon. |
| 11 s. Cir. | 11 s. Nicaise. |
| 12 s. Philip. N. | 12 s. Benant. |
| 13 s. Maurilo. | 13 s. Cherard. |
| 14 Gurutze S. Exalt. | 14 s. Calixte. |
| 15 s. Nicodeme. | 15 sta. Teresa. |
| 16 s. Ciprien. | 16 s. Maxime. |
| 17 s. Lambert. | 17 s. Florentin. |
| 18 s. Richard. | 18 s. Luc. |
| 19 s. Janbier. | 19 s. Amable. |
| 20 s. Agapit. | 20 s. Arthemise. |
| 21 s. Mathiu. | 21 sta. Ursula. |
| 22 s. Maurize. | 22 s. Melon. |
| 23 sta. Thecla. | 23 s. Hilarion. |
| 24 s. Sorlin. | 24 s. Maglore. |
| 25 s. Firmin. | 25 s. Crep. s. Cres. |
| 26 s. Senatur. | 26 s. Amand. |
| 27 s. Com., s. D. | 27 s. Frumen. |
| 28 s. Exupere. | 28 s. Simon, s. Jude. |
| 29 s. Michel. | 29 s. Narze. |
| 30 s. Jerome. | 30 s. Luzien. |
| | 31 s. Kintin. |

| HACILLA. | ABENDOA. |
|---|---|
| 30 *egun. Ilharg.* 29. | 31 *egun. Ilharg.* 30. |
| 1 Umiasaindu. | 1 s. Eloi. |
| 2 Arima joanac. | 2 s. Bihiana. |
| 3 s. Marzel. | 3 sta. Balera. |
| 4 s. Charles, Bor. | 4 sta. Barba. |
| 5 s. Malachia. | 5 s. Sabat, aph. |
| 6 s. Leonard C. | 6 s. Nicolas. |
| 7 s. Florent. | 7 s. Ambrosio. |
| 8 s. Couron. | 8 *And. Mar. Conz.* |
| 9 s. Maturin. | 9 s. Nicaise. |
| 10 s. Triphon. | 10 s. Melchiade. |
| 11 s. Martin. | 11 s. Damas, aph. |
| 12 s. Rene. | 12 s. Balentin. |
| 13 s. Brize. | 13 sta. Luze. |
| 14 s. Bertran. | 14 s. Lo. |
| 15 s. Marcou. | 15 s. Eusebe. |
| 16 s. Euchene. | 16 s. Abdon. |
| 17 s. Agnan, aph. | 17 B. J. Matha. |
| 18 s. Romain. | 18 s. Lazaro. |
| 19 sta. Elisabeth. | 19 s. Nemese, m. |
| 20 s. Odo. | 20 s. Clement. |
| 21 J.-Cr. Present. | 21 s. Thomas, ap. |
| 22 sta. Zizila. | 22 s. Flaian, m. |
| 23 s. Clement. | 23 sta. Bictoara. |
| 24 s. Prosper. | 24 s. Delph., *Bich.* |
| 25 sta. Cathalina. | 25 *Eguberri.* |
| 26 s. Chen. A. | 26 s. Esteben. |
| 27 s. Agricola. | 27 s. Jean, ebanjel. |
| 28 s. Etienne. | 28 Haur Innozentac. |
| 29 s. Saturnin, aph. | 29 s. Thomas. |
| 30 s. Andre. | 30 s. Sabin. |
| | 31 s. Silbestre. |



# GOICECO

# OTHOITÇA,

## ETCHECO GUCIEC ELGARREKIN EGUIN BEHAR LUKETENA.

**AITAREN, ETA SEMEAREN, ETA IZPIRITU-SAINDUAREN ICENEAN. HALABIZ.**

**Orhoit gaitecen Yaincoaren aitcinean garela, eta adora deçagun Adoracionezco Acta batez.**

*Adoracionezco Acta.*

YAINCO guciz botherexua, Aita, Semea, eta Izpiritu-Saindua, çoinac creatu bainauçu çure eçagutceco eta maithatceco ahalarekin, huna non nagon

umilki çure aitcinean belhaunca. Eçagutcen dut ene miseria eta ezdeustasuna ; adoratcen çaitut gauça gucien Creatçalea eta Nausi Soberanoa beçala.

Yauna, sinhesten dut çu baithan, ceren eguia bera baitçare ; esperantça dut çu baithan, ceren guciz ona baitçare : maite çaitut ene bihotz guciaz, ene arima guciaz, ene indar guciez, ceren baitçare osoki maithagarria.

Cer bihurtuco deraulçut, Yauna, çuganic errecebitu ditudan ongui-eguin gucientçat? Deus ez dut çure yenerostate handiari çor ez diotanic. Eskerrac deraitçut bereciki ceren creatu nauçun, Bekhatutic erosi, eguiazco Fedeaz arguitu, eta egundino conserbatu, eguiazco Aita baten artha guciarekin.

*Hemen conxideratu behar da cer gracia eguin deraucun Yaincoac, egun hau gure salbamenduan trabailatceco emanez ; eta hunen sainduki iragaiteco chede cin bat hartu.*

*Orhoitu behar da çoin diren maicenic eguiten diren huxac ; aitcinetic ikhu-*

*si bekhaturat deramaten ocasioneac, eta deliberacione hartu hulaco bekhatutic eta ocasionetic urrunteeco. Hortacotz egon behar da hemen aphur bat ichilic.*

EKHUSTEN ditutçu, Yauna, ene bihotçaren azken pleguetarainoco guciac, eta bereciki memento huntan hartcen ditudan deliberacione sainduac; bainan eçagutcen duçu halaber ene flakecia: nola beguira naiteke bekhatutic çure laguntça gabe? Yainco guciz botherexua, salba neçaçu; ema-datçu, othoi, ene arimaren exayari bihurtceco eta bekhatuan erori gabe egun hunen iragaiteco behar ditudan indarrac. Eguiçu, çure graciaz, ene phenxamenduac, hitçac, obrac, sofricarioac, oro çure legue sainduaren arabera içan diten. Halabiz.

GURE Aita, Ceruetan çarena, erabil bedi sainduki çure Icena; ethor bedi çure erresuma; eguin bedi çure boron-

datea, Ceruan beçala Lurrean ere; iguçu egun gure eguneco oguia; barkha çagutçu gure çorrac, gue gure-ganat çordun direnei barkhatcen dioztegun beçala; eta ez gaitçatçula utz tentamendutan erortcerat; bainan beguira gaitçatçu gaitcetic. Halabiz.

AGUR, Maria, graciaz bethea, Yauna da çurekin; benedicatua çare emazte gucien artean, eta benedicatua da çure sabeleco fruitua Yesus.

Maria Saindua, Yaincoaren Ama, eguiçu othoitz gu bekhatorentçat, orai eta gure heriotceco orenean. Halabiz.

SINHESTEN dut Yainco Aita bothere gucia duena baithan, Ceruaren eta Lurraren creatçalean; eta Yesu-Christo haren Seme bakhar gure Yauna baithan; çoin contcebitu baitcen Izpiritu-Sainduaren berthutez, sorthu cen Maria Birjina-ganic; pairatu çuen Pontcio Pilatusen manuaren azpian; khurutcefica-

tu çuten, hil cen eta ehortci çuten; yauxi cen Ifernuetarat, hirurgarren egunean yaiki cen biciric hilen artetic; iragan cen Ceruetarat, yarria dago Yainco Aita bothere gucia duenaren escuinean; hantic ethorrico da bicien eta hilen yuyatcerat.

Sinhesten dut Izpiritu-Saindua baithan, Eliça Catolico Sainduan, Sainduen partaliertasunean, bekhatuen barkhamenduan, haraguiaren phiztean, bethi iraunen duen bicitcean. Halabiz.

COFESATCEN nitçayo Yainco Aita bothere gucia duenari, Maria bethi Biryina dohaxuari, Micael Arcanyelu dohaxuari, Yoanes-Baptista dohaxuari, Petri eta Paulo Apostolu Sainduei, Saindu guciei, eta çuri ene Aita, ceren eguin baitut sobera bekhatu, gogoz, hitcez eta obraz; ene faltaz, ene fatlaz, ene falta handiaz. Hortacotz othoitz eguiten diot Maria bethi Biryina dohaxuari, Micael Arcanyelu dohaxuari, Yoanes-Baptista dohaxuari, Petri eta

Paulo Apostolu Sainduei, Saindu gucici, eta çuri ene Aita, eguin deçoçuen enetçat othoitz gure Yainco Yaunari.

Yainco bothere gucia duenari urrical gakiscola, eta gure bekhatuac barkhaturic, helaraz gaitçala bicitce eternalerat. Halabiz.

Gure bekhatuen barkhamendua, absolucionea eta erremisionea eman deçagula Yainco bothere gucia duenac eta misericordiaz betheac. Halabiz.

YAUNAREN Ainguerua, Yaincoaren Probidentciaz nitaz artha hartceco establitu cituen guidari leyala, othoi bidal neçaçu eta gaitcetic beguira, egun eta ene bicico oren guciez. Halabiz.

Biryina Maria Saindua, çuec Ainguerau onac, ene Patroin Saindua, eta Saindu guciac, baliac çazkitet Yaincoaren aiteinean. Hil direnen arimac bakean phausa ditecela. Halabiz.

*Demboran denean, erran daitezke Yesusen Icen Sainduaren Lethaniac.*

# YESUSEN ICEN SAINDUAREN LETHANIAC.

KYRIE, eleison.
Christe, eleison.
Kyrie, eleison.
Jesu, audi nos.
Jesu, exaudi nos.
Pater de Cœlis, Deus, miserere nobis.
Fili, Redemptor Mundi, Deus,
Spiritus Sancte, Deus,
Sancta Trinitas, unus Deus,
Jesu Fili Dei vivi,
Jesu splendor Patris,
Jesu candor lucis æternæ,
Jesu Rex gloriæ,
Jesu sol justitiæ,
Jesu Fili Mariæ Virginis,
Jesu admirabilis,
Jesu Deus fortis,
Jesu Pater futuri seculi,
Jesu magni consilii Angele,
Jesu potentissime,
Jesu patientissime,
Jesu obedientissime,
Jesu mitis et humilis corde,
Jesu amator castitatis,
Jesu amor noster,
Jesu Deus pacis,
Jesu auctor vitæ,
Jesu exemplar virtutum,

miserere nobis.

Jesu zelator animarum,
Jesu Deus noster,
Jesu refugium nostrum,
Jesu pater pauperum,
Jesu thesaurus Fidelium,
Jesu bone Pastor,
Jesu lux vera,
Jesu sapientia æterna,
Jesu bonitas infinita,
Jesu via et vita nostra,
Jesu gaudium Angelorum,
Jesu Rex Patriarcharum,
Jesu inspirator Prophetarum,
Jesu Magister Apostolorum,
Jesu Doctor Evangelistarum,
Jesu fortitudo Martyrum,
Jesu lumen Confessorum,
Jesu puritas Virginum,
Jesu gloria Sacerdotum,
Jesu corona Sanctorum omnium,

Miserere nobis.

Propitius esto, parce nobis, Jesu.
Propitius esto, exaudi nos, Jesu.
Ab omni peccato, libera nos, Jesu.
Ab irâ tuâ,
Ab insidiis Diaboli,
A spiritu fornicationis,
A morte perpetuâ,
A neglectu inspirationum tuarum,
Per mysterium sanctæ Incarnationis tuæctæ,
Per navitatem tuam,
Per infantiam tuam,

Libera nos, Jesu.

Per divinissiman vitam tuam,
Per labores tuos,
Per agoniam et passionem tuam,
Per crucem et derelictionem tuam,
Per languores tuos,
Per mortem et sepulturam tuam,
Per resurrectionem tuam,
Per ascencionem tuam,
Per gaudia tua,
Per gloriam tuam,

Libera nos, Jesu.

Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, parce nobis, Jesu.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, exaudi nos, Jesu.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, miserere nobis, Jesu.

OREMUS.

Domine Jesu Christe, qui dixisti : Petite et accipietis, quærite et invenietis, pulsate et aperietur vobis; quæsumus, da nobis petentibus divinissimi tui amoris affectum ; ut te toto corde, ore et opere diligamus, et à tuâ nunquam laude cessemus : Qui vivis et regnas, Deus, in secula seculorum. ℟ Amen.

---

*Igandetan erranen dire Yaincoaren eta Eliçaren Manamenduac.*

## YAINCOAREN MANAMENDUAC.

1. YAINCO bat adora çaçu,
Halaber maitha osoki.
2. Yuramenturic çuc ez duçu,
Ez cinic eguinen banoki.
3. Igandeac beguira çatçu,
Yauna ere cerbitça debotki.
4. Aita eta Ama ohora çatçu,
Bici çaitecen luceki.
5. Nehor obraz hilen ez duçu,
Ez borondatez gaichtoki.
6. Paillardiça eguinen ez duçu,
Obraz ez gogoz likhiski.
7. Bertcerena ebaxico ez duçu,
Ez atchikico inyustuki.
8. Lekhucotasunic ez duçu,
Ez hitz erranen falxuki.
9. Bertceren esposic ez duçu,
Desiratuco liçunki.
10. Guthicia içanen ez duçu,
Bertceren onaren gaizki.

## ELIÇAREN MANAMENDUAC.

1. MEÇA Saindua entçun-eçaçu,
Besta Igandetan debotki.
2. Eta Bestac beguira çatçu,
Manamenduzcoac sainduki.
3. Bekhatuac cofesa çatçu,
Urthean behin osoki.
4. Gorphutz Saindua errecebi çaçu,
Phazcoz bederen umilki.
5. Garthac, Bigiliac, barur çatçu,
Gariçuma ere osoki.
6. Ortciralean yanen ez duçu,
Ez larumbatean haragui.



# ARRAXECO OTHOITÇA.

AITAREN, ETA SEMEAREN, ETA IZPIRITU-SAINDUAREN ICENEAN. HALABIZ.

**Orhoit gaitecen Yaincoaren aitcinean garela, eta adora deçagun Adoracionezco Acta batez.**

*Adoracionezco Acta.*

YAINCO guciz botherexua eta eternala, Aita, Semea, eta Izpiritu-Saindua, çoina baitçare lekhu gucietan yiten nitçauçu ene adoracionen eta ohoren bihurtcerat, gaurco descanxuaren hartcerat yoan baino lehen.

Adoratcen çaitut, ô ene Yaincoa, maite çaitut, laudatcen eta benedicatcen çaitut. Çu çare Aita urricalpenez bethea; Yainco conxolatçalea, eguiazco dohain gucien ithurria. Eskerrac de-

raitçut, ahalaz umilki, eguin deraitatçun ongui guciez, eta bereciki egun huntacoez.

Bainan nola ihardexi dut, Yauna, çure ontasun içarigabecoari? Ala esker gaichtoz pagatu baitçaitut hambat bekhatutan eroriz, bethi ongui eguiten hari cinaitan demboran !

Yauna argui çaçu ene izpiritua, eçagut ditçadan ene bekhatuen nombrea eta handitasuna, bero çaçu ene bihotça çure amodioaren suaz, damu eguiazco bat içan deçan çu ofenxaturic.

*Hemen ikhusi behar da egun cer bekhatu eguin den gogoz, hitcez, obraz, edo eguin behar cena ez eguinez, nahiz Yaincoaren, nahiz Lagunaren, nahiz bere buruaren contra ; baratcen delaric particulazki maicenic eguiten diren bekhatuez orhoitcen.*

Aithortcen ditut, Yauna, çure aitcinean ene bekhatuac, orotaz barkhamendu escatcen deraulçut, Yesu-Chris-

toren merecimenduen berthutez. Hastiatcen ditut, ceren çure ofenxac diren, eta hitcemaiten derautçut, çure graciarekin batean, urrunduco niçala hementic aitcina, bekhatutic eta bekhatuaren ocasionetic, eta eguinen dudala orotaz penitentcia.

CONFITEOR Deo omnipotenti, beatæ Mariæ semper Virgini, beato Michaeli Archangelo, beato Joanni Baptistæ, sanctis Apostolis Petro et Paulo, omnibus Sanctis, et tibi, Pater, quia peccavi nimis cogitatione, verbo et opere; meâ culpâ, meâ culpâ, meâ maximâ culpâ. Ideò precor beatam Mariam semper Virginem, beatum Michaelem Archangelum, beatum Joannem Baptistam, sanctos Apostolos Petrum et Paulum, omnes Sanctos, et te, Pater, orare pro me ad Dominum Deum nostrum.

Misereatur nostrî omnipotens Deus, et, dimissis peccatis nostris, perducat nos ad vitam æternam. Amen.

Indulgentiam, absolutionem et re missionem peccatorum nostrorum tri buat nobis omnipotens et misericor Dominus. Amen.

PATER noster, qui es in cœlis, sanc tificetur nomen tuum; adveniat reg num tuum; fiat voluntas tua sicut in cœlo et in terrâ; panem nostrum quo tidianum da nobis hodiè, et dimitt nobis debita nostra, sicut et nos dimit timus debitoribus nostris; et ne nos in ducas in tentationem, sed libera nos malo. Amen.

AVE, Maria, gratiâ plena, Dominu tecum; benedicta tu in mulieribus, e benedictus fructus ventris tui, Jesus

Sancta Maria, Mater Dei, ora pro nobis peccatoribus, nunc et in hora mortis nostræ. Amen.

CREDO in Deum Patrem omnipoten tem, creatorem cœli et terræ; et i Jesum Christum, filium ejus unicum

Dominum nostrum; qui conceptus est de Spiritu Sancto, natus ex Mariâ Virgine; passus sub Pontio Pilato, crucifixus, mortuus et sepultus; descendit ad Inferos, tertiâ die resurrexit à mortuis; ascendit ad Cœlos, sedet ad dexteram Dei Patris omnipotentis; indè venturus est judicare vivos et mortuos.

Credo in Spiritum Sanctum, Sanctam Ecclesiam Catholicam, Sanctorum communionem, remissionem peccatorum, carnis resurrectionem, vitam æternam. Amen.

OTHOIZTEN çaitut, Yauna, çure benedicionea eta graciac ichur ditçatçun gure Aita-Sainduaren, gure Yaun Aphezpicuaren, gure aitcindarien gainerat, halaber ene ahaide, adiskide, exai, eta yeneralean ene othoitcetarat cerbait dretcho duketen presuna guçien gainerat. Guidâ gaitçatçu othoi guciac salbamenduco bidean.

Othoizten çaitut ere, Yauna, Purgatorietaco penetan diren arimentçat;

emoçute bere bekhatu gucien barkhamendua, eta sarrarazkitçu hambat lehiarekin igurikitcen duten egoitça dohaxuan. Escatcen derautçu Yesu-Christo gure Yaunaz, çoina bat baita çurekin eta Izpiritu-Sainduarekin, mende eta mende gucietaco bicitcean. Halabiz.

Biryina Saindua, Yaincoaren Ama, othoitz eguiçu enetçat, çuec Aingueru onac eta Saindu guciac, balia çazkitet; ene Aingueru beguirale Saindua, çauden atçarria ene inguruetan.

Yainco guciz botherexu eta urricalpenez betheac, Aita, Seme eta Izpiritu-Sainduac, digutcila gau ezti bat eta heriotce dohaxu bat. Halabiz.

*Dembora denean erran ditezke Biryina Sainduaren Lethaniac.*

## BIRYINA SAINDUAREN

### LETHANIAC.

KYRIE, eleison.
Christe, eleison.
Kyrie, eleison.

Christe, audi nos.
Christe, exaudi nos.
Pater de Cœlis, Deus, miserere nobis.
Fili, Redemptor mundi, Deus, miserere nobis.
Spiritus Sancte, Deus, miserere nobis.
Sancta Trinitas, unus Deus, miserere nobis.
Sancta Maria, ora pro nobis.
Sancta Dei Genitrix,
Sancta Virgo Virginum,
Mater Christi,
Mater divinæ gratiæ,
Mater purissima,
Mater castissima,
Mater inviolata,
Mater intemerata,
Mater amabilis,
Mater admirabilis,
Mater Creatoris,
Mater Salvatoris,
Virgo prudentissima,
Virgo veneranda,
Virgo prædicanda,
Virgo potens,
Virgo clemens,
Virgo fidelis,
Speculum justitiæ,
Sedes sapientiæ,
Causa nostræ lætitiæ,
Vas spirituale,
Vas honorabile,
Vas insigne devotionis,

Ora pro nobis.

Rosa mystica,
Turris Davidica,
Turris eburnea,
Domus aurea,
Fœderis arca,
Janua Cœli,
Stella matutina,
Salus infirmorum,
Refugium peccatorum,
Consolatrix afflictorum,
Auxilium Christianorum,
Regina Angelorum,
Regina Patriarcharum,
Regina Prophetarum,
Regina Apostolorum,
Regina Martyrum,
Regina Confessorum,
Regina Virginum,
Regina Cleri,

Ora pro nobis.

Regina Sanctorum omnium, ora pro nobis.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, parce nobis, Domine.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, exaudi nos, Domine.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, miserere nobis.

OREMUS.

**Defende, quæsumus, Domine, beatâ Mariâ semper Virgine intercedente, istam ab omni adversitate familiam,**

et toto corde tibi prostratam, ab hostium propitius tuere clementer insidiis. Per Christum Dominum nostrum. Amen.

---

*Igandetan erranen dire :*

FEDEZCO ACTA.

ENE Yaincoa, sinhesten ditut cinez eta ene bihotz guciaz, Eliça Catholico, Apostolico eta Erromanoac, sinhesten eta irakhasten dituen gauça guciac; ceren çuc, eguia bera çarenac, irakhaxi baiteraz-çotçu.

ESPERANTÇAZCO ACTA.

ENE Yaincoa, esperantça dut, sinheste fermu batekin, emanen derautaçula Yesu-Christoren merecimenduen berthutez, mundu huntan çure gracia, eta çure Manamenduei yarraikitcen banaiz bertcean çure gloria; ceren hitceman baituçu eta baitçare çure hitcetan osoki leyala.

## CARITATEZCO ACTA.

ENE Yaincoa, maite çaitut ene bihotz guciaz eta gauça gucien gainetic; ceren baitçare gucizcona eta osoki maithagarria: maite dut halaber ene Laguna ene burua beçala çure amoreagatic.



# ARRAXECO OTHOITÇA.

AITAREN, ETA SEMEAREN, ETA IZPIRITU-SAINDUAREN ICENEAN. HALABIZ.

Orhoit gaitecen Yaincoaren aitcinean garela, eta adora deçagun Adoracionezco Acta batez.

*Adoracionezco Acta.*

YAINCO guciz botherexua eta eternala, Aita, Semea, eta Izpiritu-Saindua, çoina baitçare lekhu gucietan yiten nitçauçu ene adoracionen eta ohoren bihurtcerat, gaurco descanxuaren hartcerat yoan baino lehen.

Adoratcen çaitut, ô ene Yaincoa, maite çaitut, laudatcen eta benedicatcen çaitut. Çu çare Aita urricalpenez bethea; Yainco conxolatçalea, eguiazco dohain gucien ithurria. Eskerrac de-

raitçut, ahalaz umilki, eguin deraitatçun ongui guciez, eta bereciki egun huntacoez.

Bainan nola ihardexi dut, Yauna, çure ontasun içarigabecoari? Ala esker gaichtoz pagatu baitçaitut hambat bekhatutan eroriz, bethi ongui eguiten hari cinaitan demboran!

Yauna argui çaçu ene izpiritua, eçagut ditçadan ene bekhatuen nombrea eta handitasuna, bero çaçu ene bihotça çure amodioaren suaz, damu eguiazco bat içan deçan çu ofenxaturic.

*Hemen ikhusi behar da egun cer bekhatu eguin den gogoz, hitcez, obraz, edo eguin behar cena ez eguinez, nahiz Yaincoaren, nahiz Lagunaren, nahiz bere buruaren contra; baratcen delaric particulazki maicenic eguiten diren bekhatuez orhoitcen.*

AITHORTCEN ditut, Yauna, çure aitcinean ene bekhatuac, orotaz barkhamendu escatcen derautçut, Yesu-Chris-

toren merecimenduen berthutez. Hastiatcen ditut, ceren çure ofenxac diren, eta hitcemaiten derautçut, çure graciarekin batean, urrunduco niçala hementic aitcina, bekhatutic eta bekhatuaren ocasionetic, eta eguinen dudala orotaz penitentcia.

CONFITEOR Deo omnipotenti, beatæ Mariæ semper Virgini, beato Michaeli Archangelo, beato Joanni Baptistæ, sanctis Apostolis Petro et Paulo, omnibus Sanctis, et tibi, Pater, quia peccavi nimis cogitatione, verbo et opere; meâ culpâ, meâ culpâ, meâ maximâ culpâ. Ideò precor beatam Mariam semper Virginem, beatum Michaelem Archangelum, beatum Joannem Baptistam, sanctos Apostolos Petrum et Paulum, omnes Sanctos, et te, Pater, orare pro me ad Dominum Deum nostrum.

Misereatur nostrî omnipotens Deus, et, dimissis peccatis nostris, perducat nos ad vitam æternam. Amen.

Indulgentiam, absolutionem et remissionem peccatorum nostrorum tribuat nobis omnipotens et misericors Dominus. Amen.

Pater noster, qui es in cœlis, sanctificetur nomen tuum; adveniat regnum tuum; fiat voluntas tua sicut in cœlo et in terrâ; panem nostrum quotidianum da nobis hodiè, et dimitte nobis debita nostra, sicut et nos dimittimus debitoribus nostris; et ne nos inducas in tentationem, sed libera nos à malo. Amen.

Ave, Maria, gratiâ plena, Dominus tecum; benedicta tu in mulieribus, et benedictus fructus ventris tui, Jesus.
Sancta Maria, Mater Dei, ora pro nobis peccatoribus, nunc et in horâ mortis nostræ. Amen.

Credo in Deum Patrem omnipotentem, creatorem cœli et terræ; et in Jesum Christum, filium ejus unicum,

Dominum nostrum; qui conceptus est de Spiritu Sancto, natus ex Mariâ Virgine; passus sub Pontio Pilato, crucifixus, mortuus et sepultus; descendit ad Inferos, tertiâ die resurrexit à mortuis; ascendit ad Cœlos, sedet ad dexteram Dei Patris omnipotentis; indè venturus est judicare vivos et mortuos.

Credo in Spiritum Sanctum, Sanctam Ecclesiam Catholicam, Sanctorum communionem, remissionem peccatorum, carnis resurrectionem, vitam æternam. Amen.

OTHOIZTEN çaitut, Yauna, çure benedicionea eta graciac ichur ditçatçun gure Aita-Sainduaren, gure Yaun Aphezpicuaren, gure aitcindarien gainerat, halaber ene ahaide, adiskide, exai, eta yeneralean ene othoitcetarat cerbait dretcho duketen presuna gucien gainerat. Guidá gaitçatçu othoi guciac salbamenduco bidean.

Othoizten çaitut ere, Yauna, Purgatorietaco penetan diren arimentçat;

emoçute bere bekhatu gucien barkhamendua, eta sarrarazkitçu hambat lehiarekin igurikitcen duten egoitça dohaxuan. Escatcen derautçu Yesu-Christo gure Yaunaz, çoina bat baita çurekin eta Izpiritu-Sainduarekin, mende eta mende gucietaco bicitcean. Halabiz.

Biryina Saindua, Yaincoaren Ama, othoitz eguiçu enetçat, çuec Aingueru onac eta Saindu guciac, balia çazkitet; ene Aingueru beguirale Saindua, çauden atçarria ene inguruetan.

Yainco guciz botherexu eta urricalpenez betheac, Aita, Seme eta Izpiritu-Sainduac, digutcila gau ezti bat eta heriotce dohaxu bat. Halabiz.

*Dembora denean erran ditezke Biryina Sainduaren Lethaniaç.*

## BIRYINA SAINDUAREN

### LETHANIAC.

KYRIE', eleison.
Christe, eleison.
Kyrie, eleison.

Christe, audi nos.
Christe, exaudi nos.
Pater de Cœlis, Deus, miserere nobis.
Fili, Redemptor mundi, Deus, miserere nobis.
Spiritus Sancte, Deus, miserere nobis.
Sancta Trinitas, unus Deus, miserere nobis.
Sancta Maria, ora pro nobis.
Sancta Dei Genitrix,
Sancta Virgo Virginum,
Mater Christi,
Mater divinæ gratiæ,
Mater purissima,
Mater castissima,
Mater inviolata,
Mater intemerata,
Mater amabilis,
Mater admirabilis,
Mater Creatoris,
Mater Salvatoris,
Virgo prudentissima,
Virgo veneranda,
Virgo prædicanda,
Virgo potens,
Virgo clemens,
Virgo fidelis,
Speculum justitiæ,
Sedes sapientiæ,
Causa nostræ lætitiæ,
Vas spirituale,
Vas honorabile,
Vas insigne devotionis,

Ora pro nobis.

Rosa mystica,
Turris Davidica,
Turris eburnea,
Domus aurea,
Fœderis arca,
Janua Cœli,
Stella matutina,
Salus infirmorum,
Refugium peccatorum,
Consolatrix afflictorum,
Auxilium Christianorum,
Regina Angelorum,
Regina Patriarcharum,
Regina Prophetarum,
Regina Apostolorum,
Regina Martyrum,
Regina Confessorum,
Regina Virginum,
Regina Cleri,

Ora pro nobis.

Regina Sanctorum omnium, ora pro nobis.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, parce nobis, Domine.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, exaudi nos, Domine.
Agnus Dei, qui tollis peccata mundi, miserere nobis.

OREMUS.

Defende, quæsumus, Domine, beatâ Mariâ semper Virgine intercedente, istam ab omni adversitate familiam,

et toto corde tibi prostratam, ab hostium propitius tuere clementer insidiis. Per Christum Dominum nostrum. Amen.

---

*Igandetan erranen dire :*

FEDEZCO ACTA.

ENE Yaincoa, sinhesten ditut cinez eta ene bihotz guciaz, Eliça Catholico, Apostolico eta Erromanoac, sinhesten eta irakhasten dituen gauça guciac; ceren çuc, eguia bera çarenac, irakhaxi baiteraz-çotçu.

ESPERANTÇAZCO ACTA.

ENE Yaincoa, esperantça dut, sinheste fermu batekin, emanen derautaçula Yesu-Christoren merecimenduen berthutez, mundu huntan çure gracia, eta çure Manamenduei yarraikitcen banaiz bertcean çure gloria; ceren hitceman baituçu eta baitçare çure hitcetan osoki leyala.

## CARITATEZCO ACTA.

ENE Yaincoa, maite çaitut ene bihoi
guciaz eta gauça gucien gainetic ; ce
ren baitçare gucizçona eta osoki ma
thagarria : maite dut halaber ene La
guna ene burua beçala çure amorea
gatic.



# NOELA.

ATÇAR gaiten, atçar lotaric.
Gau huntan da Yesus sortcen ;
Amodioac garhaituric,
Gure-gatic da ethortcen. *(Berriz.)*

Gu cerurat nahiz altchatu,
Yesus yausten da lurrerat ;
Heldu da gu nahiz salbatu,
Gorphutz hilcor bat hartcerat.
Atçar, etc.

Ala haren laudorioac
Behar baitugu cantatu !
Ala gure bozcarioac
Behar baitu seinalatu !
Atçar, etc.

Bekhatua, monstro tristea,
Hoa hire lece beltcerat;
Ethorri duc Yesus maitea,
Hire obren urratcerat.
Atçar, etc.

Cerc gaitu bada guibelatcen ?
Hel gaiten, hel Yesus gana;
Bekhatoreen gatic da sortcen,
Saindutasun bera dena.
Alçar, etc.

Ikhus-garri mirestecoa !
Oi ! hau da humiltasuna,
Ceru beraz goragocoa .
Manyateran da emana.
Alçar, etc.

Erreguen Erregue delaric,
Ez du nahi distiratu,
Ez du nahi palacioric ;
Heya tchar bat du hautatu.
Alçar, etc.

Holçaz ere da penatua
Sasoinen manatçailea ;
Guciez da gabetua
Gucien creatçailea.
Alçar, etc.

Bi bestia ditu laguntçat,
Horra Yesusen çorthea :

Lasto guti bat etçantçatçat !
Oi ! hau gauçaren dorphea.
Atçar, etc.

Exemplu miragarrienaz
Yesusec gaitu hertchatcen,
Amodioric kharxuenaz
Bere-gana gombidatcen.
Atçar, etc.

Amodioac du sustatcen ;
Haren bihotça guretçat :
Has gaiten, has haren maitatcen ;
Declara gaiten harentçat.
Atçar, etc. (*Hastean beçala.*)



# EXERCICIO
# IZPIRITUALA.

*Cein on eta probetchos den Yaincoaren presentciaz, eta Yaincoaz maiz orhoitcea.*

SAN Ambrosioc dio moyan on eta soberano bat dela Yaincoaren presentciaz, eta Yaincoaz maiz orhoitcea, bekhatuari ihes eguiteco. San Thomasec dio nola guinduken ausartciaric aski deliberatuki Yaincoaren ofenxatceco bere presentcian, baldin penxatcen baguindu beguira dagocula.

Eta eguiazki hala da, baldin Erreguen presentciac inspiratcen badarocu errespetu handi bat hekien presunentçat, cer ez lerauçu eguin behar Yaincoaren presentciac, baldin eguiazki fedeaz ongui hartuac, eta borthistuac baguine?

San Basilioc dio oraino, Yaincoaren

presentcia moyen exelent bat dela tentacionean gure defendatceco. San Augustinec erraiten çuen: Orhoit çaite Yaincoa beguira dagotçula capitain bat bere soldaduei guduan hari direnean dagoten beçala ; escu batean bere graciac dituela çure laguntceco eta socorritceco, noiz eta ere bere fagoreac galdeguinen baitiozcatçu, eta bertce escuan khoroac dituela çure errecompentçatceco haren exayen gainean eramaiten dituçun bitorioez.

Ez da eguiazki deus ere curaya guehiago emaiten duenic, eta nihor guehiago borthizten eta animatcen duenic, presentcia haren orhoitça pena baino.

Hala erraiten cioten Yesu-Christoc bere Apostoluei, cerurat igan baino lehen : Orhoit çaitezte çuekin naicela bethi munduaren fineraino. Hitz horiec halaco maneraz animaturic eta borthizturic, San Antonioc cioen bere desertuan : Yaincoa enekin denaz gueroz, ez naiz deusen ere beldur mundu huntan.

Saindu horrec berac dio oraino debruaren eta bicioen garhaitceco moyenic puchantena dela Yaincoaren presentcia, eta barneco placera eta bozcarioa, eta parabisua causi daitekela lekhu gucietan, baldin guiçonaren bihotça Yaincoaren bihotcean bada.

Yaincoaren presentciaren orhoitçapen horrec miraculuzki handitcen du gure fedea, borthizten du gure esperantça, eta sustengatcen amodioz gure bihotça: eta halaber gure amodioa Yaincoarentçat emendatceco, moyen on eta soberano bat da maiz Yaincoari beguiratcea; ceren guc hari beguiratcen diogun arabera, harc ere guri beguiratcen bai darocu, eta haren beguiratce heyec ekhartcen bai darocute gure bihotcetarat hambat Yaincoaren amodioaren su inhar, ceinec handitcen bai dute guc Yaincoarentçat dugun amodioaren sua.

Finean deusec ere ez darocu hobekiago erraiten edo marcatcen orhoitçapen horri, egun batez Abrahami

Yaincoac berac erran ciotçan hitcec baino : Ibil hadi ene presentcian, eta perfet içanen haiz.

Ikhusi duçu, Guiristinoa, nola dioten saindu horiec, eta bai Yaincoac berac ere, cein probetchu handitacoa den Yaincoaren presentcia, eta Yaincoaz maiz orhoitcea. Aplica çakizco çu ere artha handi batekin debocione saindu horri ; eta ez badakiçu nola eguin behar duçun, irakhasico darotçute San Augustinec, San Bernadec, Santa Theresac, eta bertce sainduec. Seguidaco plametan, causituco ditutçu saindu hec munduan cirenean cituzten penxamendu sainduac, eta Yaincoa ganaco maizco bihotz altchatceac.

Penxamendu sainduac barneco suspira batçu dire, eta Yaincoa ganatco bihotçaren gambiantça bat, ceinac eguin ahal bai ditezke memeent batez ; errechac dire, eta lekhu gucietan eguin ditezkenac, nahiz yatean, nahiz bidean çohacela, compainietan eta lekhu gucietan, ceren mintçatu gabe eguin ahal

bai ditezke, gogoz eta Yaincoaren ganalco bihotz altchatce batez.

Eman çakizco cin-cinez, Guiristinoa, Yaincoaz maiz orhoitceco debocione saindu horri, hoin errecha eta probetchosa denaz gueroz.



# PENXAMENDU
## SAINDUAC.

*Contricioneaz.*

1. ENE Yaincoa, huna ni non naicen lurraz ere sofritua içaitea merecitcen ez dudana.

2. Helas! certaco nic çu utci çaitut, biciaren ithurria, munduco putçu liçunetaco ur usainduetaric edateco?

3. Ceruaren contra bekhatu eguin dut, ene Aita maitea, eta ez dut mereci çure umearen icena; bihur araz naçaçu nere eguimbidetarat.

4. Orhoit çaite, Yauna, eguin ditutçun misericordiez; eta ahantz bekizkitçu ene gaztetasuneco bekhatuac, eta ene ignorantcia guciac.

*Amodioaz.*

1. BADAKIÇU, Yauna, maite çaitudala.

2. Maite çaitut, Yauna, bainan guehiago maitatu nahi cintuzket.

3. Caritate eternal batez maitatu nauçu, eta urricalduric çure-ganat, tiratu nauçu.

4. Bethi erretcen hari çaren sua, eta behinere iraungnitcen etçarena, susta naçaçu çuretçat, ene baithan deus ere causi ez dadin çu maitatcen ez çaituenic.

5. Eguidaçu gracia, Yauna, maita çaitçadan, eta goarda detçadan çure manamenduac.

6. Nahiago dut hil çu maitatcen çaitudalaric, ecen ez bici çu ofenxatcen çaitudala.

*Eçagutçaz.*

1. NONDIC heldu othe da, Yauna, nic çure baithan hambat gracia causitcea ?

2. O ! çoin exelenta den çure beldurtasunean bici diren arimentçat erresalbatu dituçun eztitasunen bilduma !

3. Yauna, çaude bethi enekin, ilhumbetarat eror ez nadin.

*Yaincozco Desirac.*

1. Ala baita lurra mespreçatcecoa, ceruari beguiratcen diodanean!

2. Gauça guciac gogotic galdu nahi ditut, ene Yaincoa, çure irabazteco.

3. Ala baita loria handia, Yauna, çure cerbitçatcea!

4. Naicen choilki çurea, çu ere enea içan çaitecentçat!

5. Gauça guciac garratz causi detçadan, ene Yaincoa, eta deus ere ez eztiric çu baicic.

Legue çaharrean usantça cen Yaincoari ofrendatceco arbolen lehembicico fruituac, eta arimalen lehembicico umeac, eçagutceco Yaincoa dela gure lehembicico printcipioa eta gauça gucien fina. Legue berrian, ceinetan Yaincoa adoratcen baitugu izpirituz, eguiaz conxecratu behar diotçagu gure egun orozco lehembicico penxamenduac eta lehembicico accioneac; eçagutceco gure biciac haren ganic ditugunaz gue-

roz, ez ditugula haren cerbitçuan baicen emplegatu behar. San Climakec dio, Guiristinoac iratçarri direnecotz, debrua bethi han causitcen dela, Aingueruari disputatceco hekien bihotcetaco primeciac. Hortaracotz çure izpiritua nihorat ere hedatu gabe, atçartcearekin batean altcha çaçu çure bihotça Yaincoaren-ganat, cembait penxamendu sainduz, seguidaco horiez, edo bertce cembeit holacoz.

ENE Yaincoa, ene Yaincoa, çure ganat atçartcen naiz arguiaren phondutic.

Ene bihotça Yaincoarena da, eta Yaincoarentçat da.

Ene Yaincoa, eguidaçu misericordia, çu çare ene gucia.

Ene Yaincoa, ez dut nahi deusic çu baicic.

Yauna, cer placer duçu gaur eguin deçadan çuretçat?

Ene Yaincoa, beguira naçaçu gaur bekhaturic eguitetic.

Ala baita ezti, ene Yaincoa, çure maitatcea, eta çu fidelki cerbitçatcea!

*Ohetic ilkhitcean, erraçu:*

Yaikitcen naiz, ene Yauna, çure cerbitçu sainduan, egunaren emplegatcera, çure graciarekin batean.

*Ur benedicatuaz ceinatcen çarela, erraçu:*

Ene Yaincoa, garbi çaçu ene arima çure graciaren uraz, eta eguinen da elhura baino churiago.

Oracioneco demboraric hoberena gaba eta goiça dire. Profeta saindua arguiaren phonduric adreçatcen citçayon Yaincoari, eta guiristinoac ere hartarat exortatu ditu, erraiten diotela: *Yaiki hadi argui urratcean, eta çabalçac hire bihotça, hala nola hura, Yaincoaren presentcian.* Goicean noiz eta ere yausten baita ihintça loreen gainerat, orduan Izpiritu Saindua yausten da oracionean daudecen guiçonen bihotcetarat; orduan hekien gainerat ichurtcen du uri ezti hura, eta gracien

ihintça; oracionea arimaren neurritura da. Dabitec dio hura dela haren oguia, eta yaterat ahanzten citçayonean, bihotça idortua causitcen çuela. Oheticlekhora erdi beztituric, ahalic lasterrena, eguiçu çure goiceco othoitça: yar çaite Yaincoaren presentcian, eta conxidera çaçu Yaincoa argui handiz ingurutua, ceinen erdian eguiten baitu bere egoitça, Yondoni Pauloc dioen arabera; eta Mayestate terrible haren aitcinean, ceinac Ainguerauac ikharatcen baititu, belhaunico yarriric, adora çaçu erraten duçula.

## *Adoracionezco Acta.*

ADORATCEN çaitut, Yauna, çure presentcian gucia humiliatua, çure handitasunac inspiratcen darozkidan errespetuzco sendimenduz betheric. Eçagutcen dut çure içaitearen soberanotasuna, eta creatura guciez disposatceco duçun podorea, ceren çu baitçare hekien printcipioa eta fina. Cerua eta lurra çureac dire; hetan causitcen di-

tut gauça guciac, çure escuco obrac dire. O ene Yaincoa! çu çare bakharra horren obra handiac eguin ahal detçakena; ez da bertce Yaincoaric çu baicen, ceina bici bailçare eta manatcen baituçu mende gucietan.

### *Eskerren bihurtceco Acta.*

CER esker bihurtuco darotçut, ene Yainco Yauna, çure ganic errecibitu ditudan onthasun guciez? eta cer eçagutçazco sendimendu causi ahal diteke çure fagore handiei ihardesteco gai denic? Benedicatuco çaitut, ene Yaincoa, bici naicen egun gucietan, hala nola eguiten baitçaitut oren hunetan; cantatuco ditut çure misericordiac eternitate gucian; yuntatuco dut ene boça çure laudatcen munduan hari diren creatura gucienekin batean, egun batez ceruan çure laudatcen finic gabe hari diren dohaxuekin yuntatceco çoriona dukedan artean. Halabiz.

*Contricionezco Acta.*

ENE Yaincoa, barkhamendu eske nagotçu humilki ene bekhatu guciez, damu dolore eta urriki handirekin, ceren hain ona eta infinituki maitagarria çarelaric ofenxatu çaitudan. Hartcen dut deliberacione fermu bat ez guehiago bekhaturic eguiteco, çure graciarekin batean; bai, eta halaber hartcen dut borondate cofesione òn baten eguiteco, eta emanen çaitan penitentciaren complitceco. Halabiz.

*Ofrendazco Acta.*

YUSTU da, Yauna, çuretçat bici nadin çu enetçat hil çarenaz gueroz, çure gloriarentçat trabaila nadin, çu bethi ene salbamenduarentçat eguin çarenaz gueroz. Errecibi çaçu, othoi, Yauna, egun nic eguiten darotçudan sacrificioa ene sentimenduez, ene accionez, eta ene içaite guciaz; chede borthitz batekin ez deus ere eguiteco çure

manamenduen eta çure placeraren a rabera baicen. Halabiz.

### *Galdeen eguiteco Acta.*

HAIN flacoa naiz, Yauna, non ecin aguin bai deçaket berthutean fermutasunic, çure sustengutic, eta çure graciaren indarretic ethorrico çaitanic baicic: haren galde nagotçu beraz, ene Yaincoa, çure Seme Yesusec enetçat ichuri duen odol preçiatuaren merecimenduez, Biryina Sainduaren a-rartecotasunaz, eta ene Aingueru Beguirailearenaz, ene Patroin dohaxuarenaz, eta çure Saindu eta Sainda gucienez. Heda çaitçu çure escu puchantac ene gainerat, ni ene exayetaric beguiratceco eta peril gaichto gucietaric goardatceco. Çato, Yauna, ene accione gucien benedicatcerat, eta niri ceruco bide seguraren iracasterat. Halabiz.

Seguida hunetan, eguiçu guero çaitçun debocionea, dela meditacionea,

edo *Kyrie eleisonac*, edo bertce cerbeit demborac, edo borondateac galdeguiten derautçutena. Goiceco chedea asti guti duten presunentçat, belhaunicatu eta ceinatcen çarela erraçu :

TRINITATE Saindua, Aita, Semea, eta Izpiritu Saindua, sinhesten dut hirur presunetan eguiazco Yainco bat çarela.

Adoratcen eta maitatcen çaitut ene Yaincoa, nere bihotz guciaz, eta çure baithan emaiten ditut ene esperantça eta fidantcia guciac.

Eskerrac bihurtcen darozkitçut egundeino eguin darozkidatçun ontasun, gracia eta fagore guciez, eta bereciki gaur huntacoez.

Barkhamendu eske nagotçu, ene Yaincoa, egundeino eguin ditudan bekhatu guciez, damu, dolore eta urriki hainitcekin, ceren guciz ona çarelaric ofenxatu çaitudan. Hartcen dut deliberacione fermu bat ez guebiago bekhaturic eguiteco, çure graciarekin

batean ; eta halaber hartcen du: borondate cofesione on baten egulteco, eta emanen çaitan penitentciaren complitceco.

Ene Yaincoa, ofrendatcen darozkitçut egungo eguneco ene penxamendu, hitz eta obra guciac : aintcin çaitçu çure graciez eta çure benediccionez, ez daitecentçat içan guciac çure loriaren ohoreco, eta ene arimaren salbamenduco baicen.

Biryina Saindua, Yaincoaren Ama, gomendatcen naiçaitçu, othoi, çure proteccione sainduaren azpian har naçaçu. Ene Aingueru Beguirailea, eta çu, ene Patroina, parabisuco Saindu eta Sainda guciec, nitaz othoitz eguiçue.

*Beztitceean eguiteco Othoitça.*

YAUNA, barraguin çaçu ene arima gracia eta berthute suerte guciez, bethi eder causi deçaçuntçat, eta beguira naçaçu herrauxetarat bihurtu behar duen gorphutz huni, çure begui mo-

destac ofenxatuco dituen banitateric eta urguilkeriaric emaitetic.

*Trabailatceracoan eguiteco Othoitça.*

**ENE Nausi maitea, dembora da trabailatceco; othoi, ez, naçaçula bakharric utz nere penen artean, ez nau penac ez trabailuac icitcen çure-ganic apartatcen ez nauyeno, ene beguiac eta ene penxamenduac çure presentcian eta çure bihotcean amarratuac atchikitcen ditutçuno.**

Etchetic ilkhitcean cçina çaite, bai eta çure accione gucien hastean ere. Caselu deitcen cena hainitz içatu cen erreportchatua bere Ainguеru Beguiraileaz, ceren etcen ceinatu etchetic ilkhitcean. Ceinatcea guirichtinoen usantça çahar bat da eta probetchosa.

Lehembicicoric, Gurutcearen seinale horrec casatcen ditu debruac cereu aborritcen baitute Gurutcea, orhoitcen direlaric Gurutceaz bentçutuac içatu direla.

*Etchetic ilkhitcean eguiteco Othoitça.*

ENE Yaincoa, nola mundua ene salbamenduaren exayez inguratua baita, gaitz da peril handi horien artean espaca nadin ariman edo gorphutcean çaurthu gabe, baldin çutaz lagundua ez banaiz. O guidari fidela eta segura! guida naçaçu, eta idec çaitçu ene beguiac, çure manamenduen bidean ibil nadintçat, nihorat errebelatu gabe.

Eliçan sartcen çarenean, athetic has çaite fedearen seinaleen emaiten, custodia den aldarerat beguiratcen duçula, errespetuzco ereberentcia modest bat eguiten duçularic. Yar lekhuratcen çarenean, eguiçu gauça bera, belhaunicatu eta burua beheititcen duçula, erraçu çure bekhatuen dolore handi batekin:

Ene Yaincoa, aurthikitcen naiz Madalena beçala, çure misericordiaren oinetarat, nore bekhatuez dudan damu, dolore eta urriki handienarekin, deliberatua lehenago hiltcerat bihotz osoz, ecen ez çure ofenxatcerat: inda-

çu çure benediccione saindua, eta seculan çu ez ofenxatceco gracia.

*Fedezco Acta.*

SINHESTEN dut, ene Yaincoa, çure Mayestate infinitua hemen dela present aldareco Sacramendu Sainduan, hiru presunetan eguiazco Yaincoa bere handitasun guciarekin, Serafinec ceruan ikhusten çaituzten, maitatcen eta adoratcen çaituzten estatu berean. Sinhesten dut sartcen çarela ene içatearen sustantcia gucian, eta çu guehiago çarela ene baithan, ecen ez neroni. Ez çaitut ikhusten eta ez sentitcen, ceren ez baita yustu aguer çakizcoten ene izpirituco begui flacoei; bainan sinhesten dut ikhusten ditudan gauça guciac baino segurkiago: prest naiz, eguia hunen sustenguan, ene biciaren emaiteco.

*Adoracionezco Acta.*

CER çare çu, ene Yaincoa, eta cer naiz ni! Handitasun adoragarria, cei-

naren aitcinean creatura ditezken guciac eta mundu gucia ez baita deus, çu ceinac ceruco izpirituei aguertcen çaiztela, bethetcen baiditutçu çure loriaz, çure beguiratce choilaz. Helas! cer naiz ni çure presentcian, creatura bat gucia corrupcionez bethea baicen? Hala ere nahi duçu aguer nadin. Huna non naicen beraz, Yauna, humiltasunezco eta adoracionezco izpirituarekin: bainan nola ez bainaiz nere baithan deus ere, eta indigne bai naiz çure adoratceco, yuntatcen naiz ere bihotz guciaz Biryina Sainduarekin, eta ceruco dohaxu guciekin, heyekin batean çuri ene adoracione eta errespetu humilen bihurtceco.



# MEÇA SAINDUAREN

## ENTÇUTECO

# DEBOCIONEA.

GUIRICHTINO guciec behar dute içan artha handi bat egun guciez Meça Sainduaren entçuteco; egun batez choilki hux eguitea, uste duçun baino guehiago galtcea da. Dembora harrec ez ditu çure eguitecoac guibelatuco, bainan bai abantçatuco. Aldareco sacrificioa denaz gueroz Guruteeco sacrificioaren imachina, eta nola Yesu-Christoc ez baitu ordenatu bere pasionearen orhoitçapena guiçonen artean conxerbatceco baicic. Hortic clarki agueri da, ecin nihor hobeki ocupa ditekela Meça Sainduaren entçutean, eta ecin Salbatçaileari guehiago agradatceu çayon debocioneric eguin ahal deçakela, ez eta ere haren intentcionei guehiago conformatcen çayoenic, haren heriotcearen conxideracionea bai-

no. Meça da lehembicico othoitça, eta othoitz gucien artean den hoberena. Penitent gucien garrastasunec. Martyr guciec sofritu dituzten tormenta eta suplicio guciec, ecin gure bekhatuen çorric chumeena paga deçakete, Gurutceco sacrificioa gabe, ceinaren merecimenduac aplicatceu baitçaizkigu Meçaco sacrificioaz. Entçun behar da beraz Meça, ordenarioan bertce othoitcetan içaiten den baino ereberentcia eta debocione guehiagorekin. Apheçac hasten du Meça bere bekhatuen cofesionetic, eta çuc ere ceinatu eta erraçu *Confiteor* escuaraz edo latinez, *Arraxeco Othoitcean* beçala plam. 22.

Eta guero Meçaco debocione hori eguiçu atentcione handirekin, cer erraiten duçun ungui conxideratceu duçula, eta hitz hunkigarri horietan tricatcen çarela, bethi aintcina yoan gabe.

Ebanyelioraino coan conxidera çaçu Yesu-Christo Olibetaco baratcean ahuspez etçana, bere Aitari othoitcean dagocola haren heriotcea içan dadin çure bekhatuen barkhamendutan; odolez icert arteraineco penetan den arren, besarcatcen da calitça guiçonen

salbamenduarentçat. Conxideracione hórietan sartcen çarela, atentcione eta debocione handi batekin, erraçu :

YESUS maitagarria, enetçat duçun amodioa-gatic çure bihotceco bakea, çure pasionearen bichtan, trublatcerat utci duçuna, eman dietçadatçu accione hartaz merecitu ditutçun graciac, ene pasioneen gainean nausi nadintçat eta çure borondatearen eguitea bilha deçadantçat. Çure arima dohaxua afliitu da ene bekhatuen-gatic; indaçu compunccionearen eta eguiazco penitentciaren izpiritua, ene bicitceco egun gucietan ene bekhatuen gainean nigar eguin deçadantçat, eta hauc ene nigarren urez deseguin deçadantçat. Çuc Olibetaco baratcean sofritu ditutçun tristeciec eta desgustuec, othoi, causa beçate ene baithan desgustu eta higuintça handi bat munduco placer banoentçat, eta çutaz campoan, ez beiteçat, causi tristeciaric eta unhaguneric baicen. Aplica dietçakidatçu çu-

re baratceco hagoniaco icialduraren eta odolezco icerdiaren merecimenduac, çure loriacotz eta ene arimaren exayen contra naicen flakecian eneborthixteco.

Ebanyelioan conxidera çaçu Yesu-Christoren preso hartcea, Yudasen traidorekeria; segui çaçu Yesu-Christo bere pausu gucietan, conxideratcen duçula bereez abandonatua, bere exayen errabiamenduaren meyoriarat eroria, mespreçatua, cehatua, arrantcez khoroatua, eta heriotcerat condenatua.

*Othoitça.*

Ez daroçute, Yauna, Yuduec deus ere sofri araci, non ez naicen gucietan hobendun içan, trahitu çaitut, Yudasec beçala, cembeit intresen-gatic; abandonatu çaitut, çure dicipuluec beçala, libertinen perxecucioneari espacatcea gatic, eta munduaren gogoraco içatea-gatic. Ene ambicioneac, ene banitateac eta ene pasione nahasiec guehiago sofri araci darotçute çure bur-

reuec baino; bainan, Yauna, çure burreuei elçayote urrikitu, bainan bai niri, nere bihotz guciaz : baldin bere bekhatuez nigar eguin balute, prest cinen hekiei bere barkhamenduaren emaiteco, Yaundoni Petriri eman cinioen beçala, bere falta eçagutu çuenean, barkha dietçakidatçu beraz, ene Yainçoa, ene faltac, ceren eçagutcen eta aithortcen baititut, ez çaitecela hetaz guehiago orhoit, eta ez dut hekientçat guehiago amarraric nahi içan; deseguin dietçakidatçu çure çaurietaric ichurtcen den odolaz, eguiçu harrec ene nigarren escasa compli deçan, eta halaco maneraz garbi eta purifica naçan, non çure beguiac contenta ahal baitetçazket.

Prefaciotic eta sagarrainocoan, conxidera çaçu Yesu-Christo gurutceficatcera dohala bere gurutceaz cargatua, eta oraino guehiago çure bekhatuez.

YAUNA, ceinac çure gurutcea ekharri baituçu, eta erran baituçu, seguitu na-

hi çaituenac berea ekharri behar duea, eguidaçu gracia ekhar detçadan çuc cargatu nahi nauçun gurutce guciac, çuc çurea ekharri duçun pacientcia berarekin. Çure gurutcea, çure uztarria da, eta erran duçu: norere haren azpian yarrico baita eta haina ez da nekhatua içanen. Çure hitçaren eguian errepausatcen naiz, eta igurikico ditut çuc ethorkiçunean egorrico darozkidatçun gurutce guciac, calteac, aflicciones, eritasunac, eta gaineracoac, çure borondate sainduari sumetitceco erresinacione oso batekin.

*Sacramendu Saindua altchatcean, erraçu :*

ENE Salbatçaile maitea, erran duçu çure aho sacratuaz : Hau da ene gorphutça. Norc dudatu behar du beraz çuc dioçun eguiaz ? nic ez, ene Yaincoa, ez dut dudatcen ; bainan sinhesten dut, ikhusten ditudan gauça guciac baino segurkiago, Sacramendu Saindu horretan çarela, Yainco eta guiçona

ceruan çaren estatu berean. Prest naiz eguia hunen sustenguan nere biciaren emaiteco: adoratcen çaitut humilki ceruco corte guciac bihurtcen daroz-kitçun adoracionekin yuntatcen nai-cela.

Conxidera çaçu Yesu-Christo gurutcerat altchatua, arantcez koroatua, itcez oinac eta escuac cilhatuac, çauriz estalia, eta gucia odolstatua, bere Aitari gorphutçaz eta bere biciaz sacrificioa eguiten dioela; ez choilki orducotz, bainan bai oraino Apheçac Meça erraiten duten aldi gucietacotz. Yunta çaite Salbatçailearekin sacrificio handi horren ofrendatceco. Lau chedetaco ordenatua da sacrificio saindu hori, seguidaco oracione hautan causituco duçun beçala, Meçan particularki gomendatu behar diren gaineraco gaucekin batean.

## *Othoitça.*

FINEAN, Yauna, horra non den çure Eliçaco sacrificio eternala, ceinac mes-preça araci baitarozkitçu Yuduen ho-locostac; horra non den munduaren

hastetic imolaturicaco bildoxa, eta nacione guciec çure icenari ofrendatcen dioten oblacione phuru hura. Sofri çaçu. Yauna, çure Semearekin izpirituz eta intentcionez yuntaturic, ni ere ausarta nadin çuri haren gorphutçaren eta odolaren ofrendatcera, çuc gucien gainean duçun podorearen eçagutceco, çure ganic errecibitcen ditugun ontasunez çure eskerren bihurtceco, ene bekhatuen barkhamenduaren ardiesteco, çuc behar ditudala dakizkitçun gaucen çure ganic ardiesteco. Halaber gomendatcen darozkitçut, Yauna, Eliça catolico gucia, gure Aita Saindua ceina baita buruçaguia, gure Aphezpicua, Erretora eta arimen Artçain guciac, gure Erregue eta haren familia gucia, Printce guirichtino guciac, eta çure baithan sinhestea duten populu guciac. Orhoit çaite halaber, Yauna, ene ahaideez, ene adichkideez, eta ene ungui eguilez, eguin dioçoçute gracia, Yauna, hetaric oraino munduan direnei bere egunac çure

**beldurtasun sainduan, trankillitate eta sosegu handi batean, pasatceco. Gomendatcen darozkitçut halaber, Yauna, purgatorietaco defuntu gaichoac; emoçute lekhu fresco bat, arguizco bat, bakezco bat. Bereciki gomendatcen darozkitçut ene ahaideac, ene adichkideac eta orhoitçapen eguileric ez dutenac. Yauna ez detçatçula ahantz çure exayac eta eneac, duçun pietate infidelez, hereticoez, eta bekhatoros gaichoez. Çure benediccionez bethe çaitçu ni persecutatcen nautenac, eta barkha dietçadatçu ene bekhatuac, hala nola barkhatcen baitiotçatet niri eguiten darozkidaten gaizkiac.**

Erraçu guero bortz *Pater*, bortz *Ave Maria*, eta bortz *Gloria*, Yesu-Christoren bortz çaurien orhoitçapenetan.

Apheçac ostia hausten duenean, eguiçu comunione izpirituala, ceina baitago comunionesacramentalaren eguiteco desirean, çure indignitatearen eçagutçan, Apheçarekin partalier içaitea galdeicean: eta horri yun-

tatuac diren gracien comunicacionea desiratcean.

*Othoitça.*

ENE Yaincoa, desiratcen nuke çure errecibitcea, çure Mayestate dibinoari çor çayon amodio, erreberentcia, eta errespetuarekin ; bainan ene indignitateac defendatcen eta guibelatcen nau. Ene Salbatçaile maitea, bothere exelentciazco eta soberanotasunezco bat çure sacramenduen gainean duçuna, çure ganic choilki çure graciac comunica ahal deçaketçuna, campoco instrumentic emplegatu gabe. Othoizten çaitut, Yainco guciz puchanta eta misericordiosa, bethe naçaçu çure unccione sainduaz, eta partalier eguin naçaçu çure sacramenduec obratcen dituzten efetuetan. Çure Eliçaco sacramenduen errecibitcea ez da campoco gracia bat baicen, ceina baitute comun onen eta gaichtoen artean ; bainan çure izpirituaren participacionea çure amodioaren barneco gracia bat da,

ceinaz ez baitioçute emaiten çure umei eta çure adichkidei baicen. Ah! Yauna, ni bekhatoros handi bat naiz, ez dut mereci gracia hori, ez deçaket iduric çure misericordia choiletic baicen; bainan Apheçaren comunioneac eguin behar dituen fruituetan partalier eguiten nauçula, handi çaçu ene fedea sacramendu dibino horren berthutcaz, borthitz çaçu ene esperantça, eta erre çaçu ene bihotça çure amodioaren suaz; ez deçan guehiago haxic har çuretçat baicen, ez dadin guehiago bici çutaz, eta çuretçat baicen.

*Apheçac benediccionea emaitean, erraçu:*

YAINCO ona, indaçu çure benediccione saindua, eta ene othoitcetan çutaz entçuna içateco gracia.

Erraçu guero *De profundis* bat purgatorioetaco arimen fagoretan, edo cembait *Requiem*.



# COFESATCECO

# DEBOCIONEA.

COFESIO on baten bidez Yaincoarekin eguiten ditu bakeac bekhatoreac, yartcen da Yaincoaren gracian, eta ceruco bidean.

Cofesio on batec lau condicione behar ditu.

Lehena da Preparacionea. Erran nahi da enxeyatu behar duçula ungui çure bekhatuez orhoitcera, çure azkeneco cofesioneac cembat dembora baitu, eta haren arabera hartu behar duçu bekhatuez orhoitceco dembora. Preparacione hori hain necesarioa da, non hori gabe ez baitu çure cofesioac deusic balio; eta contcientcia ungui examinatu faltaz, bekhatu mortal bat uzten baduçu, bekhatu mortal eguiten duçu.

Bigarrena da Contricionea. Erran nahi da, behar duçula içan çure bekhatuez damu eta urriki, eta guehiago bekhaturic ez eguiteco deliberacione fermu bat.

Hirurgarren condicionea da Cofesioa. Erran nahi da, behar ditutçula çure bekhatuac osoki cofesatu; baldin batere gordetcen baduçu, sacriliyoa eguiten duçu, eta damnacioneco bidean yarlcen çare. Erratçu bada çure bekhatuac garbiki, deus ere disimulatu gabe, çure barnean ceronec eçagutcen ditutçun beçala.

Laugarrena da Satisfacionea. Erran nahi da, penitencia complitu behar duçula artha handi batekin, ahalic lasterrena; eta baldin çure cofesorac manatcen baçaitu nihori satisfacioneric eguitera ohorean, intresean, edo bertce maneraz bide gabe eguinic, obligatua çare complitcerat harec ordenatcen darotçuna.

*Examinaren aitcineco Othoitça.*

ARGUI gucien arguia çaren Yuye guciz arguitua! arguiçaçu ene izpiritua çure argui dibinoaren arrayoez; lagun naçaçu ene contcientciaco lece ilhunetarat yausten; sararaz naçaçu ene bihotceco pleguric estalienetan, eta eguiçu examina huntan eçagut detçadan ceronec nec baithan eçagutcen, eta egun batez yuyatuco ditutçun falta nombre gabeac, eta hekien ixustassuna berritcen duten circunstancia guciac.

---

## CONTCIENTCIAREN EXAMINA.

*Yaincoaren lehembicico Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute, ahalkez, edo bertcela cofesioan bekhatuac estaltcen eta estatu harlan comuniatcen dutenec, accionez, solhas gaichtoez, edo sobraniazcoez, Eliçac, lur sainduac, edo bertce cerbait gauça Yaincoari conxe-

cratua denic profanatcen, edo mesprecatcen dutenec; sorguin, azti, edo asmatçailetan sinheste dutenec, amexetan çorionezcoac edo çorigaitcezcoac direlaco egunetan fede emaiten dutenec; Eliçac aprobatcen ez dituen accione, hitz, edo obserbacione suerte batçuetan fidantcia eçartcen dutenec eta oguia, ura, edo bertce cer nahi den Eliçaz benedicatua denic ussaya profanoetaco cerbitçarazten duten guciec. Fedeac irakhasten darozkigun eguietaric cembait sinhexi nahi ez dutenec, edo hetaz bere nahitara dudatcen dutenec. Bere salbamenduaren esperantça galtcen, edo Yaincoaren misericordian sobra phaussatuz combertitcea egunetic egunera luçatcen dutenec, eta bere indarretan fidatuz, edo Yaincoaren laguntçan sobra condatuz, bekhatuzco ocasionenan yartcen direnec. Yaincoaz eta bere salbamenduaz orhoitu gabe dembora hainitz passatcen dutenec. Fedea, caritatea, castitatea, edo bertce cembait berthute colpatcen du-

ten presuna libertinac errepreneitcen ez dituztenec. Munduaren ahalkez, mundutarren trufen beldurrez berthutezco obretaric guibelatcen direnec. Yaincoaren probidentciaz murmuratcen, edo errencuratcen direnec. Botuac arinki, edo complitceco chederic gabe eguiten, eta obligatuac direlaric atchikitcen ez dituztenec. Yan aitcineco, eta yan ondoco, goiceco eta arraxeco othoitçac, eta penitentciac neglientciaz uzten, edo lehiarekin eta atentcioneric gabe eguiten dituzten guciec. Penitentcia arinen içateco, edo bicitceco molde bera seguitceco esperantçan Cofesor largoenac bilhatcen dituztenec.

*Bigarren Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute... Arneguegulleec, yuramentu gueçurraren gainean, eta eguiaren gainean premiaric gabe, eguiten duten guciec. Blasfemioa, edo inyuriozco hitz bat Yaincoaren,

sainduen, edo erreligionearen contra erraten dutenec. Imprecacioneac eguiten dituztenec erran nahi da hassarreturic, edo mihiſz choilki erraten dutenec, bere buruei edo bertcei desiratcen diotela, leher eguitea, debruac eramatea, ozpinac bolatcea, edo bertce cembait errecontru gaichtotan heltcea.

*Hirurgarren Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten... Igandetan eta beztetan, premiaric, edo Eliçaren permissioneric gabe lanean haritcen direnec, eta bertceac harrasten dituztenec, egun saindu hautan meça ossoa, edo pharte bat bere faltaz hux eguiten dutenec, eta barriadura borondatezcoekin meça entçuten dutenec; Eliçaco oficioetaco demboran ostatuan edo plaçan yaten, edaten, edo yocoan haritcen direnec; meçanaussian, bezperetan predicuetan eta catichiman causitcen ez direnec, edo hautan causitcen direlaric arren, yocoan, dantçan, osta-

tuan, edo bertce cembait doslela funsgabetan gaineraco dembora emplegatcen dutenec.

*Laugarren Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute... Burhassoac trufatcen edo mezpreçatcen dituztenec; burhasoei çorrozki behatcen, edo ihardesten diotenec, hekien yotcera aussartatcen direnec, edo yotceaz mehatchatcen dituztenec; burhassoac desobeditcen, edo gogo gaichtoz, eta errencurac eguinez baicen obeditcen ez dituztenec, bere gabeetan eta çahartcean lagundu gabe uztèn dituztenec, edo hei ematen diotenean laguntça iroi eguiten diotenec; burhassoac hil ondoan, hekien chedeac complitcen ez dituztenec eta hekientçat othoitçac eguin arazten ez dituzten guciec; ossaba, içaba, eta bertce ahaide, eta aitcindariac bere adinaren eta autoritatearen arabera ohoratcen ez dituztenec. Naussiac eta etchecoandreac obe-

ditcen eta errespetatcen ez dituztcn sehiec; etcheco onthassunac, bereac balituzte beçala, conxerbatcen ez dituztenec, eta etcheco berriac campoan condatcen eta condarazten dituztenec. Bere umeac hasten, beztitcen, instruitcen, Eliçaco oficioetarat egortcen, huxetan correitcen, bekhatuzco ocasionetaric beguiratcen ez dituzten eta exemplu gaichtoez, edo atçartassun escassez Yaincoaren ofenxatceco bidea bere umeci ematen dioten burhassoec.

*Bortzgarren Manamenduaz, ceinetan cerratcen baitditut imbidia, colera eta abaricioa.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute... Conxeilu, edo exemplu gaichtoz Yaincoaren ofenxatceco occasionea ematen dutenec, eta berreciki caritatearen, castitatearen edo bertce cembait berthuteren contra mintçatcen direnec. Errataula deshonestac yenden bistarat aguertcen dituztenec. Chede gaichtoric ez içan ar-

ren, bilhuzki, modestiaric gabe, edo erguelki beztituac, eta cofiatuac ibiltcen diren, edo aire mundano, eta arraitassun sobrarekin guiçonkien aitcinean aguertcen diren emaztekiec. Lagunac eguin ez duen gaizkia erraten dutenec edo eguin duena eta gordea cena eçagutarazten dutenec, lagunaren contraco cantac cantatcen, edo cantarazten dituztenec, eta maiz haukien gucien aditçaileec. Proximoaren gaitçaz axeguin dutenec, hari gaitça desiratcen, hitz gaichtoac erraten, colpe ematen edo emanarazten diotenec; haren onaz yelosten; edo imbidiaz tristatcen direnec; hari aspertu nahiz hauci ematen, edo chede berean antolamendua errefusatcen dutenec; bere exayari gaitcic nahi ez diotela erraten dutelaric, hura mintçatcen eta salutatcen ez dutenec. Coleran edo bicitassunean ematen direnec. Onthassun biltcea gatic bere buruei gauça necesarioac ere errefusatcen diotçatenec, eta amoina eguin ahal deçakete-

laric eguiten ez dutenec. Bere sabelean ekhartcen duten fruituaren hil arazteco bidea, edo moyanac hartcen dituzten, edo haren conxerbatcecoac negliatcen dituzten emaztekiec. Hiltcea desiratcen, eta hiltceco, edo ossassunari bide gabe eguiteco arriscutan ematen direnec.

*Sei eta bederatci garren Manamenduez.*

MANAMENDU haukien contra bekhatu eguiten dute... Gogoeta, edo desircunde liçunac bere nahitara gogoan atchikitcen dituztenec: hitz libroac erraten, canta arinac cantatcen, edo aditceaz axeguin hartcen dutenec. Bebatce, ukitce edo bertce cembait accione deshonest bere gainean, edo bertce norbaiten gainean, eguiten edo errecibitcen dutenec, emaztekia emaztekiarekin edo guiçonkia guiçonkiarekin içanic ere. Adiskidetassun sobra libroac, libertinen compainiac, dantçac, eta urrundanic ere castitatearen colpatcera ekhar detça-

*Examinaren aitcineco Othoitça.*

ARGUI gucien arguia çaren Yuye guciz arguitua! arguiçaçu ene izpiritua çure argui dibinoaren arrayoez; lagun naçaçu ene contcientciaco lece ilhunetarat yausten; sararaz naçaçu ene bihotceco pleguric estalienetan, eta eguiçu examina huntan eçagut detçadan ceronec nec baithan eçagutcen, eta egun batez yuyatuco ditutçun falta nombre gabeac, eta hekien ixustassuna berritcen duten circunstancia guciac.

---

## CONTCIENTCIAREN EXAMINA.

*Yaincoaren lehembicico Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute, ahalkez, edo bertcela cofesioan bekhatuac estaltcen eta estatu hartan comuniatcen dutenec, accionez, solhas gaichtoez, edo sobraniazcoez, Eliçac, lur sainduac, edo bertce cerbait gauça Yaincoari conxe-

cratua denic profanatcen, edo mespreçatcen dutenec; sorguin, azti, edo asmatçailetan sinheste dutenec, amexetan çorionezcoac edo çorigaitcezcoac direlaco egunetan fede emaiten dutenec; Eliçac aprobatcen ez dituen accione, hitz, edo obserbacione suerte batçuetan fidantcia eçartcen dutenec eta oguia, ura, edo bertcecer nahi den Eliçaz benedicatua denic ussaya profanoetaco cerbitçarazten duten guciec. Fedeac irakhasten darozkigun eguietaric cembait sinhexi nahi ez dutenec, edo hetaz bere nahitara dudatcen dutenec. Bere salbamenduaren esperantça galtcen, edo Yaincoaren misericordian sobra phaussatuz combertitcea egunetic egunera luçatcen dutenec, eta bere indarretan fidatuz, edo Yaincoaren laguntçan sobra condatuz, bekhatuzco ocasionenan yartcen direnec. Yaincoaz eta bere salbamenduaz orhoitu gabe dembora hainitz passatcen dutenec. Fedea, caritatea, castitatea, edo bertce cembait berthute colpatcen du-

ten presuna libertinac errepreniltcen ez dituztenec. Munduaren ahalkez, mundutarren trufen beldurrez berthutezco obreiaric guibelatcen direnec. Yaincoaren probidentciaz murmuratcen, edo errencuratcen direnec. Botuac arinki, edo complitceco chederic gabe eguiten, eta obligatuac direlaric atchikitcen ez dituztenec. Yan aitcineco, eta yan ondoco, goiceco eta arraxeco othoitçac, eta penitentciac neglientciaz uzten, edo lehiarekin eta atentcioneric gabe eguiten dituzten guciec. Penitentcia arinen içateco, edo bicitceco molde bera seguitceco esperantçan Cofesor largoenac bilhatcen dituztenec.

*Bigarren Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute... Arneguegulleec, yuramentu gueçurraren gainean, eta eguiaren gainean premiaric gabe, eguiten duten guciec. Blasfemioa, edo inyuriozco hitz bat Yaincoaren,

sainduen, edo erreligionearen contra erraten dutenec. Imprecacioneac eguiten dituztenec erran nahi da hassarreturic, edo mihiſz choilki erraten dutenec, bere buruei edo bertcei desiratcen diotela, leher eguitea, debruac eramatea, ozpinac bolatcea, edo bertce cembait errecontru gaichtotan heltcea.

*Hirurgarren Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten... Igandetan eta beztetan, premiaric, edo Eliçaren permissioneric gabe lanean haritcen direnec, eta bertceac harrasten dituztenec, egun saindu hautan meça ossoa, edo pharte bat bere faltaz hux eguiten dutenec, eta barriadura borondatezcoekin meça entçuten dutenec; Eliçaco oficioetaco demboran ostatuan edo plaçan yaten, edaten, edo yocoan haritcen direnec; meçanaussian, bezperetan predicuetan eta catichiman causitcen ez direnec, edo hautan causitcen direlaric arren, yocoan, dantçan, osta-

tuan, edo bertce cembait dostela funsgabetan gaineraco dembora emplegatcen dutenec.

*Laugarren Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute... Burhassoac trufatcen edo mezpreçatcen dituztenec; burhasoei çorrozki behatcen, edo ihardesten diotenec, hekien yotcera aussartatcen direnec, edo yotceaz mehatchatcen dituztenec; burhassoac desobeditcen, edo gogo gaichtoz, eta errencurac eguinez baicen obeditcen ez dituztenec, bere gabeetan eta çahartcean lagundu gabe uztèn dituztenec, edo hei ematen diotenean laguntça iroi eguiten diotenec; burhassoac hil ondoan, hekien chedeac complitcen ez dituztenec eta hekientçat othoitçac eguin arazten ez dituzten guciec; ossaba, içaba, eta bertce ahaide, eta aitcindariac berc adinaren eta autoritatearen arabera ohoratcen ez dituztenec. Naussiac eta etchecoandreac obe-

ditcen eta errespetatcen ez dituzten sehiec ; etcheco onthassunac, bereac balituzte beçala, conxerbatcen ez dituztenec, eta etcheco berriac campoan condatcen eta condarazten dituztenec. Bere umeac hasten, beztitcen, instruitcen, Eliçaco oficioetarat ogortcen, huxetan correitcen, bekhatuzco ocasionetaric beguiratcen ez dituzten eta exemplu gaichtoez, edo atçartassun escassez Yaincoaren ofenxatceco bidea bere umeci ematen dioten burhassoec.

*Bortzgarren Manamenduaz, ceinetan cerratcen baitditut imbidia, colera eta abaricioa.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute... Conxeilu, edo exemplu gaichtoz Yaincoaren ofenxatceco occasionea ematen dutenec, eta berreciki caritatearen, castitatearen edo bertce cembait berthuteren contra mintçatcen direnec. Errataula deshonestac yenden bistarat aguertcen dituztenec. Chede gaichtoric ez içan ar-

ren, bilhuzki, modestiaric gabe, edo erguelki beztituac, eta cofiatuac ibiltcen diren, edo aire mundano, eta arraitassun sobrarekin guiçonkien aitcinean aguertcen diren emaztekiec. Lagunac eguin ez duen gaizkia erraten dutenec edo eguin duena eta gordea cena eçagutarazten dutenec, lagunaren contraco cantac cantatcen, edo cantarazten dituztenec, eta maiz haukien gucien aditçaileec. Proximoaren gaitçaz axeguin dutenec, hari gaitça desiratcen, hitz gaichtoac erraten, colpe ematen edo emanarazten diotenec; haren onaz yelosten; edo imbidiaz tristatcen direnec; hari aspertu nahiz hauci ematen, edo chede berean antolamendua errefusatcen dutenec; bere exayari gaitcic nahi ez diotela erraten dutelaric, hura mintçatcen eta salutatcen ez dutenec. Coleran edo bicitassunean ematen direnec. Onthassun biltcea gatic bere buruei gauça necesarioac ere errefusatcen diotçatenec, eta amoina eguin ahal deçakete-

laric eguiten ez dutenec. Bere sabelean ekharlcen duten fruituaren hil arazteco bidea, edo moyanac hartcen dituzten, edo haren conxerbatcecoac negliatcen dituzten emaztekiec. Hiltcea desiratcen, eta hiltceco, edo ossassunari bide gabe eguiteco arriscutan ematen direnec.

*Sei eta bederatci garren Manamenduez.*

MANAMENDU haukien contra bekhatu eguiten dute... Gogoeta, edo desircunde liçunac bere nahitara gogoan atchikitcen dituztenec: hitz libroac erraten, canta arinac cantatcen, edo aditceaz axeguin hartcen dutenec. Behatce, ukitce edo bertce cembait accione deshonest bere gainean, edo bertce norbaiten gainean, eguiten edo errecibitcen dutenec, emaztekia emaztekiarekin edo guiçonkia guiçonkiarekin içanic ere. Adiskidetassun sobra libroac, libertinen compainiac, dantçac, eta urrundanic ere castitatearen colpatcera ekhar detça-

keten dibertimenduac hantatcen dituztenec. Pintura edo figura, eta bertce cer nahi den gauça deshonesti axeguinekin behatcen diotenec. Amodioaz mintço diren liburuac iracurtcen dituztenec. Modestia gutirekin beztitcen direnec. Elkharren arteco deshonezkeriez saindutassuna desohoratcen duten senhar emaztec.

*Çazpieta hamargarren Manamenduez.*

MANAMENDU haukien contra bekhatu eguiten dute... Bértceren onthassuna bortchaz edo fineciaz hartcen dutenec, eta inyustuki içatea desiratcen dutenec. Ichilca burhassoen onthassuna saltcen edo emaiten dutenec. Salerossian languna enganatcen dutenec. Hauci makhur edo çucencontracoez bertcerenaz yabetcen direnec, eta hartaco paper falxoac eguiten edo eguiazcoac gordetcen dituztenec. Cilhegui ez diren prestamuac eguiten dituztenec, eta funxa bethicotz abandonatu gabe intresa tiratcen dutenec. Dakitelaric ez direla

pagatceco estatuan içanen, prestamuac hartcen dituztenec. Çorren pagatceac, alchatcera emanac errendatcea, sehiei eta languilei soldata eta yornala ematea luçatcen dutenec. Detchima çucenki eguiten ez dutenec. Yoco debecatuetan haritcen direnec; yocoan malecia eguiten, eta yocoan bere edo partidaren ahalaz guehiago eçartcen dutenec. Gauça caussituac beretcen dituztenec; edo norenac diren yakiteco eguimbidetan ematen ez direnec. Dembora galtcen, edo lanenan bere indara estaltcen duten sehiec eta languileec. Manuz, conseiluz langunduz, conxentimenduz ohoinestalkibaliatuz, edo bertcela ebascoetan edo bidegabeetan cuxatcen edo pharte hartcen dutenec. Proximoaren gauçac deseguiten, hausten edo urratcen dituztenec; eta haren bidegabeac, hartaco botherea edo cargua dutelaric guibelatcen ez dituzten guciec.

*Çortcigarren Manamenduaz.*

MANAMENDU hunen contra bekhatu eguiten dute... Gueçurra erraten dutenec. Lagunez funxic aski gabe yuyatcen, edo suspitchac arinki eguiten dituztenec. Yuyearen aitcinean eguiaren contra mintçatcen direnec, edo dakiten eguia erraten ez dutenec. Secretuan yakin duten gauça salhatcen dutenec.

Azkeneco bi manamenduac cerratuac dire seigarren eta çazpigarren manamenduetan.

*Eliça Ama Sainduaren Manamenduez.*

YAINCOAREN manamenduetan cerratuez bertce alde manamendu haukien contra bekhatu eguiten dute... Cofesatu gabe urthe ossoa uzten dutenec. Arraçoinaren adineraz gueroz bazco astean bere herrian communiatu gabe egoten direnec. Sori ez den egunetan haragui edo urin eguiten dutenec. Hogoi eta bat urthe complituz gueroz.

Eliçac manatu barurac hausten dituztenec edo colacionean sobra yaten dutenec, eta colacioneco yanharietan Dioceçaco ussaya seguitcen ez dutenec. Eliçan iracurtcen diren Monitorio edo escumicuentçat errespeturic ez dutenec.

*Bekhatu Capitalez.*

URGUILUZ hobendun dire... Bere buruac sobra estimatcen, eta laguna mezpreçatcen dutenac. Gormandiçaz hobendun dire... Sobra yaten edo edaten dutenac, eta yanhariac sobra gostucoac, edo garastieguiac bilhatcen dituztenac. Alferkeriaz hobendun dire... Laneco nagui direnac, ohean sobra egoten direnac, eta yocoan edo dosteta alferretan dembora emplegatcen dutenac.

Bertce laur bekhatu capitalac eçarri dire bortz eta seigarren manamenduetan.

Norc bere estatuco eta oficioco eguimbideac arthoski examinatu behar

ditu; hetan eguiten diren huxac maiz ondore tristeenez seguituac dire.

---

## CONTRICIONERA

Preparatceco bertce moldea, haiuitz artçain kharxuc eta misionario kharrez bethec probetchoski emplegatu dutena.

*Artharekin examinatu ondoan Yaincoaren eta Eliçaren manamenduen gainean, bekhatu capitaletan, bat bederac bere estatuco eguimbiden gainean eguin dituzken huxetan eta bereciki bere habiturazcoetan; orhoitu ondoan, ahal becembat, heyen nombreaz eta heyen circonstantcia printcipalez; finean aurdiki ondoan begui colpe bat, generalean, adimendua ethorriz gueroztic eguiteco çori gaitça içan den hux gucietarat, behar da Yaincoari adreçatu humilitaterekin, conficntciarekin eta kharxuki othoitz hau:*

« OTHOIZTEN çaitut, ô ene Yaincoa,
« harçaçu nitaz urricalmendu; galde-

« guiten derautçut çure misericordia
« bere hedadura gucian. Eguidaçu
« gracia ene bekhatuen osoki aborrit-
« ceco eta hetaz contricione bat eguiaz-
« coa içaiteco. Yuntatcen naiz Yesu-
« Christori, ceinac Olibetaco barat-
« cean hlguindu baititu ene gaichta-
« guinkeria guciac, hetaz ongui nigar
« eguiten duelaric. Phorrozca çaçu ene
« bihotz gogorra, ô ene Yaincoa, eta
« erregretic khirexenaz bethe çaçu:
« galdeguiten dautçut gracia balios
« hori Salbatçaile dibino horren me-
« recimendu infinituen berthutez, Ma-
« ria bekhatorosen ihes lekhua dena-
« ren arartecotasunaz, eta Aingueru
« eta Saindu gucienaz. »

*Othoitz horren ondotic, eguin behar ditu bakhotchac berac, bere baithan eta errepausuki, behereco erreflec-cione hauc, bederen oren laurden batez.*

OH! çombat ofenxatu dudan ene

Yaincoa!... Eta Aita on harrec yasan nau bethi, ene hux gucien nombrea eta heyen handitasuna gatic ere! haren escu misericordiosa memento bat bera gueldiitu içan balitz ene sustengatcelic, nitaz akhabo içanen cen eternitatecotz!... (*Trica çaite hemen memento bat, errefleccione horiec inspiratu daitçuten sendimenduetan sartcera enxeyatceco.*) Non içanen nintcen orai? deus bertceric etcen enetçat içanen ifernuco sugar mendecariac baicen. Içan çaite beraz benedicatua, ô ene Yainco amulxua eta urricalmenduz bethea, ceren beguiratu nauçun hoin çorthe tristetic, preferatuki haimbertcen artean, ceinec, nic becembat çu ofenxatu içan gabe, sofrituco baitute bethi tormentazco lece icigarrian! Ez, Yauna, ez duçu nahi bekhatorearen heriotcea, bainan bai comberti dadin, bunkitua çure ontasunaz, ceinaren efetuac egun oroz senditcen baititut, eta gucia confientciaz bethea çure misericordiaren gainean, heldu naiz azkenaz goiti,

çure oinetan çu ofenxatu çaitudalaco erregretetan sartcera.

« Naicen beçalaco dohacabea! norc compreni deçake ene crimen icigarritasuna? norc khonda ahal leçake heyen nombrea? cer eguin dut bekhatu eguitean? *quid feci?* cer galdu dut? *quid amisi?* cer merecitu dut? *quid promerui?*

« 1° Cer eguin dut? *quid feci?* ofenxatu dut ene Yaincoaren handitasuna eta haren ontasuna; ni ez deus herbala, lurreco har mespretchagarria ausartatu naiz mayestate gucico Yaincoaren contra erreboltatcera!... Cer ausartcia, cer atrebentcia temerarioa!... (*Trica çaite hemen, etc.*)

« Mesprechatu ditut ene Yaincoa ganic errecibitu ditudan ongui eguin guciac. Ene biciaren lehen mementotic orai artino Yaunac bethe nau ongui eguin suerte guciez, eta nic, haimbertce fagoreen alderat sendimenduric gabe, ahantci ditut oro, ez ditut pagatu haimbertce ongui eguin baicen ere

nombre gabeco ofenxez eta laidoez : ez naiz beraz esker gabetasunezco munstro bat baicen. *(Trica çaite hemen.)*

« Cer eguin dut oraino? içan naiz Yesu-Christo, ene Salbatçailearentçat, ahalguisun eta tormenta gucien causa. Yesus maitagarria! certaco odolezco icerdiz arregatu duçu lurra. Olibetaco baratcean! helas! ene gaichtakeriac dire çure arima bethe dutenac khirestasunez. Ez dire çure bekhatuac çure gainerat eror araci dituztenac. Yerusalemeco carriketan eta hango tribunalen aintcinean yasan dituçun laidoac eta barbarokeriacl ez; eneac dire heyen causac içan direnac; ene crimac dire çuc borratu nahi içan dituçunac haimbertce doloreen eta ahalguisunen bidez. Norc khoroatu çaitu elhorriz! ah! aithortcen dut çure oinetan, ô ene Nausi Dibinoa; ene penxamendu criminelec eguin çaituzte. Norc ubeldu dautçù çure beithartea beharondocoz? Norc estali dautçu kherruz? ene arrogantcia da, ene

khatu aborrigarria! eguin dauc betan Aita eta Yainco hiltçale!... (*Trica çaite hemen.*)

« 2° Cer galdu dut bekhatu eguitean? *quid amisi?* helas! oro galdu ditut. Bekhatuac, ene bihotça nothatu duen memento beretic, batheyoco inocentciatic biluci nau. Cer caltea, ô ene Yaincoa, cer calte ikharagarria! Debruaren esclabo bekhatuaz yarri naicen phondutic, galdu dut ene Yaincoaren adichkidetasuna. Bekhatuac ereman daizkit irabaci nituen merecimendu guciac eta ene obra onen fruitu gucia. Cer daiteke tristeagoric, creatura miserablea! gabetua içaitea bere creatçailearen fagoreez! içan da egundeino deus lastimagarriagoric?... (*Trica çaite hemen.*)

« Yesu-Christoren premuntçan partalier, Ceruco Erresuma ene phartaya behar cen içan; ene bekhatuec debecatcen dautet hango sarkia. Neroni naiz Cerua noretçat hexi dudana; ene faltaz ikhusten naiz irrichcuan

bethicotz dohaxuen nombretic desterratua içaiteco. Cer elhorzkiçun desolagarria !... *(Trica çaite hemen.)*

« Banitu ere lurreco on eta içaite guciac, goçatcen banintz ere behere huntan içan daitezken abantail eta eztitasun guciez, Yaincoa galdua dudanaz gueroz, gueroztic elçaut deus guehiago gueldilcen; ene bekhatuez Cerua cerratu dudanaren phondutic, cer çorion igurie deçaket? bekhatua, bekhatu icigarria, ala çorigaitz ekharri beitautac! nola aborri haiçaket aski ?... *(Trica çaite hemen.)*

« 3° Cer merecitu dut bekhatu eguitean? *quid promerui?* merecitu dut bethicotz Yaincoaren presentciaz gabetua içaitea: merecitu dut erretcea debruekin eta erreprobatuekin seculaco sugarretan !... *(Trica çaite hemen.)*

« O çorthe erdiragarria eta ene nigar guciac mereci dituena! cer! ceimbeit placer iragancorrentçat, cerbeit onthasun ez deusentçat, ene pasioneac satisfatcea gatic, hoin eçacholatuki utci

ahal içan naiz ifernuco suplicio icigarrietarat erortceco hirriscura ! ! !
*(Trica çaite hemen.)*

« Bekhatuac eçarri nau beraz ene buruaren exairic cruelena. O bekhatua ! hi haiz beraz ene gaitz soberanoa, ene Yaincoaren gaitz soberanoa haicen beçala ! alferretan iduri nikec, guiçonen beguietan, aberaxa, urusa, ohoratua : bekhatuaren esclabo naiceno, ez nauc guliago biiima dohacabe bat, destinatua eternitateco sugar ikharagarrietan tormentatua içaiteco. Barkha dieçadaçut, ô ene Yaincoa, barkha ! sendiitcen dut ene bekhatuen aborritceco necesitatea, hetaz auhen minetan yartcecoa eta ene bici gucian hetaz penitentcia eguitecoa. Sobera urus oraino baldin precio hortan misericordia ardiesten badut ! Bai, ene Yaincoa, handizki damu dut çu ofenxatu içaiteaz, ceren çu baitçare guciz ona, guciz maitagarria, eta ceren bekhatuac damustatcen beitçaitu, hartcen dut borondate bat fermua, çure gra-

baituçu ; hitz emaiten darotçut ethorkiçunean ihes eguinen diodala bekhatuari, ez ifernuco penei beguiraturic, ez eta ere parabisuco dohaxutasunari, bainan choilki çuretçat dudan amodioa gatic, ceren ene Yaincoa baitçare, eta ene arimaren dohaxutasun maitea, eta nic maitatu behar dudana.

5. *Bekhatuaren contraco aborrimendua.*

AH ! ah ! bekhatu gaichtoa eta madaricatua, gaitcesten haut eta osoki aborritcen ; herioa eta ifernua baino higuinago haut ; nahiago diat lehenago hil, ecen ez Yaincoa ofenxatu. Baldin ene heriotceaz gal araz ahal bahintçat, gogotic eman neçakec nere bicia, ene Yaincoa eta ene oroslea guehiago ofenxatua içan ez dadintçat. Madaricatua dela penxamendua egundeino ene baithan sarkia eman dauyana.

6. *Deliberacione onezco Acta.*

HITZ emaiten darotzut, ene Yain-

coa, guciz ona eta misericordiosa, baldin behin ahal badut çure graciarat bihurtceco dohaxutasuna, eta partalier içan ahal banadi, çuc, çure ume maiteei errephartitcen dioçoçuten fagore Yaincozco eta amulxuetan, deliberatua naicela ethorkiçunean çure alderat leyal içaterat, eta lehenago hiltcerat ecen ez çu mortalki ofenxatcerat.

### 7. *Esperantçasco Acta.*

ENE Yainco ona, hain misericordiozki barkhatu dioçutena. Ohoin onari, Madalenari, Publicanoari, eta bertce hainitz bekhatoros handiei, esperantça dut niri ere çure misericordia finic gabecoaz barkhatuco darozkidatatçula ene bekhatuac, hetaz urrikiz, damuz eta dolorez gucia bethea naicenaz gueroz, eta deliberatua çu ez seculan guehiago ofenxatceco. Barkhamenduric merecitcen ez dudan arren, çure hitcera gueldilcen naiz; erran duçu, ez duçula nahi bekhatorearen he-

riotcea, bainan bai haren comberxionea. Esperantça dut çure baithan, ene salbatçailea maitea, ene bekhatuen gatic eta ene salbatcea gatic hambat sofritu duçuna.

*Andredena Mariari eguiteco Othoitça.*

BIRYINA saindua eta loriosa, Yaincoaren Ama, bekhatoreen ihes lekhua, çu çare pobreen eta churtchen Ama, Ama misericordiosa, den bekhatorosic handiena ere mespreçatcen ez duçuna, miserableenen conxolatcerat bethi prex çarena ; ez du egundeino nihorc aditu çure baithan bere fidantcia eman duenic, fagoratu gabe utci duçula. Heldu naiz esperantça horren azpian çure-ganat. Ama urricalmenduxua, arren bada çure graciaren medios içan dakidan cofesio hau behar beçalacoa. Ene Aingueru Beguirailea, lagun naçaçu, eta çuec ene Patroin, Saindu eta Sainda guciac, ene bekhatuen barkhamendua çuen arartecotasunaz ardiex dieçadaçue eta içan da-

kidan oraino cofesio hau hain osoa, eta complia nola bailitz ene heriotcecoa.

Çohaz guero cofesatcera', humiltasun eta modestia handi batekin. Apheça conxidera çaçu Yesu-Christoren presuna bera beçala; ecen haren lekhua ocupatcen du. Yar çaite belhaunico, eta modeski beguiac beheratuac, Aphecari bisayarat beguiratcen ez dioçula; ceina çaite, eta erraçu : *Aita, indaçu, çure benediccionea, ceren eguin baitut bekhatu :* eta erraçu guero *Confiteor...... meâ culpâ*-raino, escuaraz edo latinez.

---

## COFESATU ONDOAN EGUITECO ACTAC.

### *Fedezco Acta.*

SINHESTEN, dut osoki, ene Yaincoa çure odol sacratuaren merecimenduaz ene bekhatuac penitenciazco Sacramendu huntan barkhatu darozkidatçula, baldin ene aldetic disposatua içatu banaiz; eta sinhesten dut halaber, çuc ichuri ez bacinu çure odol

preciatua, ecin barkhatuco citçaizkidala, eta hain guti citezkela ene obrac merecimenduzcoac. Hargatic beraz sartcen ditut ene bekhatu guciac çure odol sacratuan itho daitecentçat, eta othoitcez nagotçu eman dieçadaçun barkhamendu oso bat. Halaber darotçut othoitz eguiten, ene Yaincoa, çure Ama maitearen eta Saindu gucien merecimenduen medioz, agrada dakiçun oraino ene cofesia hau. Huntan eta bertce egundeino eguin ditudan gucietan, guerthatu çaizkidan hux guciac, dela contricione escasez, cofesioneac aski garbi eta oso içan faltaz, dela penitentcia ez behar beçala complituz, çure misericordiac erremedia dietçakidan guciac, othoi; ene Yainco ona, ceruan barkhatuac guertha dakizkidantçat.

*Eskerren bihurtceco Acta.*

O ENE Yaincoa, eta ene Aita misericordiosa ! ez dakit nolà çure amodio handiari eskerrac eman, haren-ganic

errecibituric heldu naicen onthasun handiez. Ez, ez naiz ni gai hari dohacon beçalaco eçagutçaric eguiteco, çure Seme maitearen merecimendu eta perfeccione miragarrien moyanez baicen. Beraz hec berac ofrendatcen darozkitçut, ene Yaincoa, nic ecin deçakedanaren lekhuan, eta presentatcen darozkitçut halaber Biryina Sainduaren merecimenduac ere, ene Aingueru Beguiraillearenac, Serafin, Profeta, Patriarkha, Apostolu, Martir, Cofesor, Biryina, eta finean ceruco corte guciarenac. Eta, Creatçaile maitea, nahi nuke banu hambat mihi nola baita ceruan eta lurrean creatura, guciac emplegatceco munduaren fineraino çuri eskerren emaiten, çure laudatcen eta lorificatcen.

*Contricionezco Acta.*

ENE Yainco guciz misericordiosa; Sacramendu huntan eguiazco Aita baten amodioa eracuxi darotaçuna, niri ceinac, çu osoki mespreçaturic, hain

liberalki eman darozkidatçun graciazco ontasunac galtcerat utci bailitut; nic çu hain handizki ofenxatu, eta contentatcen çaizkit pagamendu chume batez, hartceco handi baten aldera, hortic cembait probetchu bacindu beçala; aitcinerat heldu çaizkit besoac çabalduric, bihotz amodioz erretcen hari den samur batekin nago ahuspez çure ontasunaren oinetan, ene bicitce iraganac emaiten dautan ahalkeriaz eta dolorez gucia bethea. Ene Yaincoa eta ene Aita, aithortcen dut ez dudala mereci çure umeen herruncan içaitea.



# COMUNIONE SAINDUAREN

## ERRECIBITCECO

# DEBOCIONEA.

Lehembicicoric, conxideratu behar duçu çure-ganat heldu dela cerua, lurra eta gauça guciac creatu dituen, Yainco Mayestate handitaco hura, ceinaren aitcinean Aingueruac eta Serafinac ikharan baitande.

Bigarrenean, conxidera çaçu noren-ganat heldu den; çure-ganat ceina ez baitçare herrauxa eta hauxa baicen, ceinac hambat ofenxatu baituçu.

Hirurgarrenean, conxidera çaçu certarat heldu den, çure-ganat heldu dela çuri bere gracien communicatcerat, çuri çure bekhatuen barkhatcerat, eta hitz batez erraitceco, heldu da amodioz osoki çuri ematcerat.

Laugarrenean, conxidera çaçu cein nescesario çaitçun Yaincoaren errecibitcea, ceren hura baita çure arimaren yanharia hunen

gosean çure sasiatceco, çure eritasunetaco erremedioa eta çure tentacioneen contraco indarra.

*Sacramendu Sainduaren errecibitceco aitcinean eguiteco lehembicico*

OTHOITÇA.

ENE Yainco ona, ceronec egun deitcen nauçu çure-ganat, çure inspiracionez ene bihotça berotcen duçula, çure errecibitceco desir handi eta kharxuetarat. Ohore eta onthasun handi hori eguin nahi dautaçunaz gueroz, çato beraz ene arimarat, eta ceronec prepara dieçadaçu halaco moldez, non çure nahitarat perfetki plegatuco baituçu, ceronec eguin eta erreformatu duçun obra; eta nic ere nere aldetic iduki çaitçadan ene bihotçaren gainean Yaincozco cachet bat beçala.

*Humilitasunezco Acta.*

ORDEAN, Yauna, nola ni hurbilduco naiz çure-ganat, çure handitasunari

beguira eta ene ez deustasunari, çure garbitasunari eta ene liçuntasunari, çure saindutasunari eta ene maleciari? Yondoni Yoanni-Baptista, hain saindu handia, amaren sabelean sanctificatua celaric, ez cela gai cioen çure çapata lokharriaren amarratceco. Yondoni Petri, Apostoluen Printceac, cioen : Yauna erretira çaite ene-ganic guiçon bekhatoros bat naiz. Eta bada ni infinituki bekhatoros handiagoa, nola ausartatuco naiz, Yauna, çure-ganat hurbiltcerat? Nere baithan ez dut deus ere causitcen bekhaturic eta maleciaric baicen, nere pasione nabasien errebolta gaichtoric baicen. Ene desirac eta ene inclinacione corrumpituac içatu dire ene bicitcearen leguea eta erreguelac. Ez dut egundeino behar den penaric hartu çure amodioarentçat; ez naiz çure yusticiaren beldur içatu, eta çure legueari çor diodan errespetuac ez nau guibelatu gaizkia eguitetic; egundeino ez darotçut eskerric ungui eman çure-ganic errecibitu ditudan

onthasunez. Ene bicitce gucia çure contraco guerla bat içatu da, bethi çu niri ungui eguiten, eta ni çuri gaizki eguiten, çu bethi ene bilha, eta ni bethi çure ihesi. Ah! Yauna, eta nola bada hunelaco creatura dohacabe bat ausartatuco da çure-ganat hurbiltcerat?

Trica çaite hemen aphur bat çure miseriaren eta çure indignitatearen gainean penxatcen duçula, eta guero erraçu confientcia handi batekin.

AH! Yauna, aditu dut çure boz eztia, ceinac deitcen bainau çure-ganat, erraiten dautaçula : çatozte ene-ganat, nekhatuac eta trabailatuac çaretenac, eta nic soleguituco çaituztet. Erran duçu, ene Yaincoa, ez duçula bekhatorearen heriotcea nahi, bainan bai comberxionea; ez duçu, Yauna, bekhatorea çure-ganic khasatcen, bainan bai deitcen çure-ganat. Erran duçu etçarela mundurat yustuen deitcerat ethorri, bainan bai bekhatoreen ; ez dutela sendoec miricuric behar, bainan bai eriec.

Ene Salbatçaile maitea, çure onthasunean eta çure misericordia handian ene esperantça eta confientcia gucia emanic, heldu nabiz eria miricua ganat; senda naçaçu : heldu naiz bekhatorea yusticiazco ithurrirat, yustifica naçaçu. Badakit Publicano bekhatorosaren nigarrez casu guehiago eguin cinuela, Farisauaren banket superbaz baino; ez cinituela Madalenaren nigarrac mezpreçatu bainan barkhatu cinioela, eta hartu cinuela çure proteccionearen azpian. Huna non naicen, Yauna, çure misericordiaren oinetan, nere bekhatuen doloreac erdiraturicaco eta porroscaturicaco bihotz batekin. Eguia da, ez dut Madalenac becembat nigar çure oinen garbitceco, bainan çuc ichuri duçu odolic aski ene eta mundu guciaren bekhatuen garbitceco eta barkhatceco.

*Aita eternalari eguiteco Othoitça.*

Aita cerucoa, nola obra onic gabe nere baithan causitcen bai naiz, eta

ez baitut deus ere çuri ene bekhatuez satisfaccione eguiteco ; presentatcen darozkitçut çure Seme Yesusen merecimenduac, ceinac baitire handiago ene eta mundu guciaren bekhatuac baino. Ofrendatcen darotçut ene redempcionearen precioa, eta ene Salbatçaileac bere heriotce cruelaz enetçat eguin darotçun pagamendua. Yauna, itçul çaitçu çure beguiac horren bisayaren gainerat eta ikhus çaçu horren gorphutça hila beçala aldarearen gainean, eta horren odol preciatua calitçaren barnetic oihuz dagotçula. Entçun çaçu çure Seme maitearen eta gure anayaren odolaren boça, ceinac bere heriotcean Calbariotic beçala, orai aldaretaric erraiten baitarotçu : Aita, barkha dioçoçute, ecen ez dakite cer hari diren ; gu bekhatoros gaichtoentçat gracia eta misericordia galdatcen darotçula, ceinec gurutceficatu baitugu gure bekhatuez.

*Fedezco Acta.*

O YESUS, ene Salbatçailea ! sinhesten

dut, fede bici balez, eguiazki eta errealki Aldareco sacramendu handi hortan çarela; hor ene izpirituac adoratcen du ene beguiec ikhusten ez dutena, nola baita çure Yaincotasuna, çure guiçontasuna, çure arima, çure gorphuiça, çure odola, çure izpiritua, eta çure merecimenduac; phitz çaçu ene fedea misterio handi eta adoragarri horren gainean, ô ene Yesus! çor darotçudan sendimendu eta errespetuarekin çure ganat hurbil nadintçat.

*Amodiozco Acta.*

ÇURE amodioac eman çaitu, ene Yesus, oguiaren eta mahax arnoaren iduricn azpian, ene ganat ethortcea gatic; misterio hortan çure amodioaren indar gucia erakhusten duçu. Othoizten çaitut bada, ene Yesus, çure bihotça enetçat sutan eman duen amodio berac, enea ere çuretçat bero deçan. Ah! bihotz hotça, bethi hormatua içanen othe haiz? Maita çac, hic

ere, hi hain borthizki maitatu hauen Yesus bera. Ochala Yesusen amodio sacratuac erre baleça ene bihotça, eta osoki conxumi!

Merecitcen ez dudalaric arren desiratcen dut çure errecibitcea, ene Yesus maitea, ceren baitakit eman nahi çaizkidala, eta çure baithan causituco dudala ene languidura gucien erremedioa. Ene Salbatçaile maitea, ez nuke nahi comunione hau eguin usantça batez; othoi, eguin dieçadaçu bada gracia, amodio hero batez, munduco creaturetaric osoki hux nadin eta çutaz bethe, ceina adoratcen eta maitatcen baitçaitut, çuretçat gucia haxbeherapenez bethea naicela.

*Ofrendazco Acta.*

OFRENDATCEN darotçut, ene Yaincoa, orai ni eguiterat nohan comunione hau, çure amodioa-gatic eta çuri placer eguitea gatic. Badakit, ene Salbatçaile maitea, comunioneco accione hau hainitz agradatcen çaitçula, hiltceracoan

cintuen bitz amodiozco samur eta hunki garrietan marcatu cinaucun beçala, erraiten cinuelaric : Orhoit çaitezte nitaz hori eguinen duçuen gucian. Eguiten dut beraz, ene bihotceco Yainco maitea, çuc ene arimarat ethortceco duçun desirari satisfaccione emaiteco, çurekin yuntatceco, bekhatuari ihes eguiteco, berthutearen pratican indarren harteco, eta ene ez deustasunaren eçagutceco.

*Andredena Mariari eguiteco Othoitça.*

O Birjina loriosa ! ene Salbatçailearen eta ene Erostailearen Ama, duçun pietate bekhatoros miserable huntaz : ô Trinitate Sainduaren lore ederra ! eguiçu enetçat othoitz, çure mediozbesarca deçadan, amodio perfet batekin, çure Seme ene Salbatçailea, eta eguin nadin haren gogoraco arima bat. O ceruco Aingueru dohaxuac ! othoi, lagun naçaçue, parabisuco Saindu eta Sainda guciac, enetçat othoitz eguiçue,

ene Yaincoaren gogora comunione hau eguin deçadantçat.

*Bihotz altchatceac Yesusi.*

ÇATO, ene Yaun maitea, çato eta compli çaçu ene baithan eguin gogo duçun obra miragarria.

O ene bihotceco Yainco maitea! ez deçaçula guehiago luça ene-ganat ethortcea.

Ah! ene Yaincoa, ala nic baitut desira handia çure errecibitceco!

Aithortcen dut ez naicela creatura miserable bat baicen, bainan çu oneguia çare, ene miseriec ene-ganat ethortcetic guibelatceco.

Çato, othoi, ene Salbatçaile maitea, çu berantexia nago.

Ene Yaincoa, çato ene arimarat eta santifica çaçu.

Ene Yaincoa, ene bihotçaren yabe eguin çaite eta garbi çaçu.

Ene gorphutcean sar çaite eta guarda çaçu, eta ez naçaçula seculan çure amodiotic aparta.

O su sacratua! erre çaçu cer ere causitcen baituçu ene baithan çure gogoara ez denic, eta çure graciari eta çure amodioari traba eguin ahal deçokenic.

O ceruco mana! indaçu çure gustu ona, munduco placer gucientçat higuintça oso bat içaiteco.

Erraçu guero *Confiteor*, eta hiruretan:

YAUNA, ez naiz ni digne çure errecibitceco; bainan erraçu çure hitz saindua, eta ene arima içanen da sendatua.

Sinhesten dut, ene Yaincoa, fede bici batez, Ostia saindu hortan dela cerratua çure içaite gucia.

Adoratcen çaitut ahal deçakedan humiltasun eta errespeturic handienarekin, Yainco amodio handitacoa.

*Comunione Saindua errecibitu ondoan eguiteco* OTHOITÇA.

O AMODIO ecin estimatuzcoa! ontasunezco ixasoa, ithurri ecin agor çai-

tezkena, ene barnean ohoratcen eta adoratcen çaitudan Ostia Sacratua, bihotz bat gutiegui da çure maitatceco, Yesus dibinoa, eta boz bat halaber gutiegui da çure ontasun handiaren publicatceco.

O ene Salbatçailea, eta ene arrotz maitea! ala nic çuri obligacione handia baitarotçut, ni beçalaco creatura pobre bati eguin dioçun bisitaz!

Eguin dautaçun ontasun eta ohore handi horren eçagutçatçat, çutazco ofrenda bat eguiten dautçut çuri ceroneri.

Ez, ez dut guehiago bici nahi, bainan Yesus nahi dut ene baithan bici dadin.

Yesus enea da, eta ni harena eternitate gucico.

O amodioa, ô amodioa! seculan ez guehiago bekhaturic.

Ez çaizkit seculan ahantcico, Yesus ene Salbatçaileac eta ene arrotz maiteac eguin darozkidan fagore eta ontasun ecin erran beçain handiac.

*Adoracionezco Acta.*

AH! Yauna, çu creatura miserable hunen-ganat ethortcea, sobra gracia eguitea da; Ainguerruei baino guehiago eguin dautaçu. Hec ez dute çu ceruan ikhusteco eta adoratceco dohaxutasuna baicen, bainan ni çure sustantciaz hazten nauçu, fagore handi bat da hori enetçat, eta çure amodioaren gaindidura bat nahi içatu baituçu sarthu ene gorphutcean. Han bada, ene Yesus, adoratcen çaitut, hala nola Ainguerruec ceruan eguiten baitçaituzte; eta nago çure presentcia sainduan errespetu eta humiltasun handi batekin.

*Eskerren bihurtceco Acta.*

BIRYINA Saindua, çuc çure sabel sacratuan ekharri duçun Yesus bera da orai ene baithan. Cergatic ez dut bada nic hambat amodio eta garbitasun nola çuc? Lagun naçaçu, olhoi, çure Seme amulxuac eguin dautan gracia

handi huntaz eskerren emaiten. Ceruco Aingueruac, parabisuco Saindu eta Sainda guciac, çuekin yuntatcen naiz, Yesusi eskerren bihurtceco eguin dautan graciaz. Çuc ceronec eman dautaçun Seme bera ofrendatcen dautçut, ontasun handi horren eçagutçatçat.

*Eskerren bihurtceco bertce Acta.*

YESUS adoragarria, eguia da beraz ene baithan çarela! naicen bada ni ere, othoi, choilki çure baithan; ez çaitecela seculan ilkhi sarthu çaren bihotz hortaric.

Ene bihotça, othe dakic maitatcen? orai hemen erre behar haiz; conxumi hadi dohaxuki Yesusen amodioaren labe sacratu hortan. Ene arimaren Salbatçaile maitea, khambia naçaçu çure ganat, ez nadin ni guehiago bici, bainan çu bici çaitecen ene baithan: ene penxamendu, ene hitz eta ene obra guciac, diren niri eman çaitan Yesusenac, eta ez eneac. Hitz emaiten darot-

çut, ene Yesus, seculacotz çure alderat leyal içanen naicela ; ez dut amistantçaric nahi içan guehiago çure loriaren exayekin; ukho eguiten diotet munduari, eta haren placer falxuei, debruari, eta haren tentacione edo seguida gaichtoei, eta çure manamendu choilei yarraiki nahi natçayote.

FINEAN, ardiexi dut eta nere baithan dut ene arimac maitatcen duena, ez du perilic espacatceraț utz deçadan. Ez, ez gargoro nahi dut ene bihotça içan dadin haren presundegui; bainan ene bitoria eta ene dohaxutasuna seguratuac içatea gatic, amarratuco dut borthizki amodioaren gatheez ; eta gal ez deçadantçat, emaiten dut modestia sentineltçat ene beguietan, eta discrecionea ene mihian. Badakit ene Yesus maiteac ez duela bihotz phartitu bat nahi; arraçoin da beraz eman dioçodan nere bihotz osoa. Ez choilki bihotça, Yesus guciz maitagarria, bainan oraino emaiten darotçut ene arima, ene

gorphulça eta naicen gucia. Errecibi çaçu beraz çurea dena, eta yunta çaçu çurekin, munduco creaturec çure-ganic aparta ez deçaketen beçala.

ESKERRAC eta laudorioac bihurtcen darozkitçut, Aita guciz puchanta eta saindua, ceren merecitcen ez dudalaric arren, ni indignoa, nahi içatu bainauçu bazcatu, eta haci çure Seme Yesu-Christoren gorphutz eta odol preciatuez.

Othoizten eta arrekeritcen çaitut bada, comunione saindu hau içan dadin ene bekhatuen barkhamendutan, eta gracian errecibitcen duten arimetan eguiten duen efetu bera ene baithan ere eguin deçan.

*San Thomasec Yaincoari eguiten cioen* OTHOITÇA *eta batbederac eguitecoa Comunione ondoan, eta noiz nahi den.*

YAINCO guciz puchanta eta misericordiosa, eguidaçu gracia çu berotasun

handi batekin desiratceco, çuri agradatcen çaizkitçun gauçac prundentciarekin bilhatceco, eta argui handi batekin berechteco, eta fidelitate handi batekin hekien complitceco çure icen sainduaren loriacotz. Ene Yainco Yauna, erreguela çaitçu ene bicitce gucia eta ene accione guciac. Manatcen dautaçu compli detçadala çure Ebanyelioan seinalatu eta marcatu darozkidatçun eguimbideac; eman dieçadaçu çuc eguin detçadan desiratceo duçun gaucen eguiteco podorea. Eguidaçu gracia hekien eçagutceco eta hekien complitceco borondatearen içateco; bai eta ere hekien segurki complitceco, eguin behar nituzken beçala, eta ene arimaren salbamenduaren abantailetan diren beçala. Çure-ganat yoan behar nauen bidea causi deçadan segura, chuchena eta perfeta, eta halaco moldez guida nadin onean eta gaitcean, non çorionac ez bainau urguilustatuco eta afliccioneac ez bainaiz utcico sobera erortcera ; çorioncan eskerrac

eman dietçakitçudan, eta afliccionetan cerbitça çaitçadan pacientciarekin. Ez naçan deusec ere aleguera ez trista, çure-ganat hurbiltcen edo çure-ganic urruntcen nauten gaucec baicen. Ez deçadan desira çuri placer eguitea baicen, eta ez naçan deusec beldur çuri desplacer eguiteac baicen. Eguidaçu gracia, deusic ez deçadan ez has ez abia caritatezco mobimendu batez baicen : çure cerbitçuco diren gaucez gaineracoei, beguira dioçotedan ez deus batçuei beçala ; eta gauça hil batçuei beçala ; eta ez deçadan gauça onac eguin usantça batez, bainan eguin deçadan guciac çure amoreac galic eta zelo handi batekin. Çure handitasunaren amodioac eta çure eternitateac mespreça araz dietçakidaten munduco gauça pasayerac eta iraupenic ez dutenac ; preça eta estima deçadan çure-ganic heldu çaizkidan gauça guciac, eta çu, ene Yaincoa, guciac baino guehiago preça çaitçadan. Gauçac guciec unha naçaten eta desgusta ; çu

gabe gauça guciac yasan gaitz causi deçadan, eta icigarri; placer handi bat causi deçadan, çureiçat hartcen eta eguiten diren traibailuetan; eta ez deçadan causi trabailuric eta penaric baicen, errepausan berean ere çure baithan hartua ez denean. Eguidaçu gracia, ene Yaincoa, ene bihotça çure-ganat alchatceco maichco aspiracioneez, eta ene falten eçagutceco dolore handiarekin eta resolucionerekin hetaric correitceco; eguiçu içan nadin humil disimulacioneric gabe, içan nadin aleguera arintasunic gabe, içan nadin triste sobera erori gabe, içan nadin serios ilhundurarìc gabe, içan nadin eguiatiar falxukeriaric gabe, içan deçadan çure beldurtasuna desesperatu gabe, içan deçadan çure baithan esperantça, confientcia presumpcioneco bat gabe, içan nadin garbi liçuntasunic gabe, errepreni deçadan ene guirichtino laguna coleratu gabe, maita deçadan desguisatu gabe, edifica deçadan ene exemplua eta ene hitcez banitateric gabe,

içan nadin obedient escusaric bilhatu gabe, eta errepustaric eman gabe, içan nadin pacient murmuratu gabe. Indaçu, ene Yesus eztia, bihotz fermu eta deusec ecin mobituzco bat, munduco afeccione guciec lurreco gaucetarat eraman ez deçaketen bat; bihotz yeneros eta ecin bentçutuzco bat, perxecucione guciec çure baithan duen confientcia gal araz ez dioçoketen bat; bihotz gauça gucietaric libro den bat, munduco placer guciec çure-ganic aparta ez deçaketen bat; finean bihotz chuchen eta garbi bat, intentcione gaichto guciec çure bidetic athera ez deçaketen bat. Acorda dieçadaçu, Yauna, argui bat, ceinaren bidez eçagut baitcitçaket, diliyentcia bat, ceinaz bilha ahal baitcitçaket; çuhurtcia bat, ceinaz causi ahal baitcitçaket; bicitceco conduita bat, ceinaz placer eguin baiteçaçuket; fede bat, ceinaren bidez yarraic ahal bainitçatçukè, eta confientcia bat ceinaz perfetic goça ahal baitcitçaket. Eguidaçu gracia partalier

içaiteco çure sofricarioetan eta çure doloretan, penitentciaren trabailuz ungui balia nadin bicitce huntan, çuc eguiten darozkidalçun ontasunez, eta ceruan, dohaxutasunaz goça nadin çure loriaren comunicacioneaz.

---

## ALDARECO SACRAMENDU SAINDUAREN

### LETHANIAC.

Yauna, urrical gakizkitçu.
Yesu Christo, urrical gakizkitçu.
Yauna, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, adi gaitçatçu.
Yesu-Christo, entçun gaitçatçu.
Ceruetaco Aita, ceina baitçare Yaincoa, urrical gakizkitçu.
Semea, munduaren Salbatçailea, ceina baitçare Yaincoa,
Izpiritu Saindua, ceina baitçare Yaincoa,
Trinitate Saindua, ceina baitçare Yainco bakhotch bat,
Ogui bicia ceina yauxi baitçare cerutic,
Yainco estalia eta Salbatçailea,
Berecien oguia,
Ogui guicena eta Erregueen placer goçoa,
Sacrificio bethi eguiten dena,

Urrical gakizkitçu.

Ofrenda chahua ,
Bildox tatcha gabea ,
Mahain guciz garbia ,
Ainguerueu yanharria ,
Mana estalia ,
Yaincoareu miraculuen orhoitçapena ,
Ogui sustantciaz goragocoa ,
Berbo haragui eguin çarena ,
Gure baithau egoiten çarena ,
Ostia Saindua ,
Benediccionearen calitça ,
Fedearen misterioa ,
Sacramendu guciz haltoa , eta guciz ohoragarria ,
Sacrificio gucietaric saiuduena ,
Hilei eta biciei graciaren eguile eguiazcoa ,
Antidota cerucoa gu bekhatuetaric beguiratceco ,
Miraculu gucietan den miraculuric espantagarriena ,
Yaunaren pasionearen orhoitçapen guciz sacratua ,
Bethetasun gaciez goragoco dohaina ,
Amodio dibinoaren seinale printcipala ,
Liberalitate dibinoaren abundantcia ,
Misterio guciz sacratua eta haltoa ,
Immortalitateco erremedioa ,
Sacramendu espantagarria , eta biciaren emailea ,
Sacrificio ez odolstatua ,
Berboaren bothereaz, haragui eguin içatu çaren oguia ,

Urrical gakizkitçu.

Gombidatçailea eta yanharia,
Banket guciz eztia, ceinetan Ainguerunc
  baitire cerbitçariac,
Pietatearen lokharria,
Ofrendatçailea eta ofrenda,
Eztitasun izpirituala ithurri propioan yas-
  tatcen çarena,
Arima sainduen yanharia,
Yaunaren gracian hiltcen direnen biaticoa,
Ethorkiçuneco loriaren bahia,

Urrical sakizkitçu.

O Yaincoa, fagora gaitçatçu,
Entçun gaitçatçu, Yauna.
Yaincoa, fagora gaitçatçu.
Entçun gaitçatçu, Yauna.
Çure gorphutça eta çure odola indignoki
  errecibitcetic, beguira gaitçatçu, Yauna.
Haraguiaren guticiatic,
Bicitcearen superbiotasunic,
Bekhatuen ocasione gucietaric,
Çure dicipuluekin bazco hunen yateco ci-
  nuen desiraz,
Çure dicipuluei oinac garbitu cinotçaten
  humilitate handiaz,
Sacramendu Saindu hau eguin cinuen ca-
  ritate handiaz,
Gure gatic çure gorphutz sacratuan hartu
  cintuen bortz çauriez,

Beguira gaitçalçu, Yauna.

Gu bekhatoreac içana gatic, entçun gaitçat-
  cu, Yauna, placer baduçu.
Othoizten çaitugu berritceaz, eta conxer-
  batceaz sacramendu miragarri hunen sin-
  hestea, ohorea eta debocionea, entçun gait-

çatçu, Yauna, placer baduçu.
Othoizten çaitugu beguiratceaz heresia, tromperia eta bihotceco ixumendu gucietaric, entçun gaitçatçu, Yauna.
Othoizten çaitugu, heriotceco orenean, biatico huntaz preparatceaz eta bazcartceaz, entçun gaitçatçu, Yauna.
O Yaincoaren Semea, entçun gaitçatçu, Yau.
Yaincoaren bildoxa, ceinac khentcen baititutçu munduaren bekhatuac, barkha dietçagutçu, Yauna.
Yaincoaren bildoxa, ceinac khentcen baititutçu munduaren bekhatuac, entçun gaitçatçu, Yauna.
Yaincoaren bildoxa, ceinac khentcen baititutçu munduaren bekhatuac, urrical gakizkitçu.
Yauna, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, urrical gakizkitçu.
Yauna, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, adi gaitçatçu.
Yesu-Christo, entçun gaitçatçu.

*Othoitz eguin deçagun.*

O YAINCOA, ceinac Sacramendu miragarri hunen azpian, çure pasionearen eta çure heriotcearen orhoitçapena utci baitarocuçu othoizten çaitugu humilki eguiteaz gracia, hala ohora ditçagun çure gorphutçaren

eta çure odolaren misterio sacratuac, non bethi gure baithan sendituco baitiltugu çure salbamenduaren fruituac. O Yaincoa! ceina bici baitçare eta erreguinatçen baituçu Aitarekin, Izpiritu Sainduaren batasunean, mende guclietan. Halabiz.

Galdeguiotçu hemen Yaincoari Biryina Sainduaren arartecotasunez, desiratcen ditutçun gauça guciac, nahiz izpiritualecoac eta nahiz temporalecoac, eta nahiz bertcerentçat, ez dukeçu ocasione hobeagoric Yaincoaren graciac çure-ganat tiratceco, comunione on baten demboracoa baino.

---

## NAHIZ ATHERATUA DENEAN,

*Eta noiz nahi den Aldareco Sacramendu Sainduari eguiteco erreparacione eta amanda honorablea.*

OSTIA adoragarria amodiozco bictima preciatua, ene gorphutçaren beguiei sacramendu hortan estaltcen çarena, fede bici batez olhoizten caitut aguer-

çakizcoten eue arimaren beguiei. Salbatçaile maitea cer hari çare tabernacle hortan, eta cer dire çuc estalki dibino eta misterio horren azpian ditutçun empleguac? Gure bekhatu eta gure abominacione ixusiec egun oroz, obliga leçakete çure Aita ceruco fudre eta ozpin guciac gure gainerat etchatcera, eta gu uholdez hondatcerat; bainan çu causitcen çaitu gure artean sacramendu horretan, hortz adar formatua hedoi batean; eta Yainco yustuac ecin hor ikhus çaitçake, non ez den berehala misericordiaz bethetcen, eta non ez den orhoitcen çuc çure Aitarekin bekhatorosentçat eguin duçun alientciaz. Çure bethiereco emplegua sacramendu hortan, çure Aitari amanda honorable eguiten haritcea da, Aphez nausí eta guiçonen bitima beçala, guiçonen bekhatuec Yaincoaren perfeccione guciei eguiten diotçaten afrontuez erreparacione eguiten dioçula. Yustu da ni ere çurekin yunta nadin çure empleguetan, eta çure sen-

hotz hura, amodio hura, odol hura, çauri hec, sacrificio hura, eta hortan cerratcen ditutçun misterio hec guciac, eta oraino gure beguiei presentatcen diotçatçuten berthute guciac. *Pater noster*, etc., eta erratçu guero Sacramendu Sainduaren Lethaniac.

*Sacramendu Sainduaren Benediccionea emailean.*

EGUITECO OTHOITÇA.

O YESUS, ene Salbatçailea! sinhesten dut batere dudaric eguin gabe. Sacramendu adoragarri hortan çarela eguiazki eta errealki, çure gorphutz, arima, odol eta Yaincotasunarekin; prest naiz noiz nahi den eguia hunen sustenguan nere biciaren emaiteco. Adoratcen çaitut posible den errespetu guciarekin; indaçu çure benediccione saindua, eta seculan çu ez ofenxatceco gracia.

---

# ANDREDENA MARIAREN
## LETHANIAC.

---

YAUNA, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, urrical gakizkitçu.
Yauna, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, adi gaitçatçu.
Yesu-Christo, entçun gaitçatçu.
Ceruco Aita, ceina baitçare Yaincoa, urrical gakizkitçu.
Semea, munduaren Salbatçailea, ceina baitçare Yaincoa, urrical gakizkitçu.
Izpiritu Saindua, ceina baitçare Yaincoa, urrical gakizkitçu.
Trinitate Saindua, ceina baitçare Yainco bakhoch bat, urrical gakizkitçu.
Maria Saindua, othoitz eguiçu guretçat.
Yaincoaren Ama Saindua,
Biryinen Biryina Saindua,
Yesu-Christoren Ama,
Gracia dibinoaren Ama,
Ama guciz garbia,
Ama guciz phurua,
Ama bekhaturic içan ez duçuna,
Ama tatcharic içan ez duçuna,
Ama maitagarria,
Ama miragarria,
Creatçailearen Ama,
Salbatçailearen Ama,

Othoitz eguiçu guretçat.

Biryina guciz prudenta,
Biryina ohoragarria,
Biryina laudagarria,
Biryina puchanta,
Biryina guciz amulxua,
Biryina leyala,
Yusticiaren miraila,
Cuhurtcia dibinoaren thronua,
Gure bozcarioaren ithurburua,
Untci izpirituala,
Untci ohoragarria,
Debocionearen modela,
Arrosa misteriozcoa,
Dabiten dorrea,
Dorre borthitça,
Urrezco palacioa,
Alientciaco arkha,
Ceruetaco portalea,
Goiceco içarra,
Flacoen socorria,
Bekhatoreen ihes lekhua,
Afliituen conxolatçaïlea,
Guirichtinoen fagorea,
Aingueruen Erreguina,
Patriarkhen Erreguina,
Profeten Erreguina,
Apostoluen Erreguina,
Martiren Erreguina,
Cofesoren Erreguina,
Biryinen Erreguina,
Saindu gucien Erreguina,
Gu bekhatoreac içana gatic, entçun gaitçatçu.

Othoitz eguiçu guretçat.

Andrea, placer baduçu,
Othoizten çaitugu guri ardiesteaz eguiazco urrikia, Andrea, placer baduçu,
Othoizten çaitugu ardiesteaz Eliça Sainduari eta guirichtino populu guciei bakea eta batasuna.
Othoizten çaitugu ardiesteaz gure Aita Saindu, çure cerbitçari, N. I., eta gure aphezpicuei, eta Eliça guciari gracia dibinoaren airea,
Othoizten çaitugu ardiesteaz guri eta guirichtino Printce guciei bakea, eta osasuna, eta exaiei beheramendua,
Othoizten çaitugu ardiesteaz fidelen Arima defuntu guciei bethierereco errepausa,

Entçun gaitçatçu.

O Yaincoaren Ama,
Yaincoaren bildoxa, ceinac khentcen baititutçu munduaren bekhatuac, barkha dietçagutçu, Yauna,
Yaincoaren bildoxa, ceinac khentcen baititutçu munduaren bekhatuac, entçun gaitçatçu.
Yaincoaren bildoxa, ceinac khentcen baititutçu munduaren bekhatuac, urrical gakizkitçu.
Yauna, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, urrical gakizkitçu.
Yauna, urrical gakizkitçu.
Yesu-Christo, adi gaitçatçu.
Yesu-Christo, entçun gaitçatçu.

*Othoitz eguin deçagun.*

O YAUNA! othoizten çaitugu ahalic humilkiena, çure graciaren hedatceaz gure bihotcetarat; gu, ceinec, Ainagueruaren erranaz, eçagutu baitugu Yesu-Christo çure Semearen incarnacionea, hel gaiten haren pasionearen eta haren heriotcearen merecimenduez bizteco loriara, Yesu-Christo Yaun beraren fagorez. Halabiz.

---

## AZPIRACIONE DEBOTAC

*Comunione ondocotçat, eta noiz nahi denecotz.*

ENE Yesus eztia, egundainotic ekharri daroztaçun amodioa gatic, eguidaçu gracia maita çaitçadan nere bicitce gucian ceruan amodioa amodioarentçat bihur dieçadaçuntçat.

O ene Yauna, ene Yaincoa, eta ene Aita! nola ecin bainaiteke çu gabe, eta hala ecin duket deusen nahiric,

eta ecin deusic obra deçaket çu gabe; nola çuc sustengatcen baitituçu ene içaitea eta ene sustantcia, sustenga çaitçu halaber eta bethe ene penxamenduac, eta ene accione, guciac ez deçadantçat penxa, ez erran, ez deus ere eguin çure arabera baicen.

O Yaincoa, amodiozco eta ontasunezco Yaincoa! eguidaçu gracia, çu ceronen amodio gatic çuretçat bici nadin çure-ganic eta çure baithan bici naicenaz gueroz.

Ene Salbatçaile maitea, çu çure Aitarena çaren beçala, eguin naçaçu ni ere gucia çurea.

Ene Yauna eta ene Yaincoa, cer desira ahal deçaket çutaz campoan?

Yesus, ceruco eta lurreco amodioa, noiz içanen naiz osoki gucia çurea, çu çure Aitarena çaren beçala?

Aita misericordiazcoa; eguin naçaçu çure Semeac merecitcen duen beçalacoa, eta çure Izpiritu Sainduac desiratcen duen beçalacoa.

Ene biciaren Yaincoa, noiz hilen

naiz nere baithan, osoki çure baithan bicitceco ?

Ene Yaincoa, har naçaçu ceronec, ez dakidanaz gueroz nola eman behar natçaitçun.

Ene Yaincoa, baldin guerthatcen baçait deus ere nahi içaterat çu baicic, orai beretic ukho eguiten diotet, goraki aithortcen dut ez dudala deus ere irabazteco ez galtceco çure ondoan.

O ene arimaco Yaincoa ! ez deçaçula permeti guehiago içan eta bici nadin, çurea, ez içatecotz, çurea naicen beçala, ez çutaz bici naicen beçala.

Ez dut nahi beguiric çuri beguiratceco baicic, ez beharric çure aditceco baicic, ez mihiric çutaz mintçatceco baicic, ez bihotcic çure samaritatceco baicic, ez escuruneric çure cerbitçatceco baicic, ez oinic çure bilhatceco baicic, ez gorphutcic çuri ofrendatceco baicic, ez biciric çuri sacrificatceco baicic.

Amodiozco Yaincoa, indaçu caritatea ; Yainco guiçon eguina, indaçu humiltasuna.

Yainco gucia izpiritua, indaçu garbitasuna.

Puchancia, infinitua, borhitz çaçu ene flakecia ; çuhurtcia eternala, argui çaitut ene ilhumbeac; ontasun pare gabea, barkha dietçakidatçu ene maleciac.

Ontasun infinitua, berandu éçagutu çaitut ; ontasun pare gabea, berandu maitatu çaitut.

Çu maite ez çaituenac, cer maitatcen du? çu admiratcen ez çaituenac, cer admiratcen du?

Maitatu nahi nabiz, ez nere gatic, bainan bai ceren çurea naicen ; içanen dut artha nere presunaz, ceren çuc nahi duçun, eta ceren çuc manatcen dautaçun.

Dohaxuago estimatcen naiz çure dohaxutasunean, ecen ez dohacabe ene miserian ; çure içateac emaiten dautan contentamenduac, haguitz garhaitcen du ene içateac emaiten dautan desgustua. Ene Yaincoa, içan çait

beraz bethi çarena, eta nitaz eguiçu bertce bat.

Çuri eta çure baithan, çutaz eta çuretçat diren, ene Yaincoa gauça guciac.

Ordena çaçu munduaz placer duçun beçala ; eguiçu nitaz eta çure creatura guciez, placer duçun gucia ; altcha çaçu, behera çaçu, ceri çaçu senda çaçu, gastiga çaçu, errecompenxa çaçu. Içan çaite placer duçun beçalacoa Aingueruaren eta guiçonen alderat, ceruan, lurrean, ixasoan, demboran, eta eternitatean, eta lekhu gucietan ; eta bethi aithortuco dut çure probidentcia dibinoa, eta bethi çure borondatean egonen naiz, ene arimaren parabisuan beçala, sustengatcen dudala gucien alderat, eta gucien contra, eguia segur hori ; ecin eguin deçakeçula nic nahi dudana baicen, ceren nahi baititut çuc eguinen ditutçun guciac.

Yaincoaren borondatearekin conformatcea, bide labur bat da, gu berthute handi bate-

la seculan permetituco deusetan ere trompatuac içan gaitecen. Yesu-Christo, çuhurra eta yakinxuna cen arren, eta faltaric ecin eguin deçakena, hala ere bethi Aitaren borondatea eguin nahi çuen. Yakin çaçu ecin faltaric eguin deçakeçula, Yaincoaren amorea gatic bertceren borondatea eguiten duçuno, eta bereciki çure baithan podore duten presunena, Yaincoa ofenxatua ez den gauça gucietan. Duçun bada hitzcuntça bat beçala, bethi erran :

Ene Yaincoa, eguin bedi çuc placer duçun gucia, eta çuc placer duçun beçala.

Edo Youdoni Pauloc beçala :

Ene Yaincoa, cer placer duçu eguin deçadan ?

Ene Yaincoa, çure-ganat uzten ditut nere gorphutça, arima, onthasunac, ohoreac, bicia eta heriotcea, disposa deçaçuntçat dakiçun beçala, eta placer duçun beçala.

Erraçu oraino Dabitekin :

Ene Yaincoa, çurea naiz.

Eta bereciki erraçu Yesu-Christo bere hagonian erran dueua :

Aita, eguin bedi çure borondatea, eta ez enea.

Eta hala irakhaxi darotçu *Pater noster*rean ere :

Eguin bedi çure borondatea ceruan beçala lurrean ere.

---

## EXEMPLU

*Eder bat Guiçon pobre batec Yaincoaren borondatearekin çuen conformitatearen gainean.*

BERTCE aldiz, Erroman cen Dotor theologal fama handitaco bat, ceina çortci urthe bethez egotu baitcitçayon othoitcez Yaincoari arren causi araz cioçon guiçon bat, ceinac irakhax ahal cioçoken cein cen ceruco bideric laburrena. Egun batez, hainitz beroki bere othoitcean çagoelaric, entçun çuen boz bat erraiten cioela : *Oha*

*Yondoni Petriren Eliçara, eta athe sainduan causituco dut hic desiratcen ducan guiçona.* Yoaten da berehala Dotor hori Eliça hartarat, eta causitcen du athe sainduan pobre escale bat, çauriz gucia bethea eta arropa tchar batçuec soinean; eta erraiten dio Dotorac: Yaincoac egun on diçula, adichkidea.

Pobreac ihardesten dio: Yauna, ez dut gogoan egundaino egun gaichtoric içaturic.

Dotorac erraiten dio: Adichkidea, desiratcen darotçut bicitce dohaxu bat.

Pobreac ihardesten dio: Yauna, ez naiz egundaino dohacabe içatu.

Dotorac oraino hobeki frogatcea gatic, erraiten dio: Adichkidea, Yaincoac diçula gracia çure desira gucien complitceco.

Pobreac ihardesten dio: Yauna, ez dut errencuratceco suyetic, gauça guciac nere gogoara aribatcen çaizkidanaz gueroz.

Dotorac erraiten dio: Adichkidea, nola bada ahal çaitezke horren do-

haxu, estatu miserable hortan aguertcen çarenaz gueroz? Othoitz eguiten darotçut, minlça çakizkit clarkiago nic galdeguin darozkiitçudan gaucen gainean.

Pobreac ihardesten dio: Axeguin dut, Yauna emanen darotçut satisfaccione. Erran dautaçu egun ona desiratcen darotaçula, ihardexi darotçut ez dudala gogoan egundaino egun gaichtoric içaturic, ceren hainitz bainaiz content naicen estatuan, Yaincoac hala nahi içan duenaz gueroz; eta ene dohaxutasuna heldu da naicen condicionean content içaitetic, eta munduaz casuric ez eguitetic. Nic mesprečatcen ditut munduco intresac, ohoreac, axeguinac, eta placerac: hetan bere bihotçac emanac dituzten yendeac, fortuna onac alegueratcen ditu, eta fortuna gaichtoac tristatcen; bainan nic neure desirac ceruco Aitaren baithan emanac ditut, ceinac gobernatcen baititu mundu huntan eguiten diren gauça guciac. Handic erraiten dut ez

naicela egundaino dohacabe içatu, deus ere arribatcen ez çaitanaz gueroz neure nahiaren arabera baicen. Baldin goceac penatcen banau, Yaincoa laudatcen dut probidentcia guciaren Aita beçala ; baldin hotçac, beroac, elhurrac eta cein nahi den dembora gaichtoc presatcen banaute, orobat Yaincoa lorificatcen dut : baldin mesprecatua banaiz, benedicatcen dut haren Mayestate dibinoa, ceren segur bainaiz Yaincoaren nahitic edo permisionetic direla gauça guciac ; eta harec eguiten dituen gauçac, ecin ditezkela onac baicen. Hargatic alegueraki errecibitcen ditut, Aita on baten ganic heldu direnac beçala ; eta nola ez baitut deus nahi harec placer duena baicen, handic erraiten dut etçaitala deus ere guerthatcen neure desiren arabera baicen. Segur naiz mundu hunetaco dohaxutasuna dagoela gure borondatea Yaincoaren borondatearekin conformatcean, ecen haren borondatea ecin diteke ona eta yustua baicen, eta gauça

guciac eguin detçake guc deusic ecin deçakegun lekhuan. Hargatic ez dut bertce istudioric eguiten Yaincoaren borondatearekin conformatcecoric baicen ; eta ez dut bertce artharic harec placer duen gucia bihotz osoz nahi içateco baicen : eta manera hortan, ecin naiteke dohacabe ; harec nahi duena, nic ere nahi dudanaz gueroz ; eta harec nahi ez duena, nic ere nahi ez dudanaz gueroz.

Dotorac erraiten dio : Adichkidea, çuc erran darozkidatçun gauça horiec, guciac onac dire ; bainan çure erresinacione guciarekin, erradaçu, othoi, cer eguin cineçaken baldin Yaincoac damnatu nahi bacinitu ?

Pobreac ihardesten dio : Yakin çaçu Yauna, baitudala bi beso choil indar handitacoac ; bat da humiltasuna, ceinarekin osoki sumetitu bainatçayo Yaincoari ; eta bertcea da caritate bero bat, ceinaz maitatcen baitut Yaincoa neure ahal guciaz : eta baldin damnatu nahi banindu, bi beso hetaz besarca

naiz nere baithan, osoki çure baithan bicitceco ?

Ene Yaincoa, har naçaçu ceronec, ez dakidanaz gueroz nola eman behar natçaitçun.

Ene Yaincoa, baldin guerthatcen baçait deus ere nahi içaterat çu baicic, orai beretic ukho eguiten diotet, goraki aithortcen dut ez dudala deus ere irabazteco ez galtceco çure ondoan.

O ene arimaco Yaincoa ! ez deçaçula permeti guehiago içan eta bici nadin, çurea, ez içatecotz, çurea naicen beçala, ez çutaz bici naicen beçala.

Ez dut nahi beguiric çuri beguiratceco baicic, ez beharric çure aditceco baicic, ez mihiric çutaz mintçatceco baicic, ez bihotcic çure samaritatceco baicic, ez escuruneric çure cerbitçatceco baicic, ez oinic çure bilhatceco baicic, ez gorphutcic çuri ofrendatceco baicic, ez biciric çuri sacrificatceco baicic.

Amodiozco Yaincoa, indaçu caritatea ; Yainco guiçon eguina, indaçu humiltasuna.

Yainco gucia izpiritua, indaçu garbitasuna.

Puchancia, infinitua, borhitz çaçu ene flakecia; çuhurtcia eternala, argui çaitut ene ilhumbeac; ontasun pare gabea, barkha dietçakidatçu ene maleciac.

Ontasun infinitua, berandu eçagutu çaitut; ontasun pare gabea, berandu maitatu çaitut.

Çu maite ez çaituenac, cer maitatcen du? çu admiratcen ez çaituenac, cer admiratcen du?

Maitatu nahi nabiz, ez nere gatic, bainan bai ceren çurea naicen; içanen dut artha nere presunaz, ceren çuc nahi duçun, eta ceren çuc manatcen dautaçun.

Dohaxuago estimatcen naiz çure dohaxutasunean, ecen ez dohacabe ene miserian; çure içateac emaiten dautan contentamenduac, haguitz garhaitcen du ene içateac emaiten dautan desgustua. Ene Yaincoa, içan çaite

beraz bethi çarena, eta nitaz eguiçu bertce bat.

Çuri eta çure baithan, çutaz eta çuretçat diren, ene Yaincoa gauça guciac.

Ordena çaçu munduaz placer duçun beçala ; eguiçu nitaz eta çure creatura guciez, placer duçun gucia ; altcha çaçu, behera çaçu, ceri çaçu senda çaçu, gastiga çaçu, errecompenxa çaçu. Içan çaite placer duçun beçalacoa Aingueruaren eta guiçonen alderat, ceruan, lurrean, ixasoan, demboran, eta eternitatean, eta lekhu gucietan ; eta bethi aithortuco dut çure probidentcia dibinoa, eta bethi çure borondatean egonen naiz, ene arimaren parabisuan beçala, sustengatcen dudala gucien alderat, eta gucien contra, eguia segur hori ; ecin eguin deçakeçula nic nahi dudana baicen, ceren nahi baititut çuc eguinen ditutçun guciac.

Yaincoaren borondatearekin conformatcea, bide labur bat da, gu berthute handi bate-

la seculan permetituco deusetan ere trompatuac içan gaitecen. Yesu-Christo, çuhurra eta yakinxuna cen arren, eta faltaric ecin eguin deçakena, hala ere bethi Aitaren borondatea eguin nahi çuen. Yakin çaçu ecin faltaric eguin deçakeçula, Yaincoaren amorea gatic hertceren borondatea eguiten duçuno, eta bereciki çure baithan podore duten presunena, Yaincoa ofenxatua ez den gauça gucietan. Duçun bada hitzcuntça bat beçala, bethi erran :

Ene Yaincoa, eguin bedi çuc placer duçun gucia, eta çuc placer duçun beçala.

Edo Youdoni Pauloc beçala :

Ene Yaincoa, cer placer duçu eguin deçadan ?

Ene Yaincoa, çure-ganat uzten ditut nere gorphutça, arima, onthasunac, ohoreac, bicia eta heriotcea, disposa deçaçuntçat dakiçun beçala, eta placer duçun beçala.

Erraçu oraino Dabitekin :

Ene Yaincoa, çurea naiz.

Eta bereciki erraçu Yesu-Christo bere hagonian erran duena :

Aita, eguin bedi çure borondatea, eta ez enea.

Eta bala irakhaxi darotçu *Pater noster*rean ere :

Eguin bedi çure borondatea ceruan beçala lurrean ere.

---

## EXEMPLU

*Eder bat Guiçon pobre batec Yaincoaren borondatearekin çuen conformitatearen gainean.*

BERTCE aldiz, Erroman cen Dotor theologal fama handitaco bat, ceina çortci urthe bethez egotu baitcitçayon othoitcez Yaincoari arren causi araz cioçon guiçon bat, ceinac irakhax ahal cioçoken cein cen ceruco bideric laburrena. Egun batez, hainitz beroki bere othoitcean çagoelaric, entçun çuen boz bat erraiten cioela : *Oh*

*Yondoni Petriren Eliçara, eta athe sainduan causituco dut hic desiratcen ducan guiçona.* Yoaten da berehala Dotor hori Eliça hartarat, eta causitcen du athe sainduan pobre escale bat, çauriz gucia bethea eta arropa tchar batçuec soinean; eta erraiten dio Dotorac: Yaincoac egun on diçula, adichkidea.

Pobreac ihardesten dio: Yauna, ez dut gogoan egundaino egun gaichtoric içaturic.

Dotorac erraiten dio: Adichkidea, desiratcen darotçut bicitce dohaxu bat.

Pobreac ihardesten dio: Yauna, ez naiz egundaino dohacabe içatu.

Dotorac oraino hobeki frogatcea gatic, erraiten dio: Adichkidea, Yaincoac diçula gracia çure desira gucien complitceco.

Pobreac ihardesten dio: Yauna, ez dut errencuratceco suyetic, gauça guciac nere gogoara aribatcen çaizkidanaz gueroz.

Dotorac erraiten dio: Adichkidea, nola bada ahal çaitezke horren do-

haxu, estatu miserable hortan aguertcen çarenaz gueroz? Othoitz eguiten darotçut, mintça çakizkit clarkiago nic galdeguin darozkitçudan gaucen gainean.

Pobreac ihardesten dio: Axeguin dut, Yauna emanen darotçut satisfaccione. Erran dautaçu egun ona desiratcen darotaçula, ihardexi darotçut ez dudala gogoan egundaino egun gaichtoric içaturic, ceren hainitz bainaiz content naicen estatuan, Yaincoac hala nahi içan duenaz gueroz; eta ene dohaxutasuna heldu da naicen condicionean content içaitetic, eta munduaz casuric ez eguitetic. Nic mespreçatcen ditut munduco intresac, ohoreac, axeguinac, eta placerac: hetan bere bihotçac emanac dituzten yendeac, fortuna onac allegueratcen ditu, eta fortuna gaichtoac tristatcen; bainan nic neure desirac ceruco Aitaren baithan emanac ditut, ceinac gobernatcen baititu mundu huntan eguiten diren gauça guciac. Handic erraiten dut ez

naicela egundaino dohacabe içatu, deus ere arribatcen ez çaitanaz gueroz neure nahiaren arabera baicen. Baldin goceac penatcen banau, Yaincoa laudatcen dut probidentcia guciaren Aita beçala ; baldin hotçac, beroac, elhurrac eta cein nahi den dembora gaichtoc presatcen banaute, orobat Yaincoa lorificatcen dut : baldin mespreçatua banaiz, benedicatcen dut haren Mayestate dibinoa, ceren segur bainaiz Yaincoaren nahitic edo permisionetic direla gauça guciac ; eta harec eguiten dituen gauçac, ecin ditezkela onac baicen. Hargatic algueraki errecibitcen ditut, Aita on baten ganic heldu direnac beçala ; eta nola ez baitut deus nahi harec placer duena baicen, handic erraiten dut etçaitala deus ere guerthatcen neure desiren arabera baicen. Segur naiz mundu hunetaco dohaxutasuna dagoela gure borondatea Yaincoaren borondatearekin conformatcean, ecen haren borondatea ecin diteke ona eta yustua baicen, eta gauça

guciac eguin detçake guc deusic ecin deçakegun lekhuan. Hargatic ez dut bertce istudioric eguiten Yaincoaren borondatearekin conformatcecoric baicen ; eta ez dut bertce artharic harec placer duen gucia bihotz osoz nahi içateco baicen : eta manera hortan, ecin naitcke dohacabe ; harec nahi duena, nic ere nahi dudanaz gueroz ; eta harec nahi ez duena, nic ere nahi ez dudanaz gueroz.

Dotorac erraiten dio : Adichkidea, çuc erran darozkidatçun gauça horiec, guciac onac dire ; bainan çure erresinacione guciarekin, erradaçu, othoi, cer eguin cineçaken baldin Yaincoac damnatu nahi bacinitu ?

Pobreac ihardesten dio : Yakin çaçu Yauna, baitudala bi beso choil indar handitacoac ; bat da humiltasuna, ceinarekin osoki sumetitu bainatçayo Yaincoari ; eta bertcea da caritate bero bat, ceinaz maitatcen baitut Yaincoa neure ahal guciaz : eta baldin damnatu nahi banindu, bi beso hetaz besarca

neçake ; eta hain yunt atchic neçake, non yoan ninteken lekhu gucietarat neurekin tira baineçake ; eta non nahi den nahiago nuke içan Yaincoarekin, ecen ez parabisuan Yaincoa gabe.

Dotor theologo hori espantitcen da guiçon pobre horren errepustaz, eta yuyatcen du hura dela hari ceruco bideric laburrena irakhaxi behar dioen guiçona ; eta oraino hobeki nahiz içan arguitua doctrina eder hartaz, erraiten dio Dotorac : Eta, adichkidea, nondic ethorri çare lekhu hunetarat ?

Pobreac ihardesten dio : Yauna heldu nahiz Yaincoa ganic.

Dotorac erraiten dio : Non causitu duçu Yaincoa ?

Pobreac ihardesten dio : Causitu dut creaturac utci ditudanean.

Dotorac erraiten dio : Eta non utci duçu Yaincoa ?

Pobreac ihardesten dio : Utci dut bihotçac garbi eta borondate ona duten yendeetan ; hura da Yaincoari lakhet-

cen çayon lekhua, eta hari agradatcen çayon egoitça.

Dotorac erraiten dio : Oraino, adichkidea, erradaçu, othoi, nor çaren çu ?

Pobreac ihardesten dio : Nor nahi den naicen, Yauna, hain content naiz neure condicioneaz, non ez baineçake khambia munduco Erregueric puchantenarekin ; bere buruari ungui manatcen dakiena da Erregue.

Dotorac erraiten dio : Eta non da çure erresúma ?

Pobreac ihardesten dio : Cerua da ene erresuma, bai eta ene ariman ere ceinetan idukitcen baititut neure pasioneac azpian, arroçoinari obeditcen diotela, eta arroçoinac Yaincoari.

Dotorac azkenean erraiten dio : Eta nola ethorri çare perfeccione horretarat, eta non ikhasi ditutçu gauça horiec guciac ?

Pobreac ihardesten dio : Yauna, ethorri naiz guiçonen comberxacioneari ihez eguinez, eta Yaincoari othoitcez egonez. Ene artharic han-

diena da neure buruari bortcha eguitea, Yaincoaren borondatearekin enearen yuntatceco, eta Yaincoaren borondatearekin dudan conformitate horretan ikhasi ditut gauça horiec guciac.

---

## GUIÇONAREN

### LAU AZKEN FINAC.

---

GUIÇONAREN lau azken finac dire : Heriotcea, Yuyamendua, Parabisua, eta Ifernua. Ez da bide seguragoric guirichtino bat bere salbamenduaren eguiteco eguin bidetarat erakhartceco, horietan maiz penxatcea baino. Iracur çaçu afal ondo guciez aldian penxamendu horietaric bat, çure famila guciaren artean, eta arabil gogoan ahalic guehiena. Penxamendu sainduac den gutiena izpirituan sartcen badire han gueldítcen dire, eta khachetac ezcoaren gainean eguiten duen beçala impresione handi bat eguiten dute.

*Lehembicico Penxamendua,*

HERIOTCEAZ.

1. Guirichtino guisa bici ez den guirichtino batec herioaren beldur içateco du. Helas! cer khondu bihur bicitce mundano baten ondoan, bere inclinacione gaichtoen eta bere pasioneen arabera bici içatu ondoan? Cer dolore ez du behar içan halacoac bere salbamenduaren eguiteco içatu dituen moyanez ez baliatu içateaz, eta hetaz eguin duen mesprecioez Yaincoaren exai hiltceaz? Oi, heriotcearen tristea! ô memento tristea, demboraco placerac finitcen dituen, eta eternitateco pena icigarriac hasten dituena!

2. Cer nahi guinuke eguin içatu guinuken heriotceco orenean garenean? Eguin deçagun beraz orai orduan eguina causitu nahi guinukena. Ez da demboraric galtceco; memento bakhotcha ahal diteke gure biciaren azkeneco mementoa: cembatenaz guehia-

go bici içatu baitçare, hambatenaz gare thombarat hurbilago.

3. Cer yuyamendu eguinen dugu lurreco onthasunez, kitatu beharco dituguneau? Har deçagun orai conseilu herioa ganic; hura fidela da, ez gaitu trompatuco. Certaraco othe dire orduan munduco axeguinac, ohore, edertasun, urre eta cilhar hec? Cer yuyatcen da heriotcean hetaz? Bician hekien aparantciac trompatcen gaitu, bainan heriotcean gauçac diren beçala ikhusten dire.

Guiçon biciac mundua estimatcen du, bainan hiltcerat dohanac mesprecatcen du. Cein sinhexi behar dugu? Guiçon bicia, ala hiltcerat dohana? Ala mundua deus guti idurituco baitçaitçu heriotceco orenean, arguituco gaituen arguiaren bichtan! Bainan, helas! ez dugu içanen demboraric gure enganamenduen erremediatceco.

Penxa çaçu orai, berehala hil behar bacinu cerc eman lieçaçuken beldurtasunic handiena. Emaçu beraz

orai danic berehala behar den ordena, eta usa çaite egun danic, accione bakhotcharen eguiten hura eguin eta berehala hil behar bacinu beçala.

Menturaz herioa urhax batean dut, guirichtino batentçat ez da biharamunic.

*Bigarren Penxamendua,*

AZKEN YUDICIOAZ.

1. Egun batez Yesu-Christoren tribunalaren aitcinean aguertu behar naiz, eguin dudan unguiaren edo gaizkiaren arabera yuyatua içateco: ez da Ebanyelioan eguia claragoric hori baino. Sinhesten dut eguia hori hain segurki, nola hilen atçartceco trompeta yotcen yadanic aditu banu.

2. Helas! cer erranen dugu, hambat penxamendu gaichto, hambat accione gaichto, eta hambat gracia mesprečatu gure beguien aitcinean ikhusten ditugunean? O egunaren terriblea, Yaunaren coleraren eguna, ceinetan khondatuac içanen baitire hax bartce-

ric mendreenetarainocoac! Yustuac berac ere nekhez yustutçat aguertuco dire, helas! cer içanen da beraz bekhatoreez?

3. Cer sententciaren ustea ahal duke Yainco colerazco baten ganic, bekhatoros penitentciaric eguin ez duen batec? O arrasta erdiragarria!

Çoazte, madaricatuac, seculacotz sutarat, ceina baitago preparatua debruarentçat, eta haren aingueruentçat. Eta, Yauna, noraco dire çure malediccionea eman dioçuten dohacabehec? Norat nahi duçu erretira ditecen çure ganic urruntcen direla? Non causi ahal diteke hain lekhu gaichtoric? Yaincoaren presentciatic desterratua içaitea, Yaincoaz madaricatua içatea, ah! çorioaren tristea!

Imachina çaite orai çarela Yesu-Christoren tribunalaren aitcinean, eta iracur çaçu, eta penxa ongui cerc eman lieçaçuken ahalgueric handiena, eta orhoit çaite yuyamenduco egunean bekhaturic secretuenac publi-

toki hartarat ecin yoanez, Aita Sainduec nahi içan dute eguin Yesu-Christoc gurutceaz cargatua, Olibetaraco bidean eguin cituen phausuen figura bat, emaiten direlaric Elicetan distanciatic distanciara phausu hec errepresentatcen dituzten erretaula edo gurutce balçuec eta tokiaren beraren gainean bere Estacioneac eguiten dituztenei, indulgentcia handi hec berac eman dituzte, eratchiki ondoan erretaula eta gurutce hauyer; bainan Estacioneac erretaula eta gurutce heyen beraren aitcinean eguinez.

Aitcinagoco Aita Sainduen gainera, Pio VI garrenac hedatu nahi içan du debocione hori, capereten emaitea permetitcerainocoan Estacione horiec.

Ikhussia da debocione hori, Yesu-Christoc gure salbamenduco eguin dituen phausu odolstatuen conxideratcerat, harentçat den loriosena, haren Ama Biryinarentçat den gogoracoena, bekhatuaren higuintcerat, nekheen

yassaiterat, eta Yesu-Christoren amodiorat bihotcen erakhartceco den abantailosena dela.

Estacioneac eguin aldi bakhotchean hainitz indulgentcia irabazten da ; baiñan bat bederac osobat baicen ez beretçat. Aita Sainduen chedea da Purgatorioetaco arimei applica dazkioten ahalaz, Benoît XIII garrenac erraiten daucun beçala.





NORC BERAC

# GURUTCEAREN BIDEA

EGUITECO MOLDEA.

*Hartarat preparatceco Sacramendu Sainduaren aitcinean eguiteco Othoitça.*

O YESUS, ene Salbatçaile dibinoa! huna non naicen ahuspez çure oinetan, enetçat eta çure gracian hil direnentçat misericordia galdetceco. Phar-teliar eguin gaitçatçu, othoi, hec eta ni çure pasionearen merecimendu içarigabecoetan. Nigarrezco eta auhenezco bide huntan hain urriki minaz

hunki çaçu ene bihotça, non ekharria içanen bainaiz bici huntaco nekhe gucien gogotic yasaiterat çu gatic.

Eta çuc, Gurutcearen bidea lehenic irakaxi daucuçuna, Maria Saindua, eguiçu othoitz Trinitate Sainduac munduan içaiten dituen affruntuen erreparacionetan onhex detçan hemen Izpiritu Sainduac inspiratuco daitan dolorezco eta amodiozco sentimenduac.





## 1co ESTACIONEA.

*Yesusen hiltcerat condenatua.*

CONSIDERA çaçu hemen Yesusec cein amulxuki harcen duen arrasta bat hain inyustua, eta orhoit çaite ez duela Pilatusec condenatu Yesus, bainan çuc eta bekhatoros guciec galdetcen guinduela haren heriotcea. Erroçu beraz urrikiric minenarekin :



## IIen ESTACIONEA.

*Yesus gurutceaz cargatua.*

**CONSIDERA çaçu hemen Yesusec cein bihotz onez hartcen duen bere heriotceco tresna latzgarria bere soin sarraskituen gainean. Horrela irakaxi nadi daucu nola hartu eta ekharri behar ditugun, nondic eta noren ganic nahi heldu çaizcun gurutceac.**

O Yesus amulxua! ez cinduen çuc ekharri behar gurutce hori, bainan nic bekhatoros dohacabea. Emadaçu behar dudan animoa, çure exemplura, bici huntaco nekheac eta axecabeac errencuratu gabe yasaiteco; Aita on beçala çure Probidentcian nahi içan duçunaz gueroz heyen bidez eguin deçadan bekhatuen satisfaccionea, eta ardiex çure loria.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## III^en ESTACIONEA.

*Yesus eroria gurutcearen pean.*

CONSIDERA çaçu Yesus Olibetaraco bidean. Açote eta arrantcezco khoro crudelec hambat odol galaraci cioten, non flacatua erori baitcen gurutce dorphearen azpian; eta ez da altchatcen tratamenduric gogorrenac pacientciaric handienarekin yasanic baicen. Hola nahi du eguin, eta guri irakhaxi

gure eroricoen, eta guciz bathayoco gracia galaraci daroculen bekhatuen satisfaccionea eguiten.

O Yesus ona! eguiçu, othoi, orhoit nadin bethi biholzminic handienarekin ene haurtasuneco eta gaztetasuneco bekhatuez, eta damuric handienarekin hurbilnadin maiz cofesiorat, bethi eta hobekiago borratceco ene iragan huxac penitentciazco sacramenduan.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## IVen ESTACIONEA.

*Yesusec errecontratcen du bere Ama.*

CONSIDERA çaçu ceiñ doloros behar cen bai Seme Yainco harrentçat; bai Ama hain maitearentçat elkhar errecontratcea, Seme maite hura gatchtaguin batçuez hain ixuski herrestatua den demboran, populu handi baten bistan. Hura ikhustean cer dolore eta hersturetan ez cen aurkhitu haren bihotça! Nahi çukeyen athera burrego

heyen escuetaric; ordean badaki hala behar dela eguin gure Salbamendua. Guciac harekin sacrificaturic, yarraikico çayo beraz azken haxeraino.

O dolorezco Ama! ardiex dieçaguçu mendi sainduraino Yesu Christo seguitu cinuen amodio hura, eta gurutcearen oineraino eracuxi cinuen curaye hura; deusec ez naçan seculan urruntaraz Yaunaren leguearen bidetic, eta apartaraz Yesu-Christo ganic.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## Vᵉⁿ ESTACIONEA.

*Simon laguntcen du gurutcearen khar-reyatcen.*

CONSIDERA çaçu Yesu-Christoren gu ganaco ontasuna. Mundua yasaiten duenean ez du escas indarra gurutcearen yasaiteco, bainan nahi daucu irakhaxi gure lagunetaric paraitceco içanen ditugunen yuntatcen haren sofricarekin.

O Yesus, ene Yauna! cerorrec yasanic gurutceric dorpheena, arinena uzten derotaçu niri, eguidaçu, othoi, gracia neure buruaren hain exai ez içaiteco, non ez baidut ekharri nahico. Hitz datçut, Yauna, çure amoreagatic, eta çure misericordiaz baliatceco yasanen ditudala errencuratu gabe neure lagunaren ganicaco escasia eta inyurio guciac.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## VIen ESTACIONEA.

*Emacume debot batec chukhatcen dio beguithartea.*

CONSIDERA çaçu soldado soka hura cilhaturic, bere Nausi dibinoaren gana hurbiltcen den emacume horren animoa. Aurkhitcen du thuz, herrauxez, icerdiz eta odolez sunxitua. Hunkitua nigarretaraino, amodioac emaiten du beldur guciez gorago; hurbiltcen da

Yesusen ganat, eta chukatcen dio Aingueruec eta Sainduec ikhararekin baicen beira ez dioçoketen beguitharte deseguin hura.

O Yesus gure Nausi eta Erreguea! emadaçu, othoi, emacume saindu horren imitatceco berthutea, munduco consideracione guciac osticaturic goraki eracux deçadan neure fedea mundu guciaren bistan.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## VII^{ea} ESTACIONEA.

***Yesus erortcen da bigarren aldicotz.***

CONSIDERA çaçu Bictima saindu horren estatua, hedatua bere sacrificioco egurraren azpian, eta pharatua bere burregoen tratamendu crudelei: bigarren erorico hau Yesu-Christoc guretçat duen amodio handiaren froga berri bat da. Nahi daucu eracuxi berriz bekhatuan errortceac ez darocula

exiaraci behar, bainan bai erneago atchicaraci.

O Yesus ene Salbatçailea! barkha dietçadaçu, othoi, berriz ere ene bekhatuac; borthitz neçaçu gure graciaz bekhatuzco occasioneen contra; emadaçu, othoi, atçarlaçuna neure buruaren gainean, fermu içan nadin çure gracian.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## VIIIea ESTACIONEA.

*Yesusec consolatcen ditu Israelgo presuna doloratu darraizconac.*

MIREX çaçu Yesu-Christoren ynerostasuna. Bere doloreez casuric eguin gabe gucia hartua da gure Salbamenduaz; erraiten badiote ez deçaten nigarric eguin haren gainean; bainan bere eta bere ondocoen gainean. Ah! horlan eracusten daucu gure doloreac

estimu guti lukeela, baldin gure bekatuez beçala gure lagunencz nigar eguiten ez badugu.

O Salbatçailo maitea! emoçu, othoi, ene bihotçari ene lagunen Salbamenduaren nahi kharxu bat, bekhatoreen conberxionearentçat othoitcean auhenetan eta penitencian, kharxuki emanaraz neçakena, mereci deçadan çure conxolacionezco hitcen adicea heyekin.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## IX.ᵉⁿ ESTACIONEA.

*Yesus erortcen da hirur garren aldian.*

CONSIDERA çaçu Yesus heldua mendiaren gainera. Behatcen du bere exayen errabiac sacrificatu behar duen tokira., Içanen ciren bekhatuzco errechutec, sacramenduen profanacionec; eta haren graciac eta harén odola cembeitentçat alfer içanen ciren ikhusteac hersten eta transitcen du ha-

ren bihotça yasan behar dituen tormentec baino borthizkiago.

Consideracione horrec aurdikitcen du hain tristecía eta flakecia handian, non erortcen bait da bere hagonian beçala, beguithartеaz lurrerat.

O Yesus, amodioaren bictima ! onhex çaçu, othoi, hemen ene bihotz doloratuac, çure bihotça hola hersten duten ausarcia eta profanacioneez eguiten darotçun amanda onorablea ; emadaçu indarra icigarrekeria horien penitentciaric gogorrenez erreparatceco, eta eguidaçu gracia çu ganat bethicotz helaraz neçaketen beçala çure graciez baliatceco.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## X[en] ESTACIONEA.

*Yesus biluzten dute.*

CONSIDERA çaçu nolacoa cen Yesusen sofricaria burregoec bilbuci çutenean; arropac khentcearekin haren çauri guciac ideki eta sarrakistan emaiten dire, eta erreberitcen dute açotezco suplicioa. Cer dolore etcen harentçat, hambat eta halaco ikhustiarren bistian, estatu hartan aguertcea!

O Yesus saindutasunaren Yaincoa! gure guritasun tçar eta axeguin liçunez satisfaccione eguiteco uzten duçu çure burua hola biluzterat; ikhusgarri nigar eguingarri horren bistan ahalcatua; neure gorphutçari eguin ditudan mainez, cinki deliberatcen dut çure graciarekin batean, neure sensuac mortificatuz eguin detçakedan satisfaccione gucien eguiterat.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





# XIen ESTACIONÉA.

*Yesus Gurutceari itçatua da.*

CONSIDERA çaçu Yesu-Christo bere burregoei cein humilki pharatcen den! uzten ditu bere escu eta oinen itçacerat! batere errencuratu gabe; sentitcen ditu bere heçurrac yunturetaric atheratcen, bere çainac ethentcen, bere odola gurutcea behera yoaiten, bere bihotça egarriac erretcen, bere



## XIIen ESTACIONEA.

*Yesus hiltcen da guretcean.*

CONSIDERA çaçu Yesus hiltcen bi ohoinen artean, eta bere Yaincotasuna eracusten miraculuric handienez. Azken haxa eman duen pontuan, lurra ikharatcen da, harrocac erdiratcen, temploco beloa urratcen, iguzkia ilhuntcen, eta hilac hobietaric bizturic ilkhitcen. Horiec ikusiric, capitaina

obligatua da, bulharrac yotcen dituelaric, aithorcerat eguiazki hura Yaincoaren Semea cela.

O ene Salbatçaile maitea! ez deçaçula, othoi, permeti, creatura guciac çure heriotceaz doloratcen diren demboran, sendimendu gabe içan nadin eta esker gabe. Argui çaçu ene adimendua, phorrosca çatçu ene pasioneen gatheac, atçarraçu, othoi, ene fede lokharcatua, halaco moldez, non ez deçadan behinere biztatic gal gurutce horren gainean enetçat yasan tuçun tormenta icigarriac, eta hor emaiten darotaçun eracuspenez erreguela deçadan nere bicia heriotceraino.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## XIIIen ESTACIONEA.

*Yausten dute Yesus gurutcetic, eta emaiten bere Amaren escuetan.*

CONSIDERA çaçu Ama samur harren dolorea bere Semea hila ikhustean. Bere besoetan hartcen du depot sacratu hori; beguira dahoco beguitharte deseguin eta odolstatu hori; begui iraungui, escu eta oin cilhatu heyer. Yaincoac baicen ez deçake

obligatua da, bulharrac yotcen dituelaric, aithorcerat eguiazki hura Yaincoaren Semea cela.

O ene Salbatçaile maitea! ez deçaçula, othoi, permeti, creatura guciac çure heriotceaz doloratcen diren demboran, sendimendu gabe içan nadin eta esker gabe. Argui çaçu ene adimendua, phorrosca çatçu ene pasioneen gatheac, atçarraçu, othoi, ene fede lokharcatua, halaco moldez, non ez deçadan behinere biztatic gal gurutce horren gainean enetçat yasan tuçun tormenta icigarriac, eta hor emaiten darotaçun eracuspenez erreguela deçadan nere bicia heriotceraino.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## XIIIen ESTACIONEA.

*Yausten dute Yesus gurutcetic, eta emaiten bere Amaren escuetan.*

CONSIDERA çaçu Ama samur harren dolorea bere Semea hila ikhustean. Bere besoetan hartcen du depot sacratu hori; beguira dahoco beguitharte deseguin eta odolstatu hori; begui iraungui, escu eta oin cilhatu heyer. Yaincoac baicen ez deçake



## XIVen ESTACIONEA.

*Yesus emaiten dute hobian.*

CONSIDERA çaçu Yesusen gorphutça hobi hartan, eta orhoit çaite çurea orobat daitekela laster, eta çure arima yoanen dela Yaincoaren aitcinerat bere seculaco, çorion edo çorigaitceco arrastaren aditcerat.

O ene Salbatçaile dibinoa! heriotce on bat niri cobratceco, eta hartarat

preparatcen irakhasteco, hil çarenaz gueroz, ez deçaçula, othoi, permeti çure graciac alfer içan diten enetçat, ehorskitçu hobi hortan ene gaichtakeria guciac, eta ni baithan den creaturen ganaco yaidura gucia: ene bicia penitentcian eramanic eta berthutean fermu içanic mereci deçadan bethico çure loriaz goçatcea.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.

---

Solenelki eguiten denean gurutcearen bidea, edo Estacionea, Sacramendu Sainduaren aitcinean cantatcen da:

*O Crux, ave, spes unica!*
*Mundi salus et gloria:*
*Auge piis justitiam,*
*Reisque dona veniam.*

Eta guero apheçac iracurtcen du othoitça. *O Jesus*, etc., 3 plaman.

Estacionera yoaite gucietan cantatcen da ceremonia huni dahocon cantica pherxu bat, eta:

*Sancta mater istud agas :*
*Crucifixi fige plagas*
*Cordi meo validè.*

Estacione bakhotcharen bastean cantatcen du apheçac :

℣. Adoramus te, Christe, et benedicimus tibi.

℟. Quia per sanctam Crucem tuam redemisti mundum.

Guero belhaunicaturic erraten ditu *Othoitçac*, ondoan cantatcen du :

℣. Miserere nostrî, Domine.

℟. Miserere nostrî.

℣. Fidelium animæ, per misericordiam Dei.

℟. Requiescant in pace. Amen.

Estacioneen ondoan bihurtcenda gurutcea, cantatcen direlaric cembait cantica pherxu, eta sanctuarioan cantatcen dira seguidaco pherxuac :

℣. Adoramus te , Christe , et benedicimus tibi.

℟. Quia per sanctam Crucem tuam redemisti mundum.

O Yesus saindutasunaren Yaincoa! gure guritasun tçar eta axeguin liçunez satisfaccione eguiteco uzten duçu çure burua hola biluzterat; ikhusgarri nigar eguingarri horren bistan ahalcatua; neure gorphutçari eguin ditudan mainez, cinki deliberatcen dut çure graciarekin batean, neure sensuac mortificatuz eguin detçakedan satisfaccione gucien eguiterat.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## XIen ESTACIONÉA.

*Yesus Gurutceari itçatua da.*

CONSIDERA çaçu Yesu-Christo bere burregoei cein humilki pharatcen den! uzten ditu bere escu eta oinen itçacerat! batere errencuratu gabe; sentitcen ditu bere heçurrac yunturetaric atheratcen, bere çainac ethentcen, bere odola gurutcea behera yoaiten, bere bihotça egarriac erretcen, bere



## XII en ESTACIONEA.

*Yesus hiltcen da guretcean.*

CONSIDERA çaçu Yesus hiltcen bi ohoinen artean, eta bere Yaincotasuna eracusten miraculuric handienez. Azken haxa eman duen pontuan, lurra ikharatcen da, harrocac erdiratcen, temploco beloa urratcen, iguzkia ilhuntcen, eta hilac hobietaric bizturic ilkhitcen. Horiec ikusiric, capitaina



## XIIIen ESTACIONEA.

*Yausten dute Yesus gurutcetic, eta emaiten bere Amaren escuetan.*

CONSIDERA çaçu Ama samur harren dolorea bere Semea hila ikhustean. Bere besoetan hartcen du depot sacratu hori; beguira dahoco beguitharte deseguin eta odolstatu hori; begui iraungui, escu eta oin cilhatu beyer. Yaincoac baicen ez deçake

compreni ikhusgarri hori cer martyrio cen harentçat.

O Maria! ni naiz çure bihotzminaren causa, ene bekhatuec cilhatu dute çure bihotça Yesus gurutcean emaitearekin; bainan orhoit çaite, ô Maria! ene Ama eta ene bitbartecoa çarela Yaincoaren aintcinean; damuric minena dut içanaraci daitçudan doloreez, arnegatcen dut bekhatuari, hitz dautçut çure berthulei yarraikico naicela; çu baithan dut ene fidantcia: lagun naçaçu, othoi, orai eta ene heriotcean.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.





## XIVen ÉSTACIONEA.

*Yesus emaiten dute hobian.*

CONSIDERA çaçu Yesusen gorphutça hobi hartan, eta orhoit çaite çurea orobat daitekela laster, eta çure arima yoanen dela Yaincoaren aitcinerat bere seculaco, çorion edo çorigaitceco arrastaren aditcerat.

O ene Salbatçaile dibinoa! heriotce on bat niri cobratceco, eta hartarat

preparatcen irakhasteco, hil çarenaz gueroz, ez deçaçula, othoi, permeti çure graciac alfer içan diten enetçat, ehorskitçu hobi hortan ene gaichtakeria guciac, eta ni baithan den creaturen ganaco yaidura gucia : ene bicia penitentcian eramanic eta berthutean fermu içanic mereci deçadan bethico çure loriaz goçatcea.

Gure Aita, Agur Maria, Gloria.

---

Solenelki eguiten denean gurutcearen bidea, edo Estacionea, Sacramendu Sainduaren aitcinean cantatcen da:

*O Crux, ave, spes unica !*
*Mundi salus et gloria :*
*Auge piis justitiam,*
*Reisque dona veniam.*

Eta guero apheçac iracurtcen du othoitça. *O Jesus,* etc., 3 plaman.

Estacionera yoaite gucietan cantatcen da ceremonia huni dahocon cantica pherxu bat, eta :

*Sancta mater istud agas :*
*Crucifixi fige plagas*
*Cordi meo validè.*

Estacione bakhotcharen hastean cantatcen du apheçac :

℣. Adoramus te, Christe, et benedicimus tibi.

℟. Quia per sanctam Crucem tuam redemisti mundum.

Guero belhaunicaturic erraten ditu *Othoitçac*, ondoan cantatcen du :

℣. Miserere nostrî, Domine.

℟. Miserere nostrî.

℣. Fidelium animæ, per misericordiam Dei.

℟. Requiescant in pace. Amen.

Estacioneen ondoan bihurtcenda gurutcea, cantatcen direlaric cembait cantica pherxu, eta sanctuarioan cantatcen dira seguidaco pherxuac :

℣. Adoramus te, Christe, et benedicimus tibi.

℟. Quia per sanctam Crucem tuam redemisti mundum.

℣. Ora pro nobis, Virgo dolorosissima.

℟. Ut digni efficiamur promissionibus Christi.

℣. Signasti, Domine, tuum servum Franciscum.

℟. Signis redemptionis nostræ.

℣. Oremus pro pontifice nostro N.

℟. Dominus conservet eum et vivificet eum, beatum faciet eum in terrâ, et non tradat eum in animam inimicorum ejus.

℣. Oremus pro fidelibus defunctis.

℟. Requiem æternam dona eis, Domine, et lux perpetua luceat eis.

OREMUS.

Respice, quæsumus, Domine, super hanc familiam tuam, pro quâ Dominus noster Jesus-Christus non dubitavit manibus tradi nocentium, et Crucis subire tormentum.

Domine Jesu-Christe, Fili Dei vivi, qui horâ sextâ, pro Redemptione mundi, Crucis patibulum ascendisti, et

sanguinem tuum pretiosum, in remissionem peccatorum nostrorum, fudisti, te humiliter deprecamur, ut post obitum nostrum, januam paradisi nos gaudentes introire concedas.

Interveniat pro nobis, quæsumus, Domine Jesu-Christe, nunc et in horâ mortis nostræ, apud tuam clementiam, beata virgo Maria mater tua, cujus sacratissimam animam in horâ tuæ passionis, doloris gladius pertransivit.

Domine Jesu-Christe, qui refrigescente mundo, ad inflammandum corda nostra tui amoris igne, in carne beatissimi Francisci, passionis tuæ sacra stigmata renovasti, concede, propitius, ut, ejùs meritis et precibus, crucem jugiter feramus et dignos fructus penitentiæ faciamus.

Omnipotens sempiterne Deus, miserere famulo tuo pontifice nostro N., et dirige eum secundùm tuam clementiam in viam salutis æternæ, ut, te donante, tibi placita cupiat, et totâ virtute perficiat.

Deus, veniæ largitor et humanæ salutis amator, quæsumus clementiam tuam ut nostræ congregationis fratres, propinquos et benefactores, qui ex hoc seculo transierunt beatâ, Mariâ semper virgine intercedente, cum omnibus Sanctis tuis, ad perpetuæ beatitudinis consortium pervenire concedas. Per Dominum nostrum Jesum-Christum, etc.

*Apheçac cantatcen du hirur aldiz:* Parce Domine, parce populo tuo.

*Populuac ihardesten du orobat:* Ne in æternum irascaris nobis.

*Cantariec:* Pie Jesu Domine, dona eis requiem.

*Populuac:* Sempiternam.

*Lehen cantariac:* Jube, Domine, benedicere.

*Apheçac:* Benedicat nos Dominus Noster Jesus-Christus, qui pro nobis flagellatus est, crucem portavit et fuit crucifixus. ℟. Amen.



# AGONIACO OTHOITÇAC.

## LETHANIAC.

YAUNA, duçun urricari.
Cristo, duçun urricari.
Yauna, duçun urricari.
Andredena Maria, hunentçat othoitz eguiçu.
Ainguerù eta Arcanyelu guciec,
Abel saindua,
Yusten gorthea,
Abraham saindua.
Yondoni Yoani Batista,
Patriarca eta Profeta guciec,
Yondoni Petri,
Yondoni Paulo,
San Andres,
Yondoni Yoani,
Apostolu eta Ebanyelista guciec,
Yaunaren Dicipulu guciec,
Inocent saindu guciec;
Yondoni Estebe,
Yondoni Laurenti,
Martir saindu guciec,
San Silbestre,
San Gregorio,
San Augustin,
Aphezpicu eta Cofesor guciec,
San Benedito,

Hunentçat othoitz eguiçu.

San Franxes, *Hun. etc.*
Fraide eta Ermitau guciec,
Magdalena Saindua,
Santa Lucia,
Biryina eta Alhargun Sainta guciec, hunentçat othoitz eguiçue.
Saindu eta Sainda guciec, hunentçat ararteco içan çaitezte.
Yauna, urrical bekiçu, eta barkhadioçoçu.
Yauna, urrical bekiçu, eta beiraçaçu.
Çure coleratic, beira, çaçu, Yauna.
Heriotceco irriscutic,
Heriotce gaichtotic, *Beira, çaçu, Yauna.*
Ifernuco penetaric,
Gaitz gucietaric,
Deabruaren escuetaric,
Çure Sortcearen medioz,
Çure Gurutcearen eta Pasionaren medioz,
Çure Heriotcearen eta Ehorztearen medioz,
Çure Phizte gloriosaren medioz,
Çure Ceruetarat igaite miragarriaren medioz,
Izpiritu conxolatçailearen graciaz,
Azken yudiciocoegunean, beira, çaçu, Yauna
Bekhatorosac, othoi, entçun gaitçatçu.
Huni barkhatceaz othoizten çaitugu, arren entçun gaitçatçu.
Yauna, duçun urricari.
Cristo, duçun urricari.
Yauna, duçun urricari.

## OTHOITÇA.

ÇOHAZ, arima Cristaua, ilkhi çaite mundu huntaric, çu creatu çaituen Yainco Aita guciz botherexuaren icenean, çure-gatic sofritu duen Yesu-Cristo Yainco Semearen icenean, çure gainerat isuria içatu den Izpiritu sainduaren icenean; Aingueru, Arcanyelu, Tronu eta Dominacione, Printcipatu eta Bothere, Kherubin eta Serafinen icenean; Patriarken eta Profeten, Apostolu eta Ebanyelisten, Martir eta Cofesoren, Fraide eta Ermitau, eta Biryinen icenean; arren bakean içan dadila çure lekhua, eta Parabisuco gloriaren erdian çure egoitça, Yesu-Cristo gure Yaunaren medioz. Halabiz.

Yainco urricalmenduxua, Yainco ezti eta manxoa, Yainco, ceinac, çure misericordien nombre handiaren arabera, urratcen baiditutçu urriki eguiazco bat dutenen bekhatuac, eta pa-

saturicaco crimaric handienan eguinac içatu ez balire beçala, urrical bekiçu N. çure cerbitçaria, eta arraiki beha çoçu; eçagutcen ditu eta aithortcen-ere darozkitçu bere bekhatu guciac; bihotçaren erditic, helas! barkhamendu eske dagotçu; othoi, Yauna, entçun eçaçu. Ceronec, ô Aitaric samurrena! garbi diotçotçu, haraguiaren flakeçaz edo Deabruaren tromperiaz, eguin ahal içatu dituen hux guciac; eta çure odolaren gostuz erosi duçun membroa yunta çoçu çure Eliçaren gorphutçari: duçun compasione, Yauna, horren marraskez; urrical çakizcote horren nigar minei. Çure misericordian du choilki bere fidantcia: errecibi çaçu arren çure adiskideen herruncan Yesu-Cristo gure Yaunaren medioz. Halabiz.

Gomendatcen çaitut (ene anaia, edo arreba maitea) Yainco guciz-botherexuari, eta haren creatura çaren beçala, ematen çaitut haren escuetan; arren, noiz-ere herioa ethorriric, natu-

rari çor dioçuna pagatuco bai dioçu, bihur çaitecen, çu lurretic formatu çaituen, Autor bera-ganat.

Çure arima beraz gorphutcetic ilkhitcean, aintcinera ethor dakiola Aingueruen tropa, hurbil dakizkitçula yuyetçat yarriac daudecen Apostolu handiac; dathorçula oraino Martir gloriosoen armada triunfanta; ingura çaitçala Cofesoren gorthea; bozkariorekin errecibi çaitçatela Biryina garbiec eta plaça çaitçatela Patriarken galtçarrean.

Finean beguitharte ezti eta arrai batekin amulxuki har çaitçala Yesu-Cristoc, eta ordena deçala içan çaitecen bethi haren presentcian direnen nombreco. Urrun orduan çure-ganic ilhumbetaco icialdura eta suaren suplicio guciac, amor eman dieçakula Satan icigarriac bere lagun guciekin, eta, ikharatua ikhusteaz çu Ainguerу saindúez lagundua, seculaco lecerat ihes eguin deçala: altcha dadila Yaincoa, haren exaiac ezezta daitecela,

eta hura higuin duten guciac dohacela haren bistatic; khea beçala sunxi daitecela, eta suan ezcoa urtcen den beçala, çure aitcinean urt daitecela: eta contrarat sasia eta bozcarria daitecela yustuac. Ea beraz confundi eta ahalca beitez izpiritu gaichto guciac, eta Satanen ministroetaric ez bedi batere ausarta çu Ceruco bidetic guibelatcerat.

Çuretçat gurutceficatu den Yesu-Cristo berac beira çaitçala tormentetaric; çuretçat hil nahi içatu den Salbatçaile harc berac, beira çaitçala heriotce eternaletic; Yainco biciaren Seme harc berac, bere ardi maiteen balxan eçaguturic, artçain on batec beçala Parabisuco axeguinen erdian plaça çaitçala. Diçula bekhatu gucien barkhamendua, eta eman çaitçala bere escuineco aldean bere hautatuen artean. Orduan ikhus deçaçula bekhoz-bekho çure Salbatçailea, eta çure beguiez axeguinekin conxidera eguia eternal hura, goça çaitecentçat dohaxuec Yain-

coaren contemplaceaz duten eztitasun guciaz orai eta eternitatean. Halabiz.

Yauna, errecibi çaçu çure cerbitçaria çure misericordiatic igurikitcen duen salbamenduco lekhuan. Halabiz.

Yauna, beira çaçu hunen arima Ifernuco arriscu gucietaric, Deabruaren arte eta tentacione gucietaric. Halabiz.

Yauna, beira çaçu çure cerbitçariaren arima, lehenago Enoc eta Elias, guiçonen heriotce comunetic beiratu cintuen beçala. Halabiz.

Yauna, beira çaçu çure cerbitçariaren arima, Noë uholde yeneraletic beiratu cinduen beçala. Halabiz.

Yauna, beira çaçu çure cerbitçariaren arima, Abraham Ur Caldeacotic beiratu cinduen beçala. Halabiz.

Yauna, beira çaçu çure cerbitçariaren arima, Isaac Abraham bere aitaren escuetaric, imolatu gabe, beiratu cinduen beçala. Halabiz.

Yauna, beira çaçu çure cerbitçariaren arima, Lot Sodomaco sutic beiratu cinduen beçala. Halabiz.

Gomendatcen darotçugu Yainco handia, N. çure cerbitçaria, eta çu othoitzten çaitugu, Yesu-Cristo munduaren Salbatçailea, arren ez deçaçun errefusa plaçatcea Patriarken galçarrean horren arima, ceinaren-gatic hain amulxuki mundurat jauxi bai çare, Eçagut çaçu, ô Yauna, çure creatura, ez Yainco falxo eta arrotcec, bainan çuc ceronec, ô Yainco bici eta eguiazcoa, creatua: ecen, Yauna, ez da çu baicen Yaincoric, eta nihon-ere ez da çure obra handiac beçalacoric: bozcaria eçaçu beraz horren arima çure presentciaz; ez orhoit leheneco horren bekhatuez; hec guciac gaztetasunaren furiac eta pasioneen suac eguin araci diotça. Aithortcen du, Yauna, hoben handitan erori dela; bainan bederen ez ditu ukhatu eta arnegatu Aita, Semea, eta Izpiritu Saindua, aitcitic Yainco gauça gucien Creatçailea leïalki adoratu du.

O Aita guciz-eztia, ahantz çatçu horren gaztetasuneco hux eta ignorantcia

guciac, eta çure misericordia handiaren arabera, çure gloriaren erditic hortaz erhoit çaite. Idecotçu Ceruco portaleac, Aingueruekin bozcaria dadintçat. Ceruco armadaren manamendua merecitu duen Micaël Arkanyeluac errecibi deçala horren arima: dathortzcotela aintcinerat Aingueru sainduac, eta erraman deçatela Ceruco gloriaren erdirat: han har deçala Yondoni Petri Apostoluac, ceinari Yesu-Cristoc eman baidiotça Ceruco gakhoac: lagun dakiola Yondoni Paulo, ceina içan baida Cristo berac hautaturicaco yarro berecia: hortaz othoitz eguin deçala Yondoni Yoani Ebanyelista, Yaunaren Apostolu maiteac, ceinari confidatuac içatu baiçaizco Ceruco secretuac. Othoitz eguin deçatela oraino bertce Apostolu guciec, ceinei eman içan baiçaie amarratceco eta lachatceco podorea. Finean eguin deçatela horrentçat othoitz mundu huntan harenbertce sofritu duten bertce Saindu guciec, arren, gorphutcetic horren

arima separatcen denean, mereci deçan sartcea Ceruco glorian, aintcinguidaritçat duela Yesu-Cristo gure Yauna, ceina bici baida, eta erreguinatcen baidu Aita eta Izpiritu sainduarekin menderen mende gucietan. Halabiz.



# OTHOITÇA YESUS YAUNARI.

O YESUSEN icen Saindua! icen distiranta, çointaric fermuki ʂinhesten baitut dohala ene bicico, ene chede gucietaco eta ene heriotceco çoriona. Orai danic eguinen ditudan guciac, eguin nahi ditut oro çure ararlecotasunaren azpian. Iratçarria banago, bethi YESUS içanen da ene beguien aintcinean; lokhartcen banaiz YESUSEC hetxico ditu ene beguiac, eta ene loan ez dut bertce idearic içanen baicen ere YESUSENAC; baldin banabila, YESUSEKIN ibilco naiz; yarria banago, YESUS içanen dut ene aldaketan; istudiatcen badut, YESUS içanen da ene nausia; izkiribatcen hari banaiz, YESUSEC guidatuco du ene luma, eta YESUSEC izkiribatuco du YESUS; othoitcean banago, YESUSEC sustatuco ditu ene hitçac; onhatua banaiz, YESUS içanen da ene descanxua;

gose banaiz, YESUS içanen da ene yanharia; egarri banaiz, YESUS içanen da edaria; eri banaiz, YESUS içanen da ene miricua eta ene erremedioa; hiltcen banaiz, hilen naiz YESUSEN besoetan; YESUSEC hetxico ditu ene beguiac, YESUS içanen da ene hobia, haren icena ene hobi gaineco izkiribua, eta bethi YESUSEZ goçatcea ene çorion eternala!........ Halabiz.

---

## ARIMA YAINCOTIAREN

### YAINCOA GANATCO OIHUA.

GRACIA, ô ene Yaincoa, gracia! hainbertce arima, egun oroz gure ingurunetan galtcen hari direnentçat. Satan yeloscorra yauci da lece icigarrietaric, eta bere errebiamenduan arima iresten dabila. Sustatcen ditu bere lagun icigarriac; oihuca dagocote: *arimac! arimac! arimac! gaiten guciac bola arimen galcera!* Eta arimac erort-

cen dire, uda azkenean hostoac beçala, lece eternalerat!

Eta guc ere halaber, ô ene Yaincoa, oihu eguinen dugu: *arimac! arimac! arimac behar ditugu!* Galdatcen darozkitçugu Yesus, gure salbatçailearen çaurien bidez. Çu ganat oihuz daude çauri adoragarri hec, diren becembat aho podoroxu balire beçala. Calbarioco gainetic, arrantcez khoroatu Erregueac epheric gabe galdeguiten daizkitçu aingueru errebel ixutuari aztaparretaric khendu diozcan arimac... O ene Yaincoa! Harekin batean eta haren bidez, gualdatcen derautçugu, çure oinetan ahuzpez emanic, gracia bera, çure loriaren icenean, eta Biryina notharic içan gabecoaren ararteeotasunaz. Halabiz.



# OTHOITÇA COFESOARENTÇAT.

Escas ditudan graciac çuri galdeguitean, ò ene Yaincoa, hain esker gabea içan othe naiteke, non ahantcico baitut, çure ministroen artean, ceronec eman dautaçudana cofesortçat, penitentciazco sacraménduaren bidez çurekin bakhetceco. Bethe çoçu, othoizten çaitut, Yauna, bere arima Aphez Sainduac eguiten dituzten berthute guciez. Emoitçu Yondoni Petriren indarra, Yondoni Pauloren caritatea, Charles sainduaren kharra, San Augustinen arguiac, Sàn Crisostomeren fermutasuna, San Ambrosioren ainguеruzco libertatea, San Bernaten debocionea, Dabiten penitentciazco izpiritua, San Frantses salesecoaren eztitasuna, Yondoni Bichintcho Paulocoaren humilitatea. Guida çatçu ceronec haren urhax eta eguintça guciac, lurraren gainean çure misterioen phartitçaile le-

yal eta çuhur bat içan ondoan, errecibi deçan amoreac gatic, çure ganic ceruetan, aphez heyentçat dauçaçun khoro distiranta ceinen bici gûcia içan baita conxecratua Yaincoaren loriacotz, bere aneya arreben salbamenduco eta bere buruen saindutceco. Halabiz.

---

## AMODIOZCO ACTA PERFETA.

Ez, Yesus, ene bihotceco Yaincoa, ez da aguintcen dautaçudan cerua, ni hoin biciki çure maitatcerat erakhartcen nauena, ez eta guiçonac harritcen dituen, hoin ifernu ikharagarriaz bekhatoreari eguiten dioçun mehatchua, ni çure manu guciz çucenei obeditcerat hoin leyal bihurtcen nauena. Ene bihotça amodioric garbienaren garrez suhartua da, ikhusiz gurutcearen gainean, çure haragui pairacorrean, çuc sofritcen duçun heriotce dorphea, laidoski mespreçatua, sarraskitua mila

colpez, çauriz estalia!... Ikhusgarri lazteco horren bichtan, iresten hari nauen amodiozco su garraz sustatua, ez balitz ere ćeruric, oraino maita cinitçaket, eta ez balitz ere ifernuric, beguira neçake çure leguea. Ez dut nahi çu baicic bertce sariric çure maitaiceco; eta ez banu ere idurikitcen çure ganic idurikitcen dudana, bardin bethi maita neçake Yesus, ene Yauna, orai maitatcen dudan beçala. Halabiz..

(*Santa Theresa.*)

---

## OTHOITÇAC
### Andredena Mariari.

Orhoit çaite, ô Biryina Maria, guciz ona eta urricalmenduxua! ez dela egundaino aditu nihor çure-ganat ihes eguin duenic, çure laguntça galdatu duenic, çure arrartecotasuna bilhatu duenic, çutaz içan dela abandonatua. Nic ere, fidantcia beraz gogoa sustatua, çure-ganat, ô Biryina, biryinen Ama loriosa, laster eguiten dut, çu-

ganat heldu naiz; auhen minetan, ni bekhatorea, çure oinetarat erortcen naiz: ez deçaçula, ô Berboaren ama, ene othoitça arbuya, bainan adi çaçu fagorezki, eta entçun çaçu. Halabiz.

---

## GARBITASUN

***Sainduaren galdeguiteco maiz eguin behar duçun othoitça.***

ÇURE Biryinitate Sainduaz eta çure contcebicione notha gabecoaz, Biryina guciz garbia, garbi ditçatçu ene bihotça eta ene gorphutça.

**Badire ehun egunen indulgentciac othoitz hau eguiten den aldi gucietaco.**

---

## SAN YOSEPH HANDIARI.

AGUR Yoseph, graciaz bethea: Yesus eta Maria dira çurekin, benedicatua çare guiçonen artean, eta benedicatua da çure esposaren fruitua, Yesus. San Yoseph, Yesusen aita lek-

hucoa, eta Maria biryina dohaxuaren esposa, othoitz eguiçu guretçat, orai eta gure heriotceco orenean. Halabiz.

---

## AINGUERU BEGUIRALEARI.

O YAUNAREN aingueruа! ene beguirale fidela, ene aita cerucoac çuri gomendatua naiz, beraz egun huntan (edogau huntan), beguira, argui, guida eta goberna naçaçu, eta heriotceco orenean baliaçazkit.

---

## INDULGENTCIA PLENARIOA

### ERATCHIKIA OTHOITZ HUNI.

HUNA non naicen, ô Yesus ona eta guciz amulxua! çure aitcinean belhaunico emana. Othoizten çaitut eta arrakeritcen ene arimaco khar guciaz, ene bihotcean sar araz dietçatçun fedezco, esparantçazco, eta caritatezco sendimenduric bicienac, ene bekha-

tuen eguiazco urrikia, eta hetaric guebiago ez eguiteco borondateric fermuena; izpirituz consideratcen eta gogoan erabiltcen ditudan demboran, amodio bici eta dolore handi batekin, çure bortz çauri sacratuac; beguien aitcinean emanez, ô Yesus ona! Dabit profetac çutaz cioena: « cilhatu « dituzte ene escuac eta ene oinac; « khondatu dituzte ene heçur guciac. »

Cofesaturic eta comuniaturic othoitz hau erraiten duenac gurutcefica baten aitcinean, bortz *gure aita* eta bortz *Agur Mariarekin*, irabaz deçake indulgentcia plenarioa, eta libra Purgatorioetan den arimabat. (*Clem. VIII*, *Benoit XIV*, *Pio VII*).

---

## EGUNAREN

### GUIRISTINOKI IRAGATECO MOLDEA.

ATÇARRI çaren beçain laster, Yaincoari bihotça altcha dioçoçu, eguiçu gurutcearen seinalea eta aipha çaçu, Yesusen, Mariaren eta Yosephen ice-

*nac*, erroçu çure buruari; *menturaz egun hau eternitateaz içanenduc seguitua; nola behar duc beraz pasatu egun hau.*

Beztitcean beguira çatçu modestiaric çorrotcenaren erreguelac, erraçu *Pater* eta *Ave Maria*, edo eguiçu bertce cembait othoitz, eta eman çaite debocionerekin çure goiceco othoitçaren eguiten.

Goiceco othoitçaren ondoan, edo ahal duçunean, eguiçu oren erdi baten, edo bederen oren laurden baten meditacionea; gutiac dire egun guciez oren erdìbat baino guehiago dosteta funs-gabetan, eta ez deuskerietan galtzen ez dutenac, eta doidoiaco fortuna baten ilhumbetan bici den presuna batec bere familiaren hazteco egunero oren eta memento guciac empleatu behar baditu, lanean hari delaric meditacione hori eguin deçake, ana bera eta ikhusten dituen gauça guciac Yaincoaren perfeccioneen eta munduco funs-gabetasunaren consi-

causitcen direnec baino gutiago obratcen bere salbamendua; eta asco presuna içanen dire uste dugun baino gorago ceruan altchatuac bere estatuco eguin bide mendrenen bethetceco içatu duten leyaltasuna dela causa, obra eder batçu dire, duda gabe, Elicetan egotea, othoitçaren eguitea; baldin ordean othoitcean egoteco çure etcheco lanac uzten baditutçu, çure othoitça ez çayo Yaincoari agradatcen; Izpiritu Sainduac handizki laudatcen du iruten haricen cen, eta bere etcheco lan chehez occupatcen cen emazteki borthitz hura.

Yanean, edanean, loan eta çure libertimenduetan, ez duçu placera bilhatu behar placera gatic, bainan çure osassunaren conxerbatceco eta Yaincoaren cerbitçuan haren emplegatceco chedea içan behar duçu, artha içan çaçu bereciki compainia eta errecreacione onhestac, eta perilos ez direnac hautatceco, eta ez seculan colpatceco caritatea, garbitasuna, eta

bertce berthuteac; çure sensuco presunekin errecreatu behar çare, bertce sensuco presunac ez ditutçu hantatu behar premiaz baicen, eta orduan ere mintçatu behar çaizcote ahal beçain modeski, serioski eta laburki.

Ez deçaçula, ahal baduçu, egunic utz meça saindua entçun gabe, eta ez baçaitçu posible meçan causitcea, meça-ezkila aditcean bihotcez aphecari yunta çaite, eta meça gogoz entçun çaçu, hartaco eguinez, nihor ohartu gabe, meça erreyalki entçutean eguiten ditutçun othoitcetaric cembait.

Egun guciez arrosarioa erranen duçu, çure Aingueru beguiraleari eta çure Patroin sainduari cembait othoitz eguiten dioçutelaric.

Mahainean yartcean eta mahainetic altchatcean hartaco catichiman diren othoitçac eguinen ditutçu, *Angelus* egunean hiruretan, eta *Ave Maria* orena aditcean erraiten duçularic.

Cofesatu behar çare bederen ilhabete guciez, artetaco besta buruetan,

era çure sor egunean; comunionearen husutasuna, edo bakhantasuna çure cofesorac erreguelatuco du.

Igandeac eta bestac santifica çaçu berrico meça nausian bezperetan, predicu eta catichimetan aurkhitcen çarelaric, mundutarren bilkhuetaric ihez eguinez, debocionezco iracurtce eta bertce obra onetan egun hura iragaten duçularic.

Eguna akhaba çaçu arraxeco othoitçaz, eguiten duçularic çure contcientciaren examina chehe bat çure huxen eçagutceco, eta helaz Yaincoari barkhamendu escatceco, gau hartan hil behar bacine beçala.

Bilhuz çaite modestiarekin, har çaçu ur benedicatua, etçan çaite çure arima Yaincoaren escuetan eçarri ondoan, eta lokhar çaite cembait penxamendu saindutan.

## AKHABANTÇA.

# LIBURU HUNTAN DIREN GAUCEN KHAUSITCECO

# TABLA.

Paya.

GOICECO *Othoitça*.............. 11
*Arraxeco Othoitça*.............. 22
*Noela* atçar gaiten.............. 32
*Exercicio Izpirituala* San Ambrosioc....................... 35
*Penxamendu Sainduac*.......... 40
*Nola behar den entçun Meça Saindua*.......................... 55
*Cofesatceco Debocionea*.......... 66
*Contcientciaco examina*......... 68
*Contricionearen biltceco moldea*.. 80
*Cofesio ondoco Actac*............ 93
*Comunione Sainduuren aitcineco Actac*...................... 97
*Ondoco Actac*..................... 107
*San Thomasen othoitz ederra*.... 112

## TABLA.


| | Paya |
|---|---|
| *Sacramendu Sainduaren lethaniac* | 117 |
| *Andredena Mariaren lethaniac* | 125 |
| *Aspiracione debotac* | 128 |
| *Exemplu ederra* | 135 |
| *Guiçonaren lau azken finac* | 142 |
| *Arimaren comberxionea* | 151 |
| *Burhasoen othoitça haurrentçat* | 155 |
| *Emazte haur esperantcetan direnen othoitça* | 157 |
| *Piayetaco othoitça* | 158 |
| *Igandetaco Bezperac* | 160 |
| *Abendoco himnoa* | 169 |
| *Gariçumacoa* | 172 |
| *Pasionecoa* | 173 |
| *Bazco çaharrecoa* | 174 |
| *Completac* | 177 |
| *Ama Biryinaren Antifonac* | 188 |
| Salve, regina | 190 |
| *Arraxeco examina* | 192 |
| Sub tuum presidium | 196 |
| Ave Maris stella | 197 |
| *Urtheco Besta printcipaletaco Bezperac* | 199 |

## TABLA.


Paya.

*Andredena Mariaren Conceptionea* ..... 201
*Eguerri egunean* ..... 205
*Yondoni Estebe* ..... 208
*Yondoni Yoanni Ebanyelista* ..... 210
*Urthe berriz* ..... 211
*Trufaniaz* ..... 214
*Purificacionea* ..... 216
*Yondoni Leon Bayonaco aphezpicua* ..... 217
*Andredena Maria martchocoa* ..... 222
*Bazco egunean* ..... 223
*Bazco çaharrez* ..... 225
*Yondoni Salbatorez* ..... 226
*Mendecostez* ..... 228
*Trinitatez* ..... 230
*Bezta Berriz eta* Pange Lingua ..... 232
*Yondoni Baptistaren egunean* ..... 234
*Yondoni Petiriz* ..... 235
*Andredena Maria aboztucoan* ..... 237
*Andredena Maria buruilecoan* ..... 238
*Saindu gucien beztan* ..... 241
*Hilen Bezperac* ..... 243
Exaudiat ..... 248

## Tabla.


Paya.

Te Deum ........................ 249
Stabat Mater, *latinez*............ 251
Stabat Mater, *escuaraz*.......... 254
Inviolata ........................ 257
*Besta Berrico Octaba gucico*..... 258
*Martiren himnoac* .............. 264
Dies iræ......................... 266
*Yondoni Leoni, emazte haur esperantcelan direnec eguiten ahal duten othoitça* .... .......... 270
*Çazpi Psalmu Penitentcialac latinez*.......................... 272
*Sainduen lethaniac* ............ 285
*Çazpi Psalmu Penitentcialac escuaraz*......................... 292
*San Frantcesen lethaniac*........ 314
*San Antonionen lethaniac* ....... 316
*Norc bere iceneco Sainduari*.... 319
*Yesusen Bihotz Sacratuaren Bezperac*........................ 323
*Yesusen Bihotz Sacratuari consecracionea* ................... 328
*Yesusen Bihotz Sacratuaren lethaniac* ...................... 336

## Tabla.


Paya.

*Meça Sainduco Othoitça.........* 344
*Meça Sainduaren laguntceco moldea...........................* 374
*Yesu-Christoren Pasione Saindua.* 397
*Estacioneac edo Gurutcearen Bidea...........................* 423
*Agoniaco Othoitçac.............* 457
*Othoitça Yesus Yaunari.........* 468
*Arima Yaincotiaren Yaincoa ganatco oihua ...................* 469
*Othoitça Cofesoarentçat.........* 471
*Amodiozco Acta perfeta.........* 472
*Othoitçac Andredena Mariari ...* 473
*Garbitasun Sainduaren, etc.....* 474
*San Yoseph handiari............* 474
*Aingueru beguiraleari ..........* 475
*Indulgentcia plenarioa, etc......* 475
*Egunaren guiristinoki iragateco moldea.......................* 476





BAYONAN, P.-A. Cluzeau Baithaco Imprimerian.

